JAVIER ARZUAGA

# gauerdi minean

Itzultzailea: Jon Arano

Javier Arzuaga eta Amaia Apaolaza San Sebastian zenei, bai eta Angel Gonzalez Kataraini eskerrik beroenak, beren proiektuaren hasmentak honakoa ekarri duelako hamaika urteetara. Joseba Sarrionandiari bultzagile handiena izateagatik.

Jatorrizko gaztelerazko bertsiotik euskararako itzulpena –eta edizio honen arduraduna– Jon Mikel Arano Aramendi. (2018/2019/2020, Ordizian/Arantzazun, etc.) Mila esker Arantzazuko frantziskotarren anaidiari eta Pello Zabala zenari bereziki.

Laguntzaileak: Koldo Izagirre eta Andoni Eskisabel. Eskerrak Miel Anjel Elustondori ere, akuilu izatearren.

# HITZAURREA

*Kubako iraultzaren garaitza eta laster, epaiketak eta fusilatzeak izan ziren uhartean. Besteak beste, Habanako La Cabaña kartzelan. Bertako kapilau zen Javier Arzuaga frantziskotarra, eta ekainera bitartean 55 kondenaturi lagundu zien hormara. Behin, berak jo behar izan zion graziako tiroa zigortuari. Infernua ezagutu zuen munduan fraide gazteak.*

Che Guevararen kapilauaren egunik zailenak

miel a. elustondo

Diote Che Guevararen kapilaua izan zela. Javier Arzuaga Lasagabaster (Oñati, 1928 – Georgia, AEB, 2017) zituen izendeiturak. Arantzazuko fraide, Kubara destinatu zuten 1952an. Arzuagak berak zioenez, fraide ikasketak egiten ari zen garaian ez zuten politikaz ez justizia sozialaz pentsatzen, ez hitzik egiten. Are gutxiago pentsatzen edo hitz egiten zuten demokraziaz. Horrekin batera, ordea, Arzuagak berak zioen Arantzazuko fraideek errebeldia halako bat josia zeramatela arima barruan, Francoren kontrako gogoa, lehenik, eta zeinahi diktadoreren kontrakoa, hurrenik. Kuban, horrek Fulgencio Batista (Holguin, Kuba, 1901 – Malaga, España, 1973) diktadorearen kontrakoa izatea zekarren.

Bestalde, Elizan ere bazen ikararik, Arzuagak idatzi zuenez. «Zenbait egilek, hainbat mugimenduk —Frantzian, oroz gain—, lehen lerrora ekarri nahi zituzten ordu arte inork gogoan hartu ez zituenak; esan nahi baita, langileak, txiroak eta baztertuak. Beraz, hortik erraz segitzen da Kubako frantziskotarrok ere, irakurle onak baikinen, bitan pentsatu gabe murgiltzea errebeldia eta iraultzetan. Ni neu Zabalak, Beristainek, Bastarrikak, Sudupek eta gainerakoek sartu ninduten saltsa horretan, baita irakurtzen nituen liburuek eta Kubako Ekintza Katolikoaren Gazteriak ere. Eta Kuba iraultzaren gorriaz margotu zenean, ni neu ere, gainerako guztiak bezala, iraultzaile sentitu nintzen zuztar-zuztarretik».

1952an irakasle jardun zuen lau urtez Habanan, Santiago de las Vegaseko apaizgaitegian. Hirugarren urtean, dena den, misio lanetan ere jarri zuten inguruko parrokietan, eta, haietan, bertakoak ezagutu zituen, etxekotzat hartu zuten kubatar laborariak. Harreman horiek jarri zuten, inondik ere, Ekintza Katolikoaren zenbait talde gidatzera. Ezari-ezarian mudatu zen Arzuaga, ikasketek erakutsi ez ziotena irakatsi zioten irakurketek bezainbat kaleko jendeek: bizi zeneko mundua. «Lehen, bekatuzko mundua fededun bihurtzea zen egitekoa. Gero, ordea, bekaturik larrienak injustizia eta pobrezia zirela ikusi nuen (...) Lehenbizi, kilimak sentitu nituen; gero, urradurak; azkenean, «betiren betiko egietan» baino areago, justizia sozialean pentsatzen amaitu nuen». Eta heldu ziren erlijioari buruzko zalantzak, teologiaren gainekoak. Arzuagari normalak iruditu zitzaizkion galderak, «anormala galderarik ez egitea, ez kezkatzea zen». 1956an Casablancako parrokiara destinatu zuten, zalantzak eta barne urradurak poro guztietatik zerizkiola.

## Casablanca, 1959

Casablancako parroko zela, jurisdikziopean zuen La Cabañako gotorleku militarra eta, Fulgencio Batistaren diktaduraren sasoian, igandero jo izan zuen bertako Santa Barbara kaperara meza esatera.

Besterik izan zen Iraultzaz gero. «Komandante berriak, Ernesto Guevara Che-k, meza galarazi zuen La Cabañan. Hala ere, gauez nahiz egunez, kartzelara joateko eta

bertako presoak zaintzeko baimena eman zidan. La Cabañako kartzelako kapilau izan nintzen bost hilabetez, urtarriletik ekaineko lehenengo astera arte. Egunero joaten nintzen kartzelara bisitan. Urtarrilaren 29ko ilunabarraz gero, orduantxe estreinatu baitzen «heriotza gela» izenekoa, gauero joan izan nintzen delako gelara, kondenatuekin lasai hitz egitera eta tarte batean haiekin batera errezatzera. Bost hilabete horietan, heriotzara kondenatutako berrogeita hamabost kondenaturi lagundu nien fusilamendu hormara. Esan izan dute hilabete horietan askoz gehiago ere fusilatu zituztela La Cabañan. Uharteko beste zenbait lekutan bai, seguruena. Baina 59ko urtarriletik ekainera bitartean La Cabañan ez zen berrogeita hamabost fusilamendu besterik egon. Ez bat gehiago, ez bat gutxiago. Nire barruan burdina gorituaz grabatuta daramadan zenbakia da, behiak markatzeko burdinaz, esateko moduan». Horixe Arzuagaren infernu gorria sutan. «Nire biziko egunik zailenak izan ziren, dudarik gabe».

Bateko eta besteko, liburua idazten asmatu zuen Arzuagak 2006an: Cuba, 1959. La galera de la muerte (Kuba, 1959. Heriotza gela). Lehenengo argitalpenaren eragile estatubatuarrekin haserre, liburuari izenburua aldatu eta osorik bertsionatu zuen Arzuagak —jatorrizko testua ez ezagutzeraino aldatuz—, Anjel Katarainek digitalean argitaratzean (A la medianoche, Semillas en el Tiempo, 2002) lege eta eskubide eragozpenik gabe zabal zezan. Eta, hain zuzen, bigarren testua hartu dute ingelesezko itzulpen argitaraberrian ere: At Midnight, Reno-Nevadako Unibertsitatea, 2019). Oraindik orain, berriz, euskarara ekarri du Jon Mikel Arano idazleak Arzuagaren bigarren idatzia, Gauerdi minean izenez. Argitaratuko al da orain!

## Urtarrilak 28

Urtarriletik ekainera, jai eta aste, egunero egunsentiarekin, Arzuaga Casa Blancako parroko lanak betetzera zuzentzen zen, La Cabaña kartzelako lan gaitzak ere eginkizun zituela.

Lehenengo, kartzelako nagusi Che Guevararekin hitz egitera joan zen, komandantearen izenaren aipu eta sona handiak erakarririk, hein batean. Iraultza aurreko aldian bezala, La Cabañako Santa Barbara kaperatxoan iganderoko meza esaten utzi ziezaiola eskatu zion Arzuagak Cheri. Baita honek zorrotz ukatu ere. Aldiz, kartzelako presoak ikustera joateko baimena eman zion, «zenbatnahi, noiznahi, nahi beste denboran». Lehenengo elkarrizketan bertan agindu zion Chek justizia iraultzailea laster hasiko zela lanean La Cabañan, «epaitegiak egongo dira hemengo murruen artean, exekuzioak, eta, horretarako, hormatzar bat». Lana lepo izango zuela esan zion Chek frantziskotar gazteari: «Zuk nahi baino lan gehiago ere izango duzu. Hobeko duzu indarrak bildu, zer edo zer beharko duzu-eta, aita».

Justizia iraultzailearen bulegoa, eta auzitegia, ireki zituzten kartzelan bertan, eta urtarrilaren 28an epaiketak egiten hasi ziren. Lehenengo epaiketa, hala ere, Kirol Jauregi eginberrian burutu zen, arratsaldean. Eta hantxe izan zen Arzuaga frantziskotar gaztea. «Begiak erdi-itxi eta Santa Catalinako eta Boyerosera errepideko kirol jauregia ikusten dudala iruditzen zait, erdizka betea, baina lehertzeko zorian, oihuengatik. Jende gehiago espero zen, askoz gehiago. Baita ikuskizun handiagoa ere. (...) Ikuskizuna astuna, mantsoa eta aspergarria da. Iluntzean, antzerkia ez gatz ez piper luzatzen zela

iritzita, etxera egin zuten begiluzeek». Gauzak ez ziren erregimenak nahi zuen modura atera. Defentsa abokatuak pekoz gain jarri zuen epaiketa. «Telebista-kamerekin eta ikusleak murriztu gabe egindako lehen eta azken epaiketa izan zen». Kirol jauregiko epaiketak bertan behera utzi eta La Cabañan bertan egin ziren harrezkerokoak.

Epaiketen ondotik, iraultzak preso hartuak hormatzarrera eramateko garaia heldu zen. Fusilatzeak. Haien lekuko zuzena izan genuen Arzuaga, 31 urteko frantziskotar gaztea. Beltzak eta gorriak ikusi zituen, latzak, ez irudikatzekoak, zapart egin zuten haren barruak, haren fedeak, haren ordu arteko sinesteak. 55 fusilatze bizi izan zituen, bata bestearen ondotik, banan-banan, hiltzera lagundu zien. «Ez zen, edo bazen, jakina zela, edo ez, ez dakit nola esan, haien heriotza. Heriotza zen. Nirea eta haiena, denona… Heriotza».

Urte asko geroago, berrogeiko urtealdia eta gero, jarri zituen zurian beltz ordukoak. Idatzi zituenak idatzi eta ulertu genuen zergatik ez zuen lehenago idatzi 1959ko infernu hura, iraultzaren lehen hilabeteek eragin zioten trauma.

## Javier Arzuaga – Gauerdi minean

«Alfonso [Zayas] kapitainak zuzentzen zuen gau horretan pelotoia. (...). Gorputza zerraldo erori zen. Inguratu ginen. Ez zegoen hilda. Auhenka ari zen, Padre!, Padre! Nabarmenki noraezean, Alfonsok ez zuen asmatzen grazia-tiroa jotzen. Asaldatu nintzen eta presazko keinuak egin nizkion Alfonsori, errukizko tiroa eman ziezaiola buruan. (...) Alfonsok tiroa jo zion, baina Jainkoak daki nora joan zen bala. Hiltzear zenak aieneka segitzen zuen: Padre! Padre! (...) Alfonsok bigarren grazia-tiroa desarratu zuen. Alferrik galdutako beste berun puska bat. Padre, padre! Alfonsori eskumuturretik heldu eta indarrez gerturatu nion eskua exekutatuaren burura. «Jo, jo egiok, ja!». Katu-kolpekaria sakatu zuen. Gorpua astindu egin zen lurrean. Arnasa erdi etenda, dardarka, azken oliadura igurtzia eman nion. Inori ezer esan gabe erretiratu nintzen komentura. (…)

Aita Estanislao Sudupe argia piztuta geratzen zen lo batzuetan, liburu edo aldizkari bat eskuetan. Haren gelan argia ikusi eta deitu gabe sartu nintzen. «Aitormena gura dut, gau honetan gizon bat akabatu dut». «Esan ezak berriz! Zer esan duk?». «Gizon bat hil dudala!». Asko kosta zitzaion ni lasaitzea. Oso erdizka lortu zuen. Ez nintzen oheratu. Komentuko goiko zabaltzara igo nintzen izarrak kontenplatzera eta haiekin batera negar egitera».

# BAT

Orro egin zuen bolborak,
marru egin zuten burdinek eta harriek
gau erditik goizaldera,
Ereinotz-erramuen Hobian.
Kolpetik hil ziren erlojuak oro,
astiro eta isilean hiltzera
makurtu zen Denbora.
Banan-banan itzali ziren izarrak,
manta beltzean bildu zen ilargia.
Lurra pitzatu zen eta espazioak
izateari utzi zion.
Ez eskuinik ez eta ezkerrik,
ez goirik ez beherik,
ez barrurik ezta kanporik.
Dena geldirik, deus ez zen mugitzen,
harresiak eta arbolak kearekin joanda
hodeiaren moduan nabigatzen zuen izuak.
Mamuez bete zen Cabaña.
Heriotzak gidaturiko
mamuen baleta ginen
Hutsunez hutsune,
isiltasunetik isiltasunera.
Gau-minean.

Javier Arzuaga Lasagabaster naiz ni. Abizenek diote, baina inork dudarik balu, letra guztiekin esango dut, euskaldun peto-petoa. Oñatin, Gipuzkoan, ekarri ninduten mundura, doi-doi duela laurogeita bi urte + berrogeita hamar egun. Abade ohia naiz, ustez Eliza Katolikoaren baitan naizelakoan nago oraindik, eta Stella Andino Padillarekin ezkonduta nago. Hiru seme-alaba hazi ditugu: Xabi, Madalen eta Maite. Ama eta kimuak, lauak puertorricoarrak dira, eta ohore handiz, eransten dute beraiek. Gustukoa dut hori. Ona da nondik gatozen jakitea eta oroitzea.

Gure gurasoak oso "jende ona" ziren, zintzoak zinez. Eta ez dakit interesatzen ote zaidan ere gutxi-asko beraiek ere "euren garaiko seme-alabak" zirela jakiteak. Katoliko-apostoliko-erromatarrak eta tradizionalista tinkoak ziren edozeren gainetik (vs. liberalak edo/eta errepublikarrak). Por Dios, por la Patria y el Rey. Garaiz joan zen gure aita eta ez zion betarik eman bere semeak langa saltatu eta Patriatik eta Erregegandik desertatzen ikusteko. Jaungoikoagandik ez, baina apur bat bai, Jainkoagan sinetsi eta Bera ordezkatzen dutela diotenengandik apur bat baino gehiago esango nuke.

Gure gurasoek Bibliako kontsigna oso-beterik obeditu zuten: "Hazi eta ugaldu zaitezte". Txiroak ziren, baina zer axola, "Ugal zaitezte" agindu zuenak badaki ogiak ere biderkatzen. Zortzi seme-alaba hezi zituzten, nahiz eta azken bi neskak jaio eta laster hil ziren. Halere, seguru nago ez zirela kexu izango euren lau seme eta bi alabak, seiek ezkongabe izatea erabaki eta fraide eta moja abituak jantzi bagenitu. Euren ugalkortasunarekiko kontradikzio txiki bat, zeinaz ez ziren segur aski konturatuko ere. (Maiz esan ohi dut, gure ama komenturako moja abadesa bikaina izan zitekeela, altuera txikitxokoa izan arren.)

Gure etxean komentu askotan baino gehiago errezatzen zen. Benetan, badakit zer diodan. Ez diot ongi ala gaizki errezatzen zenik, baizik eta errezatzen zela. Eta kantuan egiten zen, zeren eta gure aita musikaria baitzen, organista, parrokiako koruko eta udal bandaren zuzendaria; eta lau urtetarako bere sei seme-alabok tarrapataka eta majo sakatzen genuela pianoa, eskalan "do-re-mi-fa-sol-la-si-do" gora eta "do-si-la-sol-fa-mi-re-do behera. Jolas ere egiten genuen, bai eta kale ere eskolatik arratsalde batzuetan eta ni akolito nintzen, baina sekula ez ziguten laga sartzen zinera –ez dut akorduan Aloñamendi izena zuen ordurako–, ez, hori ez, ze "Aita-santuak zinetik infernura dio", edo halako zerbait.

Hamar urte nituen Arantzazuko frantziskotarren seminariora eraman nindutenean, orduan Aránzazu deitzen geniona. Hamar urterekin inongo umek ez daki Jainkoak deitu ote duen "erlijio bizitzara" ala ez; nik ez nekien bokaziorik baneukan edo ez. Nire aita-amek bazeukaten nire ordez bokazio ikaragarria. Ikasketak alboratu eta etxera itzultzeko gogoa behin baino gehiagotan izan nuen nerabezaroan. Negarrez hasi eta mihia hozkatzen nuen, ze "nola egingo diet hau gurasoei…?!". Ez, ez, ezta pentsatu ere, aurrera. Jainkoak esango du. Ergela, ergela galanta ni! Jainkoak ez zuen egundo ezer esan, ez gidari batek ez maisu espiritual batek ez zidan esan "hoa, bokazio hau ez baituk hirea, hoa etxera".

Gurasoek nigatik sentitzen zuten bokazioak ez zuen alde egin ez habia egin ene bihotzean. Disimuluan, isildu eta baneuka bezala egiten nuen. Eta urteak pasa ziren horrela. Inoiz ez ninduten abade ordenatu beharko. Sekula ez ninduten apaiz egin beharko. Hutsegite handia izan zen Frantziskotarren Ordenuan sartzea, behin ere ez ninduten eraman beharko apaizgaitegira hamar urterekin. 1967ko abuztuan predikatu nuen neure azken misioa Perun, Chaclacayon zehazki, Limatik hurbil, han non errepidea kostako marra abandonatu eta Andeak igotzen hasten den. Arratsalde hartan Limako kardinal-artzapezpikuak errieta latza egin zidan, kexak iritsi zitzaizkiolako: "Ze gauzak esaten ditu abade honek bere sermoietan…?!".

Baina, hala ere, ez zen bera izan gau horretan nire hitzak iradoki zizkidana. Oraindik ez dut entenditzen eta ez dut endelegatuko ere inoiz zer dela eta, zein intentziorekin, berbaldia hasieran nola esan nuen, aldaretik eta eliza mukuru beteta –atzo gertatu balitz bezalaxe oroitzen dut–: "Ni, hamar urterekin neuk hil nuen edo akaso beste batzuek hil zuten ume haren gorpua naiz". Izugarria, ezin dut ulertu. Esaldi soil bat da, zen, esaldi txar bat. Ez naiz hiltzailea, ez eta eraila ere ez naiz izan. 1959an, Kuban, ez nukeen hori hain gordin, hain anker esango.

Ene begien aurrean latinezko gramatika ipini eta musa, musae, eta dominus, domini eta ego sum, tu es delakoak memorizatzen hasi nintzenean ez nintzen ergela, ez azkarregia ere; sinple esanda, ohartu nintzen ikastea ez nuela gogoko, eta ikasle txarra izango nintzela beti. Estudiante txarra, baina irakurle ona, ipuin bat, poesia bat, nobela bat eskuratzen nuenean. "Humanitateak" deitzen ziren haiekin bost urte; gero, hamabostekin, `nobiziatua´, filosofiako hiru urterekin jarraituz; eta amaitzeko, teologiako lau urteak. Hamahiru urte, denera. Gerra Zibil osteko eta Bigarren Munduko Gerra urteak, eta Gerra Zibilaren eta Munduko Gerraren ondokoak. Urte arras zailak. Gose urteak, isolamendu, barre-iduri faltsuenak, hexur eta axalen ametsenak, gorroto gorde eta isilenak, beldur lurperatuenak.

Francok gorrotatu eta jazarri egiten zuen euskal usaineko zen oro, hizkuntza, usadio eta ohiturak, separatismoarekin identifikatzen baitzuen. Frantziskotar askok, beren aldetik, ez zuten ezkutatzen euren sentimendua: euskaldun zen ororen, geure ohitura, usadioen, hizkuntzaren aldekoa. Politikatik urrun mantentzen zitzaigun. Baina kolore bateko eta besteko, jatorririk eta norakorik gabeko liburuak filtratzen ziren, eta mahaipetik korritzen zuten eskutik eskura. Futbolaz, pilotaz, txirrindularitzaz, politikaren ordezko kirolaz hitz egin genezakeen. Gutxi-asko teologian formaturik amaitu genuen karrera eta erabat desinformaturik politikan eta gizarte gaietan: ez dakit zer dela-eta zihoazen otarra berean.

(Lagun batek kontatu zidan urteak geroago, teologia ikasten genueneko gure izpiritu-heziketaren arduradunari egunen batean galdegin omen ziola zergatik tratatzen ninduen gaizki, zergatik zen niganako hain mesfidati, zergatik ez zuen agertzen nireganako gutxieneko estimurik. Eta erantzuna: ez nintzela elizkoia, ez nuela serios hartzen neure izpiritu formakuntza. Joño! Eta zergatik ez zuen galbahea erabili orduantxe?)

Gutako bakoitzari zegokion destinoa banatzeko orduan, Erromara joan nendila proposatu zidaten, liturgia eta gregorianoa eta antzeko musikak ikastera. Belarriak karranka egin zidan. Eta gero, handik Arantzazura itzulita, korua zuzentzen bizi guztirako, ufa! Ez, ez, ezinezkoa. "Ez dago beste ezer?". "Bestela, Kubara!". Ongi da, bada Kubara. Hor hasi nintzen begiak irekitzen. Lau ginen, oskoletik atera berriak lauok, eta, soinean generamanarekin eta Arantzazuko Probintziako aitaren bedeinkapenarekin, ustekaberen baterako pezeta miserable bakar bat ere gabe, itsasontzi zaharraren sabelean sartu behar gintuzten, laster itsasoei agur esan eta desegitekoa zen ontzian.

Lauontzako biderako zerbait eskatzera joan nintzaion. "Billetean sartzen da dena", erantzun zidan. "Zerbait egin beharko dugu", xuxurlatu nion ene abitu santuari. Modua ere aurkitu nuen nire hatzetara erakartzeko –lapurtzea hitza itsusia da, ezta? – lau mila pezeta, azkenean ezertarako iritsi ez zirenak, eta akaburako berarekin betirako etsaitu nindutenak. Gehixeago ireki nituen (begiak) bidegabe tratatzen nindutela ikusi nuenean, ze bidaia abiatu aurretiko senideekin egoteko egun parea sikiera ere ukatu zitzaidan –ene kideak zazpi gozatu zituzten–, eta monastegitik ihes egin nuen egun batean, garesti atera lekidakeena. Bidaiak begihandiago egin ninduen. Baina, jainko jauna!, testamentu zaharreko zein haitzulotan bizi izanak ginen?

Eta Habana zapaldu osteko ordu gutxietara gau zohargian lez bi ilargi handi eta zuri gisa puztu zitzaizkidan begiak euskal folkloreko Ezpata-dantza dantzatzen erakutsi beharko nuela esan zidatenean, non eta Kubako Balet Nazionaleko Akademian, bai, (Alicia eta Alberto) Alonso familiarenean! Neronek bakarrik dakit zer gozatu nuen horrekin (alderantziz diotsut, eta abar). Eta norbaitek, irribarre artean, gaizki pentsatu nahi balu, argituko diot ez nituela hor galdu nire inozentzia eta birjintasuna.

Ene destinoa Kuban Miramarreko Bostgarren Abenidako San Antonio elizako organoa zen, baina beste bat aurreratu zitzaidan eta hark Santiago de Las Vegasko apaizgaitegian utzitako hutsunea betetzea egokitu zitzaigun. Etxeko nagusia nire dantza eskolak eta komentatu ohi nuen balet akademiako giroak arduratzen zuen eta, halako egun batez, futbol-zelaian gora eta behera paseatzeko deitu zidan; arriskuan zekusan ene arimaren salbamenaz hasi zitzaidan berbetan eta, deus ez, lagundu gura zidala. Noski, mutiko eta neska gaztetxoen artean mugitzen nintzenez, eta neskatiko hain erantziekin..., asko zaindu behar nintzen, blindatu.

Ama Sor Ezdakitzeini gomendatzeko aholkatu zidan, zein kongregaziotako sortzaile zen ere ez dakidanari, haren beatifikazioa martxan zenez bere miraria premiazkoa omen zela-eta, eta bederatziurrena egin niezaiola, eta... “Bai, jakina, arrazoi duzu, bai, bai, nola ez?”. Nigan zerbait gaizki bazebilen, hobetu beharrez, okertu egin zuen. Lelokeriak, eta zuzendaritza espirituala deitzen diote horri!

Latinera eta espainierazko irakasle. Berdin-berdin zatekeen geografia eta historia eman balidate. Zientziak, ez. Ez matematika ez fisika ez eta kimika. Ez nintzen jaio zientzietarako eta lehenbiziko egunean egin nuen planto. Benetan, ez nenkien irakasten. Lehen urtean konturatu nintzen: sekula ez nintzen maisu ona izango. Diziplina gabea eta pazientzia gutxikoa izaki! Baina ez ziren batere txarrak izan Santiago de las Vegaseko lau urteak. Alderantziz. Nire eskolekin konplitu, irakurtzeko astia izan eta gai eta egile arteko aukera zabala nuen.

Futboleko baloiak ez ziren trapuzkoak eta piszina handia zen eta bere ura freskoa. Oso ondo jaten genuen. Landan sartutako lursaileko etxean bizi ginen. Noizbehinka nekazaritzarekin lotutako lanetan esku-hartzen nuen; adibidez, harria hogeita hamar oineko sakoneran zulatzea lurpeko ur korrontera iritsi arte. Hirugarren urtean apaizgaitegi-inguruetako parrokietan misio-kanpainan sorosle moduan parte hartu behar izan nuen; eta horrela euretakoa banintz legez onartu ninduten familiak ezagutu nituen. Mende erdi geroago, zutik diraute eta oso maiteak ditut horietako bi lagun. Misiolari hastapen horietatik Acción Católicako talde bi artatzeko konpromisoak sortu ziren.

Ohartu gabe sikiera, irakurketak eta kaleko harremanak erakutsi zidaten apurka-apurka ikasketek irakatsi ez zidatena: bizi gineneko mundua. Lehenago, bekatuzko mundua fededun bihurtzea zen kontua. Orain hartan, injustizia eta pobrezia bekatuetarik larrienak zirela ikusten nuen. Munduari itxitako elizgizonon begiratokitik ezin genituen aintzat hartu bere neurri egokian, ez eta esanguran, Agramanteren Zelai konplexu eta nahasian talka egiten zuten indarrak: legeak, sozialismoa, eskuinak, Mosku, Erroma, Washington, dinamita, bake-konferentziak... Lehendabizi kilima batzuk izan ziren, gero urradurak eta azkenean justizia sozialean “egia eternaletan” baino gehiago pentsatzen amaitu nuen. Justu-justu oso, erabat heldugabe dena, gaizki prestatutako txerrijana bezala. Baina gustatu zitzaidan, zaletu egin nintzen.

Casablancako parrokiara destinatua izan aurretik ikusia nuen ja, tximistaren argitan legez, ene bokazioaren etxolaren suzko erreketa. Etorri bezala joan zen mamu-ikusmena. Konpondu gabeko

kezka zaharren eta bat-bateko sukarraren ondorio. Ostruken modura begiak itxi nituen berriro. Ez nintzen arduratu nire lehenengo zalantza erlijioso eta teologikoek ene fedea arriskuan jarriko bazuten ere. Nire kautarako oso normalak iruditu zitzaizkidan, anormala galderak ez egitea eta ez kezkatzea zela.

Libururen batean leitua edo norbaiti entzuna oroitu nuen, zalantzatik eratorritako egia izan litekeela benetan finkatutako egia. Eta antzerakoa pentsatu nuen neure bizitza afektiboaren lurpean harrak mugitzen sentitu nituenean. Berezko izena zuten. Ba!, San Antonio Abad, Asisko San Frantzisko eta beste santu batzuk gogoratu nituen. Beroiek tentatuak izan baziren, ez zen harritzekoa ni ere hala izatea, ezta?

“Ez dut uste prestaturik nagoenik parrokoaren erantzukizuna betetzeko, ez dut batere esperientziarik”, erantzun nion Lurraldeko Ordezkariari, deitu eta esan zidanean bere intentzioa: Habana Zaharrera lekualdatu behar nuen, handik Casablancako parrokia eramateko. Egokiena horixe zela hausnartu nuelako esan nion, umiltasunez eta prestutasun osoz aldi berean. “Ez zaitez kezkatu, parrokia oso txikia da eta ikusiko duzu nola hartuko diozun neurria laster”.

Badira alde batzuk tamainak baino garrantzitsuagoak direnak. Eta badira abilidadeak eta gaitasunak inprobisatzen ez direnak, edo tupustean herren egin eta begi-oker begiratu dezaketenak bat-batean hartuz gero. Banekien, baina sasi-umildadearen azpitik kontent nintzen niregan pentsatu zutelako. Horretarako eta gehiagorako prest nintzelakoan nengoen. Eta urriko hilabeteko egun on batean, habanar portuko 1. zenbakiko moila zapaldu nuenetik lau urte justu-justura, badiaren bestaldeko moila berorren parez pare geratzen den auzunean aurkeztu ninduten, Buen Consejoko frantziskotar lekaimeen komunitateari eta bost laguni, eskuko bost hatzak legez, Casablancako eliza parrokiaren benetako eskuineko esku zirenei.

Laster ikusiko nuen casablancar eliztarrekin nituen afinitateak gutxi eta eskasak zirena eta nekez hobetuko zirela. Eta populazioaren gehiengoarekin, oso urriak. Casablancako jendea xumea, adeitsua, onbera zen, baina erreserbatua eta ia batere ez apaiz edo eliza zale. Pobreak eta jakituria gutxikoak ziren gehienbat, ongi hezitako klase ertainekoak baino. Katolikoak, sakonki katolikoak, urtean birritan bakarrik: Ostiral Santuko arratsaldean, Kristo Gurutziltzatuaren eta bere Ama Doloretakoaren prozesioan, eta uztailak 16ko Karmengo Amabirjinaren, euren zaindariaren, segizioan. Buruan kapelua estu eta ezpainak betitabako. Ohitu nintzen ez gelditzen inor agurtzeko eta ez inorekin hitz egiteko lantxatik elizarainoko bidean eta elizatik lantxarainokoan. Beraiek ere ez ninduten agurtzen. `Adio, adio´, gurutzatzen ginenean, nahikoa baino gehiago.

Ohizko eliztarrak, iganderoko mezakoak, parrokia-eskolako umeen gurasoak, hurbilagoak ziren, ez asko ere. Euren fedea garatu gabea zen, sineskeriez blaitua. ACC edo Acción Católica Cubana elkartearen lau adarretakoren batean laiko konprometituen koadroen formaziorako izena eman zutenek, berriz, perspektiba nahikoa onak izateko itxurak zituzten epe luzera gehienbat; formatzeko desioa piztu nien, konplexurik gabeko fede baten testigantza ematekoa, parrokia-komunitatea biziberritzekoa. Zailagoa egiten zitzaidan haiengan liburu on bat irakurtzeko gogoa piztea.

Maila bateko elkarrizketa dozena erdi pasatxo militante laikoekin soilik eduki nezakeen. Eskukada bat lagunek bakarrik zuten ene adiskidetasun eta konfiantza. Gutxi eta jeloskor grinak ukituak. Kontuz ibili nintzen, ez erakusteko inorekin gogokoago nenbilela. Denboraldi batean, ze edozein modutara gogokoagotasun baten sarean erori nintzen, egun batetik bestera handituz joan zena eta, azkenerako, gogokoena baino zerbait gehiago. Maila eta gradu gorenera igotako

adiskidetasuna. Hutsa, hiru urtetan hiru etxe zapaldu nituen. Behin, eta ez gehiago, deitu ninduten hiltzear zen gaixo baten albora. Ehorztetxerik ere ez zen Casablancan. Dirudienez, oso larri, hiltzekotan jartzen zirenean kanpora eramaten zituzten gaixoak.

Sekula ez nien behar besteko arretarik ipini ene arazoei. Neure bizkarrean hartzen nituen egozten zizkidaten zereginak, egokiro artatuko ez nituela jakinda ere, lehenik JOC edo Juventud Obrera Católicako emakumeen Elizbarrutiko Kontseilua eta geroago JAC edo Juventud Acción Católicaren gizonezkoen Elizbarrutiko Kontseilua. Konpromiso berrien eta arreta gehiago eskatzen zutenen biderketak ez zidan ez burutik ez bihotzetik kendu goikoa partean, erdi-erdi aldean eta beheraino sortzen ari zitzaidan zurrunbiloa.

Oinarrizko arazoa bokazioa nuen. Egunetik egunera geroz eta konbentzituago nengoen sekula ez nuela ukan, sekula ez nintzen deitua izan ez erlijio bizitzara ez apaizaren egitekora. Ez, ez nuen galdu edota abandonatu. Iragana behatuz, aurreiritzi eta grinarik gabe aztertuz, bideko zeinu guztiek esaten zidaten hasieratik bukaerara beste batzuk izan zirela, gurasoengandik hasita, bokazioa eduki, bizi eta txertatu zidatenak deiaren ideia.

Eta ordun bi bide bakarrik geratzen ziren: atzera egin edota bokazioaren suzedaneo bat asmatu, hiru botodun erlijio-gizon banintz bezala, aldareari, pulpituari eta kofesalekuari lotutako abadearen gisara bizitzen ahalegintzeko. Lehenbizikoa ez, ezinezkoa zen, kolpea ezingo zuten jasan, ez aitak ez amak, nire irteerak hilko zituen eta nola geratu behar nintzen nagusien eta kideen iritzien aurrean, "zer pentsatu eta esango zuten nitaz?". Mila aldiz ergela eta koldarra. Eta inori deus esan gabe, inori ene porrota aitortu gabe, lepoan hartu ta segi aurrera.

Fedearen lorategian, erregadio ur eskasia eta galdera eta duda-muda uholdeak. Casablancako hirugarren urterako, neure fedea urratzen eta txirtxilatzen hasitako bandera zen. Eliza instituzio gisara, bere jatorriak, historia, Vatikanoan metatu eta usteldutako boterea, hierarkia, ebanjelioarekin hain kontrajarritako bizitza estiloak... gero eta gutxiago sinesten nuen berarengan. Ukatu gabe, haatik, santu eta madonnen saldoa eta gorputz-arimak emandako abade, apezpiku, erlijio andre-gizon eta laiko amaigabeen eredua; lagun hurkoarenganako maitasunaren aldeko kausa nobleenak; gehi zibilizazioari, kulturari eta arteei elizaren barrutik eginiko ekarpena.

Galdera eta ezbai gehiago graziaren, bekatuaren eta sakramentuei buruzko doktrinen gainean. Gorroto nuen, esaterako, aitorlekuan jarri eta absoluzioaren formula aipatzea, Ego te absolvo delakoa. Eta ezin sinestekoak infernua, zerua, purgatorioa eta linboa, kontatu zitzaigun legetxe. Ez nuen ezer ukatzen, baina dudak oihulari eta probokagarri paseatzen ziren nire kaleetatik. Teologia, dogmak, teologoek asmatu dituzte euren tailerretan, artisautza miresgarria, baina asmatua. Jaungoikoa, Nazareteko Jesus eta Maria txit Santuak ukiezin jarraitzen zuten. Momentuz. Esentzia zena, nukleoa, garrantzitsuena, ezinbestekoa.

Sentimenduak ere krisian sartu ziren. Saihestezina, gertatu beharra zeukan. Ez dira isolaturik bizi, osotasun baten zati dira eta osotasuna zegoen krisian. Emakume batez maitemindu eta komentzitu nintzen emakumezkoa eta gizonezkoa osagarriak garela. Zirimolak eta haizeteak eta urraketak. Ibaiaren ubidea lehortzen utzi izanak sufriarazten digu. Geroago euri eta ur berriak etorri ziren ibilguan korritu eta kantatzera.

Casablancako parroko izan nintzen hiru urtez. Lehen bietan Batista zegoen boterean eta Fidel bere jendearekin Sierra Maestran. Kuba osoak bizi izan zituen urte bi horiek estu eta larri, esaten den bezalaxe. Casablancan pultsu oso bereziarekin, Cabañako kanpamendu militarrak casablancar

populazioaren gainean zuen eragina medio. Familia ugari militar eta poliziez osaturik zeuden, desaktibatuak asko, jardunean oraindik beste asko. Horrek, kontuz hitz egitera eta ekitera eramaten ninduen, ez oso gustura. Denen iritziak errespetatu behar nituen. Eta horretarako ezkutuan, isilka gorde behar nituen neure ideia eta zaletasun politikoak.

Gaitza egiten zitzaidan, zeren eta badiaren bestaldean lasai berba egin nezakeen, trabarik eta itxurakeriarik gabe mintzo nintzen beste eszenategietan, Acción Católicako Elizbarrutiko Kontseiluetan bereziki, kontsiliarioa nintzenez. Parte nintzeneko komunitatean ere komentatzen ziren iturri batetik edo bestetik iristen ziren berriak. Sinpatiak gehienbat errebeldeen aldekoak ziren, euskaldunon gehienok –Kubako frantziskotar gehienak euskal jatorrikoak ginen– diktadura frankistaren arantza iltzatua generamalako, eta antzagatik gorroto genuelako diktadura oro.

Hortaz, ez zen arraroa San Franciscoko komentuan eta Habanako beste frantziskotarren etxeetan gordetzea euren ideiengatik edo gobernuaren kontrako ekintzengatik pertsegituak harrapatuak, atxilotuak, kartzelatuak, torturatuak eta akabatuak izateko arriskuan baitzebiltzan. José Antonio Echeverría eta Carbó Serviá, Juventud Estudiantil eta Resistencia Cívicako liderrak (Batistaren aurkako mugimendu iraultzailekoak biak), bien-ala-biak Presidentearen Jauregiko asaltoa San Franciscoko komentuan zeudela antolatu zuten eta bertatik atera ziren bataila odoltsura, Echeverría hiltzeko eta Serviá bizirik irteteko, baina handik gutxira segada batean erortzeko.

Poliziak bazekien egia, gauza zaharra zelako eta joera batekoek zein kontrakoek ateratzen baitzioten horri etekina azpian eta kontra egotea tokatzen zitzaienean. Asilo politikoaren modukoa zen. Ez nuen eta, jakina, ezin nuen izan kasu berezi bakoitzari buruzko informaziorik eduki. Behin batean, diktadorearen ihesaren ia aurretik, Acción Católicako buruzagietako bat hurbildu zitzaidan, zera esateko: poliziako ofizial bat, bere sendiaren laguna berau, bere etxean San Franciscoko komentua miatzeko aukeraz mintzatu zela, zeren bertan zenbait iraultzaile ezkutatzen zireneko susmoa baitzuten. Gazteaz fio nintzen eta tranparen bat jartzen ari ez zitzaigula ziurtatu nuen.

Gau hartan, etxera iristean, esan zidatenaren jakinaren gainean ipini nuen ene nagusia. Bi iraultzaileekin bildu eta segituan komentutik ateratzea erabaki zuten. Haiek Santiago de las Vegasera eramateko pronto izango al nintzen galdegin zidan nagusiak, ez apaizgaitegira, Gogo-jardunen Etxera baizik. Abentura-izpiritu batek hartzen ninduen batzuetan, eta gau hura horietako bat izan zen. Gaueko hamarretan irten ginen, destino onera heldu ala bidean eror gintezkeenaren jakitun. Heldu ginen. Gero suertatu zen ez zela miatu komentua.

Ikazkin astakirtenaren fedea nion Fidel Castrori eta bere jendeari. Haien ideia eta proiektu iraultzaileak garbiak zirela sinesten nuen, Kubako egunsentiak hobeto bizitzea ekarriko zuela mendialdetik lautadara jaitsi eta euren idei berriek hiriak eta herriak sutan jarriko zituztenean. Uste nuen mendialdeko gerrillariak hiri erresistentziakoekin batu eta fronte komun bakarra osatuko zutela, justizia eta bake egunak zetozela. Eliza ofiziala ez nuen ikusten ez partaide ez alde lan horretan; bai, ordea, katoliko laikoak. Banekien euren artean lider ongi formatuak bazirena, ideiak, ilusioak eta dena baldintza gabe entregatzeko gogoarekin. Eguna iristeko irrikaz nintzen.

# BI

Harri haiz guztiz
San Carlos de La Cabañako Gaztelu hori.
Harri kanpotik eta harri barrutik,
harria lur tormentatuaren gainean,
harria zeru sakon eta ilunaren pean.
Harria duk hire sustrai,
harria  hire odol eta denbora,
harria hire espazioa,
harria hire esna aldia eta loa.
Harria hire euriaren ura,
Harria hire argia eta haizea.
Harria hire ahotsak,
Harria hire sentimenduak.
Harri arnasten eta usaintzen dudan
hire murruen arteko airea.
Harria entzuten dudan garrasia,
harri heure aiztoak eta sentitzen dudan mina.
Harria gure negar mingotsa,
harria gure isiltasuna.
Zutitu hadi goiz honetan,
ene oroimen harrizkoen katakunba,
zutitu hadi, Cabañako harria,
hire hildakoak iragaten ikusteko.

Eta 1959ko urtarrilaren 1a iritsi zen. Hirugarren aldiz jaio berria zen Kuba. Jai handia lehertu zen. “Xanpaina zerbitzatu ezazu, kamarero, hau ospatzera goaz”. Ardo apardun botilak ireki eta parrastadaka korritu zuen. Baina desestaltze apoteosikoena eta eferbeszentzia mozkorgarriena kubatar herriaren arimarena izan zen.

Batzuk horretarako borrokatu zirelako eta ospa zezaketen eguna iritsia zela ikusi zutelako; besteak poza eta garra kutsatu eta bolbora gisa irrigatu zirelako. Mundu guztiak kalera salto egin eta oihukatu, kantatu eta dantzatu zuten deskriba ezinezko jaiera iraultzailea eta bibaka ekin zioten Fidel Castrori, uztailaren 26ari, armada erreboltariari, “bizardunei”, beren eskuetan fusilak eta arrosarioak lepoan zituzten haiei… Egunak eta asteak eta hilabeteak iraun zuen, harik eta, ahituta, kubatar herriaren arima baretu eta zin egin zion arte ordenu berriari: Iraultzari.

Boterea hartzeko borrokaren periploa amaitua zen. Ihes egina sarjentu diktadorea, sasikumea, gorrotatua, bere ejertzitoa lur, itsaso eta airez derrotatua, Fidel Castro Kubako jabe bakarra bihurtzen zen.

Hirugarrenez jaiotzen zen Kuba. Bostehun urte lehenago, gutxixeago, berdin dio, Espainiako kolonia gisara sortu zen. Geografia pribilegiatu bat eta berarengan herri bat eraikitzen eta berezko kultura, ekonomia bat sortzen joango zena, jaberik gabekoa izateko ametsak. Hemeretzigarren mendeko 98an eta hogeigarreneko 02an independentzia partzial batera jaio zen Espainiatik burujabetzean eta gero Estatu Batuetatik, Puerto Rico eta Filipinak legez, kolonia huts gura zituenetik. Partziala, ze interes politikoen mende erori baitzen, era txarrean astindu zutenak ia hirurogei urtetan. Hauteskunde libreak eta hiru kolpe militarrek etendako gobernu demokratikoak, jakinekoak diren diktadura aroekin mende erdi pasatxoan: ez da benetan independentzia oso gustagarria. Orain justiziaren eguzkia benaz zabaltzen zen, pobrezia eta ezjakintasuna erauziko ziren, bakea estreinatzen zen, bizitza independente eta duinerantz jaiotzen zen behin betirako Kuba.

Justua zen ospatzea. Bozkario orokorrera batu nintzen inork bultzatu beharrik izan gabe. Oihu eta kantu egin nuen ahotsa joan arte, eta sukarrezko keinuak eginez jarraitu nuen jendetzarekin nahastuta kale eta plazetatik, errendituriк erori nintzen bitarte. Hori ostegun batez izan zen. Ostiral eta larunbatean Escambrayko lehen bizardunak agertu zirenean, Santa Claran eta Matanzasen errekisatutako jeepen eta kamioi militarren gainetan, Camilo Cienfuegos eta Ché Guevararen konpainian, Habanak super-heroien antzera hartu zituen ziklope mitologikoen pare bailiran, Kuba itsasoaren hondotik erreskatatu balute bezala.

Desfile militarrik ez zen izan. Ez eta diskurtsorik ere. Diskurtsoen gizona Fidel zen eta honek abiatua zuen Kubako Santiagon historiako garaipen-martxa itzel eta zaratatsuena, Galiatik Erromarainoko itzuleran Julio Zesarrek eginikoa baino handiagoa, hamar egun airean, Columbiako kanpamendu militarrean lur hartu arteko atsedenik gabe. Eta Habanan festak etenik eta murrizketarik gabe jarraitu zuen, lider gorena, garaiezina heldu zen arte.

Igandean, hilak 4, Casablancan errealitate desberdin batekin topatu nintzen. Itxaroten nuen, hala izan behar zuen. Pozez eta nekez lehertutako aurpegiak ikusi nituen, beste batzuk kezkaz eta beldurrez kargatuak, eta ikusi ez nituenaz eta sekula gehiago ikusiko ez nituenaz ere hartu nituen oharrak. Casablancako bizitzak gertutik ezagutu zuen Cabañako eragina, bazirudien kanpamendu militarraren pisua bere sorbaldan zeramala. Zanpatzen zuen zama. Eliztarrak ziren ez familia gutxik zituzten euren baitan militarrak edo polizia aktiboak edota erretiratuak. Ezin nuen espero poztuko zirenik ikusirik euren parrokoa identifikaturik antimilitarista erradikal gisara definitzen zen

iraultzarekin, eta justizia eredugarriaren aplikazioa iragartzen zuenarekin diktadura, aldez edo moldez, defendatu zuten guztiekiko eta, defentsa horren funtzioan, odol gertaeretan benetan oso sarritan, eta azken urteetan oso krudelki, esku-hartzea izan zutenekiko.

Horren kontziente nintzen eta kezkatzen ninduen. Parroko legez, era eta neurri berean zor nintzaien denei, bereizketarik eta lehentasunik gabe, edota inolako klaseko errefusa barik. Abadeongandik itxaroten zen alderdi edo mugimendu politikoetakorik ez izatea, baina benetan antinaturala zena, guk ideien gabezia edo politika guztizkorik ez izatea zen. Dilema bat zen. Ene buruari esan niona, oso serioski gainera: “Javier, burua erne, ahoa itxita eta berunezko oinak”.

Cabañak arazo gehigarri bat planteatzen zidan, gustukoa izan ala ez, aurre egin beharko niona. San Carlos de La Cabañako Gaztelua Casablancako parrokiaren eskumenean geratzen zen. Kanpamendu militarreko nagusi berriengandik ez nuen espero neure zerbitzuak eskatuko zizkidatenik, ez aurrekoek bezainbat. Lehen igandean bertan, goizeko hamarretan jasotzen ninduen jeepa bidaltzeari laga zioten; hark igotzen ninduen Santa Bárbarako kaperan meza ematera.

Egunen batean igo beharko nuen komandante berria agurtzera, eta zurrumurruek zioten izan zitekeela, dagoeneko ez bazen, Ernesto Ché Guevara argentinar medikua. Mezaren ohitura azalduko nion eta bere esanetara ipiniko nintzen. Baina beste asunto bat ere bazen, kartzelakoa, Cabañako kartzela guztiz entzutetsuarena. Presoak ere nire parrokianoak ziren. Nik nekiela, Casablancako parrokiak inoiz ez zuen bisitatu presondegia  eta bere zerbitzuak eskaini bertako okupatzaileei. Baimena edo bisita-pasea eskatua neukan abade edo kaperau nintzenez, Fulgencio Batistaren koinatua gotorlekuko komandante zenean, eta ukatu egin zitzaidan. Berriro eskatu beharko nuen. Nire buruari esaten nion, “Ezezkoa errepikatuko da segur aski. Kontrako kasuan... hobe ez pentsatzea, izan behar dena izango duk”. Kanpaiak ordara jotzen zuten jada. “Ikusiko diagu”.

Momentuz, ene oinetakoetan sartutako oinekin ibiliko nintzen, ez nintzen inoren gurdira igoko, ez garaile ez garaituenera. Zuhurra izanen nintzen, iraultzaren garaipenaren lehen hiru egunetan baino zuhurragoa. Gau hartan, edo biharamunean edota hurrengoan, memoriaren lainoan galdu zaidan uneren batean, ene buruan ideia bat loratu eta pixkanaka sartu zen bertan, zeharo bereganatzen ninduela: ebanjelioak neutrala izatea debekatzen zidan, behartua, gaixoa, jazarria, kartzelatua lehenestera, eta harentzat gordetzea nire alderdirik, aritzerik, zerbitzurik hoberena.

Autentikotasun eta eskuzabaltasun hori alboratzen saiatu nintzen. Noiz ikusi nuen nik ene barnean halako tipoko ebanjelioarekiko obedientzia? Barregarria zen. Gauza bat da neure zereginak betetzea eta bestea mugak gainditzea komediante merkearen, pailazoaren papertxoekin.

Kalea txutxu-mutxuen eltze irakindegia zen. Telebistako kanalak aurretiko ordutegi eta programei muzin egin zieten, estudioetan bezala kaleetan bat-bateko zalaparta perfektua. Irratian berdin. Egunkariak kontrolik gabeko berrien sumendiak ziruditen, laba sutan. Orok izan nahi zuten lehendabizikoak Fidelen martxa eta bere diskurtsoak transmititzeko orduan. Karabana mantso zebilen, herri guztietan geratzen zen, bidegurutze bakoitzean, han non barnealdetik etorritako jendeak zain zeuden buruzagia txalotzeko eta Fidelek hitz eta pitz eta hitz.

“Baina zer da hau?: gizon honen ahots-kordak amaierarik ez dute, erresistentzia mirari bat...!”. Ez zen betetzen entenitzaile onari nahikoa zaizkiola hitz gutxi. Ulertzaile on eta txarrak, berdin bustitzen ziren berbaldi katarata  galga gabearen pean. Fidelek ez zuen betarik ematen pentsatzeko. Berea euri uholdea zen. Edo igeri, edota ito egiten zara.

Halere, elkar ulertzeko zenbait klabe bereiz zitezkeen. Puntu jakin batzuetan tematzeak, itxaron zitekeenaren ikur edo iragarpen bihurtzen zituzten. Ideien hiru sorta edo mataza, ekintza-ardatz edota arranke-puntu izatera etorriko zirenak laster. Nigatik diot, ikusi uste izan nuena, atentzioa eman zidana. Lehenik: promesak eta itxaropenak. Iraultza, historikoki, herentzia gabekoentzat zen, behartsuentzat. Ziur egon zitezkeen beren egarria asea, euren irritsak beteak, lurra beraientzat izango zena, ahantziak izatetik pribilegiatuak izatera pasako ziren. Ebanjelioko dohatasuna zirudien kasik. "Eta ze tamainakoa izango da `kasik´ hori?".

Bigarrenik: lagunak eta etsaiak. Iraultza pasioa, maitasuna, guztiz ematea da. Ez du jende epelik, axolagaberik nahi, txapel batekin bi buru tapatzen dituena, komeni zaionaren arabera dabilena. Edo berarekin ala bere aurka. Hori bai, arerioak ziur jakin behar zuen jazarria eta deuseztatua izango zela. Ortzemugan jada etsai nagusia nabarmentzen hasia zen, eskenara atera edota bertan ipinia izango zena laster: iparraldeko borreroa, gaitz ororen iturria, Estatu Batuak.

Hirugarrenik: justizia. Iraultza justizia da. Zigor gisa edo sari moduan. Segun eta noren gainean erortzen den edo-eta zein helburu duen, iraultzak bere eskumako eskuan daraman ezpata izango da justizia. Nekazaritza-erreformaren, hezkuntzaren, iraultza-auzitegien legeak sortzean eta horiek exekutatzean, justizia izanen da inspirazio iturri.

Izutu nahi zuenak sobera izango zituen lur-sailak, korrika egiteko. Dena beltz ikusi gura zuenari pintura beltz poteak oparitzen zitzaizkion. Analisi eta zuzenketa bisturia erabili gura zuenak haragia soberan zuen bere dohainak entseatzeko. Fidel Castroren hitzak denetarako ematen zuten. Hasieran konfiantza izan nuen, iraultza zuzen ibiliko zela eta bere eskuetara eroritako botere osoaz ez zuela abusatuko espero izan nuen.

# HIRU

Txaluparen zain nagoen honetan,
murrua dudala euskarri,
itsasertzera begiratzen dut, han non
Casablanca bizi den eta lo egiten duen.
Han ezkerretara,
arroken kontra hausten diren itsas uhinen
gainean Reyes del Morroko gaztelua eta faroa,
ozeanoari aurpegi ematen.
Aurrean,
San Carlos de la Cabañako gotorlekua
eta Habanako Kristoaren monumentua,
guri, hiriari begira.
Kubatar historiaren
sinbolo eta sinopsia.
Erabateko putada.
Konkisten, odolaren historia,
anbizioena, gorrotoena eta injustiziena
eta zementuzko Kristo bat
bedeinkatu eta kristautuko duena.
Eta dohatasunak, egia, justizia, maitasuna,
hezur-haragizko Kristok erakutsi zizkigunak?
Horrela bostehun urtez  geroztik.
Hola orain 100 urte.
Hala duela berrogeita hamar urte…
Nola atzo, gaur hola.
Nazka ematen du.
Noiz arte, Jauna?

Urtarrilaren seia, Erregeen eguna, errege mago santuak. Ekialdetik irten eta opariz beterik zetozen. Meltxor, Gaspar eta Baltasar ziren euren izenak. Ala Ché, Camilo eta Fidel? Nork jarri zalantzan urte hartan anitz, zenbatezinak izango zirenik Kuban pentsatu zutenak bai haiek eta bai hauek alegorien hondarretan ibiliko zirena, seiek segitzen zutela izar berbera eta seiek salbamendua iragartzen zutela. Eta ze opari puska kubatar herriari ekarri ziotena urte hartan, iraultza…

Treguarik gabe ospatzen jarraitzen genuen. “Belengo ezkilak” eta gabon kantak beste himno eta beste salbak jotzeekin nahasten ziren. Urtebete geroago ezberdin izanen zen, aurpegiak mozorro gabe eta hitz-jokorik gabe hitzak jada, errege magoak soberan zeudela, zertarako Fidel baino errege mago gehiago? Baina hori urrun zegoen oraindik ilbeltzeko sei hartan, etorkizuneko itzalen misterioari zegokion. Batere ez ninduen harrituko sorgin baten lan eta magiari esker bere maukatik aterako balitz grabaketa bat: neuk intsinuatu nuena egun bereko sermoian, Jainkoaren graziak egin ziezagukeen eta egin zigun errege oparirik bikainena zela iraultza.

Eguna altxatu eta goizero legez txalupen moilara zuzendu nintzen. Cabaña aurrean, lehorra beti bezala: “Jasoko ote naute gaur, meza ematera joan nadin? Zertan ote dira Caridad eta bere sendia, hor biziko al dira oraindik? Nolakoa ote da Cabaña hori barrutik?”. Sekula sartu gabea nintzen barruti harresituan. Ezbairik barik zahar usaina izanen zuen, euriz elikatutako eta eguzkitan ondutako harri zaharrena, gaur zein jabe duten eta bihar zein izango ez direnen ez-jakitun, beren buruari eta asentatzen direneko haitzei soilik fidel direnak. “A ze lezioa, jaunak, a ze lezioa! Kanala bare dago, itsasoak diosala, fereka, brisaren hatzak leunak, freskoak. Errege egun polita izango da gaurkoa”. Oparia zerbitzatua dago.

Aldarera igo nintzenean oraindino ez nuen pentsatu zertan emanen nuen eguna, kalerik kale ibili, bisita bat, etxeko lasaitasuna, liburu bat, pelikula bat akaso arratsean. Eta tupustean, ez dio axola sermoiaren aurretik ala ostetik, Meltxor erregearen morroietako batek iradoki balit bezala, ideia bat: “Cabañakoak jaisten ez badira, zergatik ez haiz igotzen hi, ea zer gertatzen den?; edo-eta hobe, zergatik ez haiz inguratzen komandantearen egoitzara eta Ché Guevara ikustea eskatzen? Hartuko al nau? —Kontzentrazioa zaildu zitzaidan—. Nolakoa ote da komandantea bera? Begietara begiratzen lagako al dik? Zein marxista mota ote bera? Berba egin ala eztabaidan egingo diagu?”.

Ohi baino gehiago itxaron nuen. Jeep militarra ez zen pasa ni jasotzera. “Bada, gaur ere mezarik gabe geratuko ziren”. Eguerdi aldera atera nintzen, baina txalupetara jo ordez, aldapa gora egin nuen arroketan landutako errepidetik, gotorlekuko atetzarraren aldera. Negu tropikaleko giro atsegina, eguzkia eta itsasoak opaturiko brisara.

Banoa txartelik eta ohiko esaldi eginik gabe neure burua aurkeztera armada erreboltariko milizianoen, buruzagitzako ofizialarengana. “Egunon, esango diet \`altoa´ ematen didatenean: Guevara komandantea agurtzera nator, posible ote nuke? Seguruena galdetuko didatela: Eta nor zara zu? Zertaz eta zertarako hitz egin gura duzu komandantearekin?”.

—Bada bai, apuntatu hor, urlia da nire izena eta hemengo apaiz parrokoa naiz, Casablancakoa, hurbiletik ikusi nahi dut Ché, eskua estutu eta eskerrak eman gura dizkiot, ahal bada—, diot.

Ezer ez. Agidanez eguneko protokoloa zen etorritako guztiei aurrera eginaraztea, izenik ikertu gabe, arma zuri edo su-armarik bagenekarren galdetu barik, begien koloreetan edota bekainen gortinapeko bekozkoan kuxkuxeatu gabe.

—Badakizu nora zoazen?

—Bere egoitzara.

—Baina non den badakizu?

—Bai, ezkerretara, behin goi hartatik.

—Ba, ongi doakizula.

—Eskerrik asko.

Habanako Kristoaren oinetatik pasatu nintzen, urrundik ederki ikusten den eta hurbiletik bere aurpegia begiratzeko lepoa dezente bortxatu behar den lekutik; argentinarrari graziarik ez dio egingo, ez asko ez gutxi, hain gainean edukitzea. Milizianoak pasatzen ziren, fusila bandoleran, arrosario eta dominen erakusgaiak, oihuka eta keinuka berbetan. Lantxara, Habanara, edatera, dibertitzera, garaipena ospatzera.

—Arrosario bat ez didazu emango, e, abade?!

—Dauzkaanekin ez al duk nahikoa?”

—Baina zureetako bat falta zait.

—Beste batean.

Iraganean komandantearen egoitzan izana nintzen behin, azken aurrekoak okupatzen zuenean, Batistaren koinatuak, bataio bat zela medio eta minutu batzuetan elkarrizketatu ginen. Bataioagatik hirurehun peso zituen kartazaltxoa eman zidan: “Kontxo! Ze oparoa, parte txarreko dirua...!”, pentsatu nuen, “hatzak erre baino lehen gastatu behar dut”, eta Lawtongo klaratarrei pasatu nien, parrokiarako armonium eder baten truke. Berari beste emakida bat eskatzean, Cabañako harresien barrutiko kartzelan zeuden presoak artatzeko bere baimena, alegia:

—Nola? Presoak esan duzu? Ez, oker zaude, hemen militarrak baizik ez daude.

—Bada militar horietako batzuk esanda naukate presoak ere badaudela, eta bakarren batean presoren batek, militar berorien bitartez iritsarazi didate, bera eta beste guztiak nik bisitatzea desio lukeela.

—Ez ba, gaizki ulertu zenuen, esaten didazuna amestu zenuen.

Egiatan inoiz ez nuen hurbiltzerik izan ziega ospetsu, zahar horietara, ehunka urteetakoak, urrundik etorritako konkistatzaileen garaietakoak, sarraski askoren eta sezesio gerletako heriotza ugariren lekukoak; eta gerokoak gero, Machadoren egunetakoak eta Batistaren lehen kuartelazokoak eta azken urteetakoak... Onak geundeke Cabañako harriek ikusi eta entzun duten guztia kontatuko baligute, dakiten guztia...!

Ez dut uste Cabaña eta Morroaren perimetro osoan dauden arbola handiak, itzala emateko bezainbestekoak, dozena bat ere izanen direnik. Horien erdiak komandantearen etxea inguratzen dute, eguzkiaren eta bizilagunen eta arrotzen ikusmiraren babesle dira. Leku baketsua da kanpamendu militarraren asalduraren erdian, hurbileneko zaratak ere urruti gelditzen dira. Hortik edo bestaldetik, lorategi koadroen artean, hamaka zintzilikatu bat egon behar du gerlaria etorri eta etzan dadin arte, zain. Ateraino inguratu naiz:

—Bada komandantea lanpetuta dago une honetan, zain geratu beharko zara, ez dut uste luzerako duenik, sartu eta eserlekua har ezazu.

Hain adeitsu ere, naturaltasunez eta xalotasunez, baina fusilaz ezertarako libratu gabe, eskuin eskua arman etengabe. Ohitura izango dute, ohera doazenean ere gainean eroatera eginak daude, beren kuttuna, emaztea bailitzan, ez nuke hala bizi nahi. Nekaturik dakusat. Bai, ohe bat zer den horren ideia lausoa badut, egunak daramatzat iskin batean botata soilik lo egiten dudala edo eseririk eta batzuetan zutik. Fusilak eusten diola? Ziur. Eguzkiak eta haizeak larrua belztu dion mutikoa. Arretaz so egiten diot. Maisu, liburu eta kaieren artean formatutako irizten diot.

Bat-batean atea ireki eta gizontxo pottolo bat ikusten dut irteten, gorria aurpegia, pausu zalantzatia, begiak galduak, estantzia gurutzatu eta eguerdiko argitan galtzen da.

—Konfiantzaz, padre, sar zaitezke, komandantea da, ez dizu deus egingo.

Hala animatzen nau milizianoak, aztoraturik eta dudatsu ikusten nauenean. Altxatu, banoa, sartuko naiz?

—Gaurkoa bezalako negozioak proposatzera datorkidan hurrengoan, kartzelan sartuko dut, lotsagabea, esplotatzailea, eta errematerako argentinarra, gibelandi alaena!

Oihuka ari da oraindio. Zutunik dago, mahai aldera okertuta, bi eskuak honen ertzaren gain, lokarriekin-edo egina bailuen lepoa, luzatuta, eskapuletatik atera nahi balu ere… Azpi-masailezurra desafiatzaile, ez oso bizar sarria, ile-latza, tentsioan ezpain ertzak, hortzadura agerian, begiak ernai, kalparreko ilea beltz, zaindu gabea, aurpegia haserre.

—Pendejuak! Usteko dute hemen ez dela ezer aldatu, iraultzarekin jostatu dezaketela, euren amarekin bai joango direla jolastera infernura…! A!, baina, padre!, zer egiten duzu hor atean geldirik? Barkatu, ez zaitut ikusi, pasa zaitez, aulkia hartu.

Oso gutxigatik ez naiz gatz-estatua bilakatu. “Nola egin liteke jauzi sumindura fierretik irribarrera hain kolpetik, labanaren aho hiltzailetik zetazko zapiko tonura, bildots mantsoa lepamozteko prest den hienatik halako atsegintasunez aureolatutako estanpara? Arraioa, a ze sorpresak gordetzen dizkigun Chék, benetan gutxien espero nuena zela horixe!”. Hiru pausu eman mahairantz, horren gainetik bostekoa eman, elkarrenak astindu ditugu, elkarri begira, barre-iduriz elkarri, eseri egiten naiz.

Elkarrizketa hastea zegokidan, nik eskatu nuen bisita, baina bera mintzatu zen ja jesartzeko gonbidatuz. Eta bera izan zen elkarrizketa informalean murgildu zena: nor nintzen ni, eta zerk nindekarren bere bulegora? Ezezagunen elkar probatze hitzak, urteetan ikusi gabe berraurkitzen diren aspaldiko bi lagunen tonuan, ordea.

—Suposatzen dut ez zarela etorri erregeetako opari bat ekartzera, ez eta nire esanetara jartzera ere—, dio irribarre aurpegiz, burla-haizez?, bere exekutibo-besaulkian atzeraka eginda, eskuetako hatzetan harturiko lapitzaz jolastuz. —Ala neure aurpegia ikustera, ea hortik esaten duten bezain fierra ote naizen?

—Zu ezagutzera, agurtzera, mesede bat eskatzera.

Arzuaga, ene abizenaren jatorria argitzeko eskatu zidan.

—Espainiarra da, bistan da, baina zein lurraldeetakoa?

—Euskal abizen bat da.

—Imajinatzen nuela, ba; Guevara ere euskalduna da, baietz?

—Euskalduna, bai jauna, eta mende eta nobleziaz ongi kargatua.

—Eta jauntxo feudalen gaiztakeriez, segur aski.

Ez zitzaion arrotza gaia.

—Jauntxo nobleena eta euren izter eskubidearena.

Gaurko euskaldunena ere bazekien, Francorekiko istiluetan zirela. Oñatiko gure herria mendeetan azpiratu zuten Ladrón de Guevaratarretaz mintzatu nintzaion, pasadizoren bat kontatu nion

—Nire arbasoak, hala balira ere, egindako ez-egitekoak ez ditut ba erreparatu behar izango, ala?

Ezustetik ustekabera, ze sekula ez nuen imajinatuko halako elkarrizketa lasaia eta trazendentzia gabea Guevara komandantearekin, noiz eta iraultzak, ezbairik gabe, dedikazio osoa eta topera eskatzen zion unean, urgentziazko mila asunto zituenean. Atsedentxoa bidean, arnas hartzeko parentesia? Edo zer bestela?

—Bada, komandante hori, Cabañara etortzen jarraitzeko baimena eskatzera natorkizu, igande goizetan Santa Bárbarako kaperatxoan meza eman ahal dezadan eta baimendu diezadazun presoak bisitatzea zeren, aditua daukadanez, Urte Berri egunean hustu zen kartzela, baina berriro betetzen ari omen da preso berriekin.

Lehenbizi “ez” biribil bat, katedrala adinakoa, eta segidan “bai”, kategorikoa halaber, dudatarako eta baldintzetarako pitzadura gabekoa. Diktadurako erregimenean militar asko elizaratzen ote ziren galde zidan.

—Zuk badakizu, komandante, gaurko militarrak Espainia nazional-katolikoan bakarrik doaz elizara eta komunioa hartzera; hemen hamarren bat emakume etortzen dira, haur batzuk eurekin eta kaperako enkargatua, atean, aldareari bizkar emanez eta erretzen, baina militarrak ezta deskuiduan ere.

—Ba orain ere joango ez direnez eta neuk debekatu behar izan gabe, argi gera bedi, igandeetan meza ematera etortzea aurreztu zenezake.

Segundo batzuetan isildu zen.

—Gauza bat egingo dugu, guardia, etorri zaitez hona.

Ahots goran deitu zion, ia oihu eginez. Miliziano errebelatua eta bere fusila sartu ziren. Ez agur militarrik, ez takoikada eta firme, nagusiaren aurrean.

—Esan, komandantea.

—Jakin ezazu nor zen kaperako arduraduna.

—Santa Bárbarakoa esan duzu?

—Eta bere giltzarena, eskatu iezaiozue eta gaur bertan ekarri iezadazue niri, gaur esan dut, nerau arduratuko naiz itsasora botatzen.

Jarraian solemnitate-tonuan bota zuen, irribarre egiteari utzi barik eta irmotasunez aldi berean, pausatuki, hitz bakoitza sendo markatuz, printzipio eta ordenuen pregoi baten moduko hurrengoa:

—Hemen, Cabañan, oraintxetik deuseztaturik, zeharo debekaturik, mezak, katekesiak, arrosarioak, erlijio-usain duen oro (kristaua, mahomatarra edo budista); nire soldaduen formaziotik, hala politikan nola filosofian eta erlijioan, neuk solamente eta neuk izendatuko ditudanak gara arduradun, neronek erabakitakoa bakarrik egingo da, argi dago?!

—Argi, argiegi.

—Eta harritzen zaitu, aita?

—Ba, badakizu zer? Harritu, berez harritu, ez, baina gustatuko litzaidake jakitea zergatik zenuten Sierra Maestran Sardiñas abadea kaperautzat eta azken hilabeteotan beste kaperau batzuk beste mendilerro batzuetan.

—Mantendu genituen bitartean behar genituelako zen, orain ez dira premiazko; soberan daude beraz, ulertzen dugu elkar, ezta?

—Primeran.

Kartzelari buruz, Cabañako aurreko jabeek zer pentsatzen eta zer egiten zuten zuen jakin-minari erantzun nion, eta burla-haizez erantsi zuen:

—Krudelak, ezta hala? Babes gabeko preso gaixo batzuei bakardadean sufriaraztea baimentzea, apez baten asistentziarik barik eta bere laguntza eta bedeinkapenik ez dutela hiltzea, krudelak, oso ankerrak! Baina iraultza ezberdina da.

Presondegia betetzen ari zena onartu zuen, egunero iristen zirela maizter berriak, ttipi geratuko zela, ezen anitz ziren poliziak eta militarrak txarto portatu zirenak; hortaz, tribunalen aurrealdeetan erantzutera behartuak zeuden.

—Gura duzun nahi beste bisita ditzakezu, gogoan duzun orduetan eta beharrezkotzat jotzen duzun denbora hartuta.

—Baimen idatziren bat emanen zait, salba-konduktutzat egingo didan zerbait? Ez dadila gero…

—Ez, segurtatzen dizut ez duzula faltan izango, sartu, irten eta barrutian libertade osoz mugituko zara eta, norbaitek molestatzen bazaitu, esanda laga iezadazu eta konponduko dugu; espero dut zeuk ez duzula deus egingo gu behartzeko zuri sarrera galaraztera.

Beste azalpenik galdegin gabe nik, berak eman zizkidan argibideak doan. Bere esanetan, Cabañan laster ekingo ziotela justizia auzitegi iraultzaile batzuk.

—Batzuek, zenbait esan duzu?

—Bai, iraultza tribunalak, zeren epaitzeko asko dago eta ordain arazteko ere bai.

Exekuzioak gertatuko ziren eta horretarako hormatzarra, paredoia. Lan ugari agindu zidan, asko, eta indarrak metatu nintzala kontseilatu.

—Premiazkoa izango duzu, padre.

Puntu honetara iritsita, pentsatu nuen bisita amaitua zela eta altxatu eta despeditu nintekeela.

—Presaka al zabiltza, ba? Zergatik ez dugu luzatzen solasa? Gustukoa izango nuke iritziak trukatzea ebanjelioko orrietako justiziaz; azken bi mila urteotan Eliza izan da esan duena zer zegoen

ongi eta zer txarki eta inork ez bezala hark iradoki du doktrina, gizarte-bizitzaren pautak, zibilizatua, mendebaldekoa eta kristaua deitzen dugun horrenak.

Ché urrun zen erlijio-gaietan ezjakina izatetik, kristautasunaz zehazki. Ez nion galde zertarako ikasi zuen zekiena, jarraitzeko ala jazartzeko... Bere esanean, ebanjelioa utopia hutsa da; berri onak, berriz, lorategi ederregia errealitatearen antipodetan; bere promesak haizeak daramatzan hitzak, zeren eta lagun-hurkoarekiko maitasuna lako gauza hain iragankorra den zerbaitean sostengatzen baitira, eta berekoiak eta handizaleak, besteak zapaldu eta aberastasunak pilatzen dituztenak ez dira, ez, momentuan zigortzen, baizik eta euren hurkoen eta munduaren jabe egiten baitira gainera.

Gogorragoa zen oraindik elizarekiko zuen iritzia. Gezurra zen predikatzen zuen ebanjelioaren arabera bizi zenik, bere doktrina sozialak ere ezin zuen kaburaino eraman sikiera.

—Ez, komandante jauna, oker zaude, gizon-emakume mordoa dira Elizan euren buruaz ahaztu eta beren hurkoekin pobrezia partekatu eta edozein min trantzetan laguntzen dutenak.

—Ez nauzu engainatzen, zuk badakizu zein elizari buruz ari naizen.

Orduantxe entzun nion lehenbizikoz iraultzatik, abizenik gabeko iraultza horretatik, aterako zen "gizon berriaz" mintzatzen. Inuzenteki galdetu nion utopia berriren bat asmatzen ez ote zen ari.

—Ez da batetxo ere berria, ze "gizon berri" hori amets zaharra da eta zeuk badakizu, komandantea.

Chéri ez zitzaizkion interesatzen teoriak. Chék adierazten zidan mezua, errealitaterantz zubi ziren hitzetan ipinita, gardena zen. Eliza bere buruarekin eta gizarte aurrean zintzoa izan dadila, bere porrota onar dezala, munduak bertan beheratua segitzen duela, baztertu dadila eta utzi diezaiela lekua nori euren printzipioak eta metodoak erabil ditzaten. Arazoak konpontzen ez baditu, bada, erretiratu eta besteren bat sartuko da bere metodoak frogatzera, eta horrelaxe norbaitek asmatu arte. Ez ditut gogoan zein hitz zehatz erabili zituen, doi-doi oroitzen ditut aldiz bere ideiak.

—Gauza handiagorik, komandante! Ez eta zuek, marxista horiek, fidatzen zarete kristauoz, ezta geu ere ez gara zuetaz fio; baina ez dakit, agian arazoa ez datza elkarrekiko konfiantza gabezian soilik eta zerbait sakonagoan du sustraia, apika. Ez zaizu iruditzen?

Esan zidanez, esan gura zidan bera ez zela komunista, alderdiaren artxiboetan arakatu nezakeela, bai eta bere zelula bakoitzean, eta Chéren izenik ez nuela aurkituko.

—Litekeena da, eta zer? Zuk eta biok dakigu buru-bihotzarekin garena garela, ez zerrenda bateko izenarekin.

Eskuak bapo estutuz agurtu genuen batak bestea, "hurrengo arte" batekin, biok ere sinetsita elkar ikusiko genuela aurrerantzean. Casablanca eta Habanara itzultzeko ibilbidean ene kolkorako nioen bata bestearen atzetik altxatu beharko nituela elkarrizketaren harlauza guztiak, ea horietako zeinen azpian aurkitzen nituen Chéren intentzio ezkutuak; komandanteak bolbora usainik ez bazuen ere, ozenegi sumatzen nizkion erreserba mentalak. Igotzerakoan baino galdera gehiago nituen jaisterakoan, komandanteari buruz.

# LAU

Errobot batek
ez maitatu ez gorrotatu, ez pentsa ez sentitzen du.
Errobot batek obeditu egiten du.
Hoa hara… eta badoa, hator hona… eta badator,
barre egizak… eta barrez da, isildu… eta isildu da,
hil ezak… eta hil egiten du.
Errobot ona ateratzen
ari ote zaie Marcial?
Inoiz ez du galdetzen: eta zergatik?
Obeditu egiten du sinpleki.
Bere bisajeak ez du adierazten
honakoa ondo deritzon, zoriontsu ote den,
harakoa gaizki deritzon, gogaitua ote den.
Marcial itxuroso dago, alabaina,
Materia onez egina:
sentimendu noblekoa da,
irizpide zuzenekoa,
lagunkoi, adeitsua, onesta.
Errobot bihurtzeko zorian ote delako?
Marcial ote Chék amestutako
“gizon berri”-etako bat?

Ateak irekita zeuden. Neuk aukeratutako ordu eta gustukoen nuen atetzarretik sartu eta irten nintekeen deliberatzen nuen orduan, aurretiko bideaz Casablancara igoaz edo osteko tuneleko albotik, zerbait egitera joan edo landatik paseatu, harresitik ibili eta handik Habana begiztatu nezakeen, nola Morroari bisita egin, oinez ala autoan igo nintekeen, neure erabakia zen. Eta inork ez ninduen endredatuko, horrela esan zuen buruzagiak, Chék. Baina justu oraintxe, banezakeenean, zera sentitzen hasi nintzen barnean: zer ote zen, egonezina, beldurra, nazka?

Eta hilaren 7an, asteazkenez, otu zitzaidan kartzela antolatu gabe egonen zela oraindik eta ez nintzen joan eta ostegunean, ez dakit ze aitzakiarekin, ezta ere. Koldar sentitu eta ostiralean lantxa hartzera joatean, Cabaña eta bere harriek barre egiten zidatela ikusi eta makurrago sentitu nintzen.

Casablancako parroko gisa, nire betekizunen artean zegoen, eskatzen zutenei eta beharrezko izan zezaketenei ene zerbitzuak eskaintzea. Cabaña osoko biztanleak, komandantea barne, nire parrokiakoak ziren, gustuko izan ala ez. Baina, neure artzain-arreta izan zen, ala beste interes ezkutu edo kamuflaturen batek eraman ninduen Guevara komandantearen egoitzara?

Benetan kontsolamendua, animoa eta esperantza eraman nahi nien presoei ala eta hor izatea eta lekukotza jasotzea, ene glandulak eta neuronak kitzikatu gura ote nituen iragartzen ziren leizera eta sutara gerturatuta?: Chék berak aurreratu zidan. Ezagutzen ninduen, bazekien nire jarrera, desio eta asmoak koloretako ortzadarraren gisakoak zirela, dena ere ez zela aratza, jakin-mina erreala zela eta arreta apostolikoa be bai, nahiz eta ez hainbesterakoa.

Hura guzti hura inurri zatarraren koloreko jarri zitekeela usaintzen nuen, bilatu gabekoa aurkitu nezakeela. Nire indarrek jasan ezingo zuten zama hartu nezakeen bizkarrean. Ez nuen izan, ezta hurrik eman ere, kale kantoiaren bestaldean gerta zitekeen guztia hausnartzeko beharrezko irudimenik, ez eta inguratuko ninduten itsaski eta turbulentzien berririk. “Ordezkoa bilatzeko eskatuko diot ene nagusiari? Oraintxe da ene unea. Ez, akaso geroago”.

Ostirala, urtarrilak 9. Gaur ala inoiz ez. Meza eta gosariaren ostean bidean jarri nintzen, azkenean! Casablancako errepidetik gorakoa Z bat da, ehun metro ezer gutxi gehiago, trazu zuzen bakoitzean; abiapuntuan herriko plaza txikia; lehen angeluan, eskuinera hartuta, sarbide kontrola; hurrengo angeluan, ezkerretara joz, Habanako Kristoa; iris-gunean, jada gailurrean, landarako sarrera.

Kanpalekuaren perimetroa begiak itxita begitantzeko, aski da ezker eskuko ahurra irekia irudikatzea. Hatzak hasten direnekora artekoa landa litzateke; `Venus mendia´ lez ezagunean etxebizitza bloke batzuk, antzokia, biltegiak, atelierrak eta kapera; hatz puntetan, Morroaren gotorlekua; esku-azpiaren eskumatara, bere luzera guztian, Atlantikoa, eta ezkerretara badiara eta Habanako portura daraman kanal naturala. Hatz potoloak okupatutako espazioan San Carlos de la Cabañako gaztelua, barruti harresitua.

Kilometro koadro bat, gutxi gora-behera, izan behar du kanpalekuak hartzen duen lursailaren luze-zabalera. Fosora eta barne harresira hurbildu nintzen, Erdi Aroko gazteluek erakusten dituzten arkuen gisara eginiko lubanarroaren eta atetzarraren gaineko zubira; nahiz eta gotorlekuaren eraikuntza askozaz geroagokoa den, mila eta zazpiehun hasieretakoa apenas. Lubanarroa iparretik hegora doa, presondegiaren oinetan hasi eta Ereinotzen Hobia bezalaxe ezaguna den plazatxoraino doa: hormatzarra, paredoia, zegoenekora, Z-ren lehen angeluan datzan sarrerako kontroletik sarbidea duena.

Lekuz kanpo eta denboraz at aurkitzen zara behin atea zeharkatuta, irla gisara baina aldrebes, ur-tanta harriz inguratua alde guztietatik, salbu zeru-sabaitik. Galdetu egin nuen.

—Hau txikia da, ezinezkoa da hemen galtzea. Kaletik jo eta ezkerretara hartzen baduzu, honen paraleloa den bestearekin topatzen zara, komandantzia duzu bertan, eta honen atzealdean harresia. Hemendik eskuinera, han hondoan, kartzela, hemendixe ikusten da. Ate guztiek bulego eta dependentzietara eramaten dute.

“Nora noa? Kartzela bisitatzera natorrelako nago hemen, bai, baina goiz da, ez daukat presarik”. Bestaldera hartu nuen, urradura nuen oraindaino kartzela, erresistitu egiten zen ene barrua. “Ea zer aurkitzen dudan komandantzian, komandante berria ez, seguru”. Harrera-sala ez oso handia zura ilunez estalia, jesarleku korritua ingurumarian, ardo-koloreko lauzazko zorua, gangatilazko sabaia, leiho bakar bat, bi-hiru koadro paretetan, komandantearen bulegorako ate-sarbidea. Kubako ezkutua fronteko horman, mahai handi bat, luzatua, hutsik, distiratsu, egur noblezkoa, eserleku erosoak alde batera zein bestera, buruzagitza goi-karguentzako, dudarik gabe.

Une horretan bi ofizialek okupatzen zuten, espezimen arraroegiak, bentzuturiko armadaren arropaz, apainduak eta horrexegatik arraroagoak, ontzitik kanpoko arrainak.

—Trantsizioan gaude, egun gutxitarako izango dela, jakina; komandante berria behin etorri zen, ez dakigu hemen ezarriko ote duen agintaritza; zer egiten dugun?: egon, itxaron, deus ez.

Ez dute berba egin nahi, ongi egiten dute, aho itxian eulirik ez. Isiltasunak eta jarrerak badira desilusioa eta zurztasuna oihukatzen dutenak. Tristeki irribarre eginez diotena:

—Hemendik atera gabe gaude, atseden orduan bai, harresiko balkoi horretara irteten gara malekoia eta itsasoa begiztatzera.

Neu ere irten egiten naiz. Bista benetan ikusgarria da. Presondegian ez dakite hara noanik, ez naute itxaroten, joan behar dut. Arrazoia zuten ofizialek, gauez erabat eder ikusiko da. Portuaren bokalea azpian, portua ezkerretara, aurrean hiria, artzapezpikutza, katedrala, 1. zenbakiko moilaren inguruan antigoaleko San Franciscoko komentua, goian Kapitolioa, galegoen zentroa; Pradoko etorbidetik jaitsiz malekoia, uhin hautsien apar zuria luzera osoan, Vedadoa han urrun, ozeanoaren urdin, azula, urdina zilarrezko brotxakada bat lez, eguzkiaren dirdaiak, non begiak galtzen diren. Kartzelatik edo tribunaletatik eta paredoitik aterata, sarritan itzuliko nintzen hona gerora.

Pixkana-pixkanaka hurbildu nintzen kartzelara, berde minez margotutako altzairuzko atetzarretara. Erlauntza baten antzeko burrunba hazi egin zen abantzuan nindoan neurrian: horma eta burdinsareen gainetik, berau entzunarazten bazekien patioa zen. Emakume talde bat, altzairuzko plantxatzarrak kolpatzen zituzten euren ukabilekin, alferrik, oihuka, alferrik, negarrez, alferrik, inork ez zituen artatzen, deusek ez zien kasurik egiten. Deprimitzekoa egin zitzaidan eszena: portaloi erraldoi eta itsusia, emakumeen oihuak, sartu eta irteten ziren milizianoen indiferentzia. Atera zuzentzen zen lehenbizikoari heldu nion:

—Aizak, agintean dagoen ofizialari esaiok Casablancako abadeak sartu gura duela, Guevara Komandanteak baimenduta natorrela.

—Padre, padre, presoak ikustera zoaz?

Gainera etorri zitzaidan dametako bat:

—Egidazu mesede, nire senarragatik galde ezazu, XX kapitaina, esaiozu…

Ohartu gabe, emakumeak multzo ziren neure inguruan:

—Nireak XX izena du, halako paperak non laga zituen esan beharko dit…

—Padre, esan XX tenienteari, XX lotinantari, bere ama hil zorian jarri dela…

Denak ere aldi berean, arrapaladan, edozelako erreferentzia, deskripzio edo senarra, anaia, semea, ezkongaia identifika ezinezko eran.

—Horrela ezinezkoa izanen da, idatziz ipini iezadazue.

Atea ireki eta sartzera gonbidatzen ninduten unean, segundo batzuetan jakin nuen hurrengo egunetan estreinatu behar nuen ofizio berriarena: postaria edo errekadu-mutil, eta ez zitzaidan batere gustatu, pentsatze soilak izutu ninduen.

Cabañako kartzelan nengoen honez gero. Alabaina, lehen bista-kolpean ikusi nuena: barrote metalikoez eginiko kaiola erraldoia, teilatua ere barraz gurutzatua, kalearen eta patioaren arteko segurtasun espazioa, eskuak lotuta sartzen denaren esperantzak hiltzen eta libre irteten denarenak birjaiotzen direnekoena. Burdin sarearen bestaldean patioa, mahoi urdinez jantzitako gizonen erlauntza, P bat zutela zamarraren bizkarrean, batzuk paseatuz, bestetzuk geldi, taldeka, erlauntzaren burrunba.

Patioaren mugan, kobazulo beltzak, saretuak haiek ere, galeretatik hamar lo-lekuetarako, hiru biltegi, sukalde eta jantokirako. Burdin hesiaren barnean bi ate. Bata, kaperatxo ñimiñoa, Cobreko Karitatearen irudiarekiko aldaretxoarekin, hiru banku, korridore bat, eta amaieran Heriotzaren Galera. Bigarrena, Alfonso Zayas kapitainaren bulegoa.

—Hemendik, padre, kapitaina zain daukazu.

Kapitainaren ez fisikoak ez modalek, ez zuten zerikusirik gerrillari batengandik espero ohi den arketipoarekin, are gutxiago kartzela iraultzaile bateko buru batekin. Deusa baino gutxiago, bere begiak, bere begirada. Geroago kontatu zidaten etsaiaren aurkako bere portaera ausartegia izaten zela, balore eta adore itsuak: Santa Clarako burdinbideen geltokian azken Gabonetan izan zen batailan, esaten den lez, heroien moduan ekin zuela. Chéren konfiantzazko gizona zela.

Sarrerakoan sortu zidan irudipena ez zen hori izan. Lekuz kanpokoa izan zen hobe esanda, ez markatik kanpokoa. Puerto Padreko parrokiako Ekintza Katolikoko gazte baten antza gehiago hartu nion, apala eta hegoak labur, hitz gutxikoa eta are gutxiago diskutitzekoa, begi oso gaixoekin, ur-gorritsuzko putzuan hondoratuak. “Kartzelaria estanpa horrekin? Hobe esan zitekean sakristaurako zumearekin egina hagoena”.

Bera Juventud Acción Católicakoa izateak senidetzako hitanoa erraztu zigun:

—Puerto Padren, duela urtebete, ez huen hau imajinatzen, ezta? Ez zakiat nola sentituko haizen, baina ni beldur izango nindukek hire lekuan, hor patioan zerraturik dagoen otso talde hori zaintzen…

—Beno, bai eta ez, abenduan orain baino otso gehiago hituen, porrotak burumakur dizkik, oraindik ez ditek irentsi iraultza.

—Pozik?

— Baa, norbaitek egin beharrekoa duk hau ere. Eta zeuk: jende guzti hori kofesatzea pentsatzen al duzu?

—Ba uste dut ezetz, akaso inor ez, baina zorteak erabaki du neu izatea beren parroko, ez dut gustuko, baina norbaitek egin beharko du, diot nik ere, eta hemen nago behar nautenerako.

—Gaitzagoa eta antipatikoagoa begitantzen zait zurea nirea baino, padre, zorte on opa dizut.

Patiora pasa eta kristalezko barrera baten sentsazioa izan nuen, transparentea baina gogorregia, euren eta nire artean altxatzen zen, parean mugitzen zitzaidan, elkar ikusten, entzuten genuen, baina komunikaziorik ez genuen sortzen. "Esan gabe doa, ene pentsatzeko era usnatzen dute, besteenetakoa naizela konturatzen dira, ez naute sentitzen eurena, herriak apezei egozten dien bele haratustel-jalearena oroituko dute akaso, eta hondamendiaren mezulari nakusate; bi pausutara daude: zergatik dakuskit eta sentitzen ditut hain urrun?".

Taldetxo batengana iritsi naiz, animaturik ari dira berbetan. Kolpetik harri karrari bloke urdina eta zeharkaezina nagusitu da, begiak tinko nigan.

—Egunon, padre Javier naiz, Casablancako parrokoa. Zer moduz zaudete?

Inork ez zidan erantzun, begiradarekin erronka jotzen zidaten. Niri ere ez zitzaidan etorri izotza kraskatuko zuen hitzik.

—Nola uste duzu gaudela gu? Kontentu? Zoriontsu? Ez zara gai pentsatzeko kartzelan mundu guztia txarto egoten dela? Beste zerbait galde zeniezagukeen. Txarto gaude eta kitto.

Beti bada ezberdina den norbait. Gertatu berri zena ikusi eta ene laguntzan bertaratu zen. Bere burua aurkeztu zidan, ez dut haren izenik gogoan, Habanako ez dakit zein elizan ohikoa zen, halako apaiza ezaguna zuen, ciceronearena egiteko pronto azaldu zitzaidan. Elkarrizketan hasi ginen. Zenbat ziren galdetu nion.

—Ez dakit zehaztasunez, zortziehun? Laster izango gara mila, jende gehiago ekartzen segitzen badute, batzuk beste batzuen gainean lo egingo dugu, ezingo gara mugitu patioan, sardinak latan legez.

Bizpahiru gehitu zitzaizkigun, eskolta eginez bezala. Galerak, logelatzat zituzten tunel bobedak behatzera eraman ninduten.  Arreta eman zidan zenbat etzaleku zeuden okupaturik: "Lotan ordu hauetan? Txandaka lo egiten ote dute?".  Hondoraino ibili ginen. Horman irekitako leiho bat, pare bat metro zabalerakoa?, argi gutxi eta aireratze eskasa galera hain luzeetarako; bi komun eta dutxa bi gaizki simulatuak leihoaren alde banatan; laurogei eta ehun arte izendatutakoak galera bakoitzean, "Kiratsa, naturala, gauez ikaragarria izan behar du, ez dut pentsatu nahi nolakoa izanen den hemen disenteria-agerraldi bat lehertzen bada, jainko santua!".

Jantokia beste edozein galeraren antzerakoa zen, mahai eta eserlekuekin, kamainen ordez. Sukaldea, labe jasanezina. Bazkaria ia-ia prest zen. Probatu nuen platertxo bat: arroza indibaba gorriekin. Ez zegoen txarra, gatz eta olio pixka baten falta beharbada. Jakitoki eta elikagaien hornikuntza ere aurreko erregimenetik heredatu zituzten.

Memento gaiztoak bizi zituzten, beren bizitzetako okerrenak apika. Kartzelak bere zimenduetan mehatxatzen du gizona. Askatasun gabeziak zorabiatu egiten du gizakia eta, esperantza laino bihurtzen zaiola badakusa, pesimismoak lur joarazi eta bere arima jan liezaioke. Ene galderak erantzuntzat geratu zitzaizkienean, euren galderen zaparrada etorri zen. A ze jakin-mina!

—Zer entzuten da kalean? Zer dio prentsak? Zer egingo dute gurekin? Egia al da auzitegiak hemen bertan, Cabañan, eratuko direla?

Ez zuten sinesten deusik ere ez nekienik. Bisita bakoitzaren aurretik prestatu beharko nintzen zehatz-mehatz erantzun ahal izateko. Baina berriak baino zerbait gehiago ekarri beharko nien euren

estuasuna arintzeko. Beraien sendiekin harremanetan jartzeko proposatu nuen ene burua, haien telefonoak ematen bazizkidaten; euren gutunak postan ipini, arropak karreatu, botikak, zena zelakoa, beraientzako zena entregatzen bazidaten. “Joku garbian egiten bagenuen betiere”, azpimarratu nien.

Jende dezente agurtu nuen, esku batzuk esaten zidaten “Behar zaitut, lagundu nazazu”, beste batzuk ez zioten ezer. Despeditu egin nintzen. “Bihar arte, eta banoa”. Eguerdia zen, bi ordu eta erdi bezalatsu iraun zuen gure bisitak.

Arratsaldea eman zidan bisita irensteak. Patioaren zurrunbiloak kirrinka egiten zidan belarrietan, presoen antsiak ariman. Lehen taldeko bozeramalearen “txarto gaude” hark belarrondokoak eman zizkidan orduetan eta orduetan. Pena sentitu nuen gizon haiengatik. Hamabost egun lehenago kalearen jabeak ziren, euren arauen pean eta beraiek markatutako erritmoan mugitzen zen Habana. Orain, libertatea galtzean, hegorik gabeko guaraguaoak ziren, itsusiak eta gorrotatuak, inori ez zitzaion axola sinesten zutena edo sinetsi gura zutena, jakin eta sentitzen zutena; izan ere, herriaren herra burutik behera isurtzen zitzaien, melatu jario isuri lirdingatsu eta kirasdun legez. Beldurrak geldiarazita bizi ziren eta arrazoi sobera zuten horretarako.

Kristau eta apaiz modura, ebanjelioan ikasitako karitatea baino ez, beste alternatibarik ez nuen. Gizon haiek eginikoak gertu samar ikusi eta bizi izan nuen gizon gisa (ze batzuetan ordenak obedituz eta bestetan otso odoltsu legez jokatu zuten), ezin nuen sortu eta defendatu zuten mundu anker hura gaitzetsi baino; onartu behar zen, ordua iritsita, kontuak eskatuko zitzaizkiela eta eginiko ukaezinari aurre egin beharko ziotela.

Baina maitatzea eta higuintzea ezin bizilagun izan; San Frantziskok Gubbion eginikoa, otsoak mantsotzeko balentriak legenda zirudien; maitatze horiek Ostiral Santuko soinuak dirudite. Leize baten beltzunean galdu arte espiralean jaisten zen hobiaren ertzean egin nuen kirik. Bizkarrezurrean goitik behera zartada moduko batek astindu ninduen eta burmuina zurrun, sorgortua, erantzunik gabe jarri zitzaidan, galderak entzuteko edo egiteko gai ez nintzela. “Kaka monumentala da hau”.

Biharamunean itzuli nintzen kartzelara. Eta hurrengoan eta hurrengoan. Geziak bailiran zauritzen ninduten askoren begiraizoak, kosta zitzaidan indiferentzia agertzea besteen indiferentziaren aurrean, formazio eta informaziorik gabeko sineskerien eta azpi-kulturen produktu zirela pentsatu, eta kasurik ez egiten saiatu nintzen.

Berbetan aritzeko hurbiltzen zitzaizkidanak edozeren gainetik bilatzen zutena, kalean gertatzen zena, prentsak zioena, aztarnaren edo arrakalaren bat zen, nondik argi edo esperantza izpi bat filtratuko zitzaien. “Zerk itxaroten dio Kubari, zenbat iraungo du gobernu iraultzaileak, zer etorriko da gero…?”. Zer dakit nik?

Ez zen gertatu lehen egunean izutu ninduen esperotako enkargu andana. Ez kanporako ez eta barrurako. Akaso mandatari segurua ez nintzela kontsideratu zutelako. Apika, saihesteagatik arrotza zen norbait senitarte eta ezkonduen intimitatean gehiegi sartzea. Kasu bat suertatu zen ordea, arreta asko neureganatu zuena, kartzelan bizi zen tentsio eta atmosferari ez zegokiona. Jaun bat, Muralla kaleko larrugintza-denda bateko jabea bera, Aguiar kaleko San Franciscoko komentura ailegatu zen, bizi nintzenekora, eta Cabañan atxiloturik zeukaten bere lagun bati buruz mintzatu zitzaidan. Hari kazola bat irisaraztea gura zuen, kazola barruan fricaséea, untxi erregosia saltsan.

—Bere plater kuttunenetako bat da eta animoak goran eusteko balioko dio, seguru nago.

Patioan aurkitu nuen, Banco Nacionaleko goi-kargua zen, pozak txoratzen hartu zuen bere lagunaren proposamena, eta bi eguneroko txandetan hiru untxiren oturuntzak egin zituen; nik ez nituen dastatu, baina bost izarretako usainekoak ziren ziertoro. Bankeroak ez zituen egun asko egin kartzelan eta Muralla kaleko bere lagunari esker kartzelak ez zion eragin handirik jasanarazi, mesede gutxi egin zion. Ez zen ase-betetasun gehien eskaini zidan karitate-ekintza.

Kartzelako atetzar berdeetatik bi urratsetara justizia iraultzailearen ikerketa eta artxibo bulegoak egokitu zituzten, Entzutegia, Miguel Angel Duque Estrada kapitaina buru zuena. Bere mahaitik ikusten ninduen goizero iragaten presondegi bidean, eta kontrako norabidean eguerdietan.

—Pater, sar zaitez, ez dituzu eguneko nobedadeak jakin nahi?

Susmatzen nuen hori egiten zuela, arratsaldean edota biharamunean, berriok patioan nik zabalduko nituelakoan... Berriak bahetu egiten nituen. Ondo zegoen informaturik edukitzea jendea, baina eztandagailuak izan zitezkeenak ere baziren eta ez nintzen izanen ni espoleta kenduko ziena. Zer da abadeaz baliatzea zamarik handiena honi bizkarreratzeko? Egunak joan ahala apaizaren eta ikastetxe erlijiosoan hezitako sasilegelari iraultzailearen arteko espazio fidagarria zabaldu zen.

—Pater, zer moduz zaude gaur?—, esaten zidan.

Besteren lurretan mugitzen ginen biok ala biok, harea mugikorrak zapalduz, geurea ez zihoan hortik, hala irizten nion nik.

—Hilabete honetan egingo du burrunba lehen bonbak eta askoz gehiago, katean entzungo dira hurrengo hiletan, oso latza izango da, pater, kartzela gori jarriko da, oso gatxa.

—Zer uste duk, Chék ezezkoa emanen lukeela presoen artean misio-kanpaina antzeko bat antolatzen saiatzen banauk?

—Zer litzateke hori?

—Onbre, bada Chaurrondo padre paularekin hitz egingo nuke: ea misiolari bi eta karitateko beste bi mojatxo lagatzen dizkidan, datorren astean etor daitezen Jaungoikoaz edo zernahitaz berba egin diezaieten; kontua da, hiltzera badoaz ere, aukera izan dezatela heriotzara joateko damuturik eta barkaturik.

—Eta zergatik ez zu zeu, ezagutzen zaituztenez?

—Horrexegatik, usnatu nautelako eta ezagutzen nautelako. Edo ezagutzen nautela uste dutelako.

Honela erantzun zidan Chék:

—Heriotzara ibiltari doazenentzat `opioa´? Isilka, meneko, obeditzaile martxa egin dezaten? Loturik eta zigorraz arrastatu ez ditzagun? Ez dute merezi, beroiek ez zuten hola egiten, baina saia zaitez, ea zer gertatzen den.

# BOST

Berdea da itxaropenaren argizuloa,
da bizitza iragarle.
Nor izan zen
kartzelako ateak berdez
pintatzeko agindu zuen doilorra?
Jainkoa!, eta ze berdea!
Gordinena, minena, lotsagabeena,
ferde basatia
oihanaren erraiei erauzia,
irain orlegia, burla-haize
berdearen algara,
su berdezko sugarra zirtaka:
"Laga hemen zuen itxaropenak
nire beso-artean kraskatzera
destinaturik zatoztenak".
Berde olibazko milizianoek
guardian dira atetzarretan.
Esperantza izpi batek ere ez du
pasa behar burdinotatik,
esan dietenez.
Urkamendi bat altxatuko dugu
patioaren erdian
eta lepoan soka jarriko diegu
itxaropen eta ametsei.
Hemen da heriotzaren erresuma!
Zein gaixo, ene Jainko,
kartzelako portoiak berdez margotzea
erabaki zuenaren burua.

Aita Paulen La Mercedeko elizara joan nintzen, Cuba kalera, Habana Zaharrean, eta Hilario Chaurrondo aitarekin hitz egiteko eskaria egin nuen; oso ezaguna bera uharte guztian, bere misio kanpainak zirela-eta, gehienbat barrualdeko parrokietan. Ez nuen ulertu Kuban edo Habanan ala etxean ez ote zen, edota ez ote zitzaion ni ikustea interesatzen, edo-eta ezin zuen. Bada, ea nor jaisten den, ze inorekin berbaldia egin ezean ez noa. Aita Obanos, oso ondo. Ideia azaldu nion.

—Eta biharkorako gura diat, berehalakoa izan behar dik, haizeak norabidea aldatzeko betarik eman barik; denborarik ez laga batik-bat, epaiak hastera doaz eta patioa txingarrez estaliko duk eta ez duk izanen kristaurik oinak bertan sartuko dituenik; orain.

—Propaganda, giroa prestatzea?

— Ez, gizona, hobe ustekabean beraien artean erortzen bazarete, asistentzia segurtatua zagok, presoen arreta norberaren kontu, ez zegok gure esku; ziur naiz gainera mojatxoak propagandistarik hoberenak izango direna, predikatzaileei baino hobekiago entzungo diete beraiei.

—Gaiak?

—Zuek zarete perituak, ezta? Heriotza, epaia, infernua, loria, grazia eta bekatua, manamenduak, seme xahutzailea, damutasuna, edozer gauza, hemen kuzinatzen ari den gisatu bolboradunean hatza edo mihia sartzen ez den bitartean; iraultzari buruzko hitz erdi bat eta funtzioa amaitu da, horrela dira gauzak, bai, jauna.

—Eta zergatik ez diguk laguntzen hik?

—Ez dudalako nahi, ezin dudalako, ekiteko ordua iritsiko zaidalako eta nork lagundua izanen ez dudalako.

Misioa eman zen. Lau egunetan zehar, goiz eta arratsaldez, karitateko bi lekaime eta pauletako aita bi askatasun osoz mugitu eta mintzatu ziren, presoei salbamen mezu kristaua eraman nahian. Preziatzeko moduko taldea izan zen arretaz txandako predikatzailearen ingurumarian. Askok, gehiengoak esango nuke axolagabe eta interes gabeko posturak eta mozorroak hartu zituzten, hemendik hara mugituz, handik beste aldera, bakarka, buru-makur, gaia eurekin joango ez balitz bezala, baina sermoiko ur-ttanttaz blaitzen zituztelako konforme.

Lagun dezente galeren hondoetara atzeratu ziren briskara, tutera edota xakera jokatzera, erretzera, hitz-aspertura. Ez zen matxinadarik edo errefusa agerpenik izan inorengandik. Azken aktoan meza ospatu nuen nik eta hogeita bost edo hogeita hamar komunio partitu nituen. Preso batek bere ezkontza konpontzea, kristautzea eskatu zuen, misioa probestuz, eta hala egin zen, inolako eragozpenik gabe. Lekukotza zoritxarrean kide zuen batek eta Alfonso Zayas kapitainak egin zuten.

Merezi zuen? Bizi genuen garaian egokiena izan ote zen? Denbora galdu al genuen? Inork ezin dizu esan ez baietzik ez ezetzik. Batzuetan misterioak eskutik hartzen gaitu eta berarekin eramaten, itzalean hobekiago ikusten da argitan baino, zarata artean hobeto entzuten da isilean baino. Uhaldiek eta uholdeak sortzen dituzten euriteak badira, bai eta bustitzen eta blaitzen dituztenak ere lurrak, oso eskertuak geratzen direnak. Hor uzten dut.

Esamesak eta txisteak entzun ziren, ez asko ez gordinegiak, Cabañara bidalitako armada matxinoko ofizialen ahotatik. Une jakin batean gustu oso txarrekotzat jo nuen sermoiko Jainkoaganako hurbilketa eta bere barkamena bilatzeaz aritzea, eta Jainkoaren judizioaz, barruti harresitu hartan gertatzear zenaren jakitun. Urkatuaren etxean nola aipatu urka-bilurra? Nork daki,

ordea, ez ote zen preseski “ogiari ogi eta ardoari ardo” hori izan askok ikusiko zuten lur onduagoa tenple hobea hazi arazteko eta argiz beteriko euren isiltasun osora abiatzeko, horra, kantoiko izkinara.

Patioa irakiten zen. Grinen, frustrazioen, haserreen, arranguren, estutasunen, errezeloen eta beldurren eltzea zen borborka irakite eta gainezkatze puntuan. Ikus-entzunezkoan nintzela, parte hartu gura nuen, eskua luzatu, ura bota sutara, aholku eman. Erortzen ikusten zitzaien, digante burugabetuen basoa; lehenago, metrailetak eskuan,  boterea, indarra, krudelkeria; orain, itzalaz beheiti amilduz, don deusezak garai bateko etsaien eskutan, maitatuak ez direnen sentsazioa, maitatuak merezi ez izatea merezi dutenena. Sinesten zuteneko Jainkoa apurtzen ari zen.

Zer egin nezakeen nik beraiengatik? Gauza gutxi. Muturrera gerturatu beharra zeukaten gehiago, amildegitik zintzilik ikusi euren buruak, orduan ziur errenditu eta laguntza onartuko zutela. Jarreren aldaketarako metamorfosi mingarria, dimentsio berri bat, beste bat ez izanaren damua, gizon berri baten ikuskera, lur honetako gizona ez den hori izatera joatea. “Zer egiten dut nik patio honetan gaixo bat banaiz, beraien parekoa?”.

Misioaren ondoko egun haietako batean oraindik ikaratzen nauen zerbaiten protagonista izan nintzen, txundidura sortzen dit, egin izana onartzea kostatzen zait. Ongi atera zen, inor ez zen jabetu, baina akabera patala izan zezakeen, zenbait lagun nahastuta gera zitezkeen gainera. Preso bat hurbildu zitzaidan agurtzera, eta bakarka nahi ninduen. Manera onak, ez zen batere harroa, nolabaiteko urduritasun ukitu bat. Aurkeztu egin zitzaidan: Santiago de las Vegaseko polizia nazionalaren kuarteleko buru izan zen zenbait urtez, Urte Berri egunera arte.

Ez nuen ezagutzen, ez eta bere aditzerarik ere apaizgaitegi frantziskotarrean, udal berberaren barnean, herriaren kanpoaldean, bizitu nintzen lau urteetan. Ziurtatu zidanez, atxilotzera etorriko zitzaizkionerako gordetzeko aukera izan zuen, baina ez zuen egin, ze sekula ez zen inolako odol gertakaritan nahasi eta ez zuen uste inor joango zitzaionik kargu hartzera.

—Baina gertatzen da, padre, nire ama oso gaixo dagoela eta beldur gara hilko zaigula nik gehiago ikusi ahal izan gabe; bururatzen zaidan irteera bakarra da zeuk neure alde egin dezazula, egun bateko pasea eskatu eta onartuko zaidala eta zu baimendu zaitzatela gure amaren etxera eraman nazazun.

—Motel, motel!, hi ez hago oso ongi burutik, nola otu zaik halako disparatea? Ni joanen nauk hire ama ikustera, ematen didaana entregatuko zioat, dena delakoa, berak hiretzako emana ekarriko diat, baina, hi eraman bera ikustera? Eta atzematen bagaitiztek? Eta ihes egiten badidak?

Biharamunean, ordea, Alfonso kapitainaren mahaira eseri nintzen.

—Alfonso, hire mesede handi baten beharrean nauk; begira, Santiago de las Vegasko gure apaizgaitegian maisu nintzela ezagutu nian familia bat —ez zen egia— duk `tema´: ziurtatzen diat ene ezker eskua ere ez dela jabetuko eskuinekoak zer egiten duen eta, jakina, lagunaren hitza: justizia iraultzailera entregatuko natzaiok arratsaldean ez banaiz hemen, hire bulegoan presoa entregatzen; laga iezadak beren etxera eramaten, bere amak ikus dezan Jainkoak berarekin eroan dezan aurretik.

Alfonsok luzaz begiratu zidan, bere begi gaixoak txikiagotuta, ezpainak estutuz, sinesgogor. Bere begirada eutsi nuen.

—Badakizu zer eskatzen didazun, padre Javier?

—Bai, noski baietz.

—Tematurik?

—Tematuta.

—Itxaron ezazu une bat, ez zaitez hemendik mugi, ez berba egin inorekin.

Pixka batera azaldu ziren biak; polizia presoa kaleko janzkeran.

—Ba al dakik gaur arratsaldean padrearekin orain hemen gauden honetara itzultzen ez bahaiz, hau —hatzarekin seinalatzen ninduela— , seguruenera epaitua eta agian fusilatua izango dela? Gogora ezazue inolako paperik ez daramazuela, naturaltasunez mugitu, bidean errezatu, arratsaldera arte.

Egun haietan banuen auto bat ene erabilerarako. Hortaz, inorekin ez genuen hitz egin beharrik, ez kanpamendutik ateratzean, non sobra eta gehiegi ezagutzen ninduten, ez eta bidean zehar, harik eta bere ama bizi omen zen etxeko atean laga nuen arte.

—Lauetan puntuan jasoko haut, sendia ongi izan dezaala, ama agurtu nire partez.

Seminariora joan nintzen egun-pasa. Herriko kanpoaldean, hiru kilometroetara, Managuako errepidetik, landa betean. Bazter guztietatik arkakusoak astintzen dituen zakurraren antzera, lau esaldi zuzen josi ezinean, gogaiturik, bi minuturo erlojuari begira, zigarro bat bestearen atzetik tximinia huts, karretari banintz ere…

—Baina Javier, zer duk? Ezezagun hago, ez hago ondo?

Egun luze bat, landa baten erdi-erdian, txoririk, lorerik, brisarik, zerurik gabe, oxigenoa tanta-kontagailuz. Lauetan puntuan zain neukan bere etxeko salatxoan jesarrita amaren konpainian. Bai besarkatu nituela. Birika betean arnas hartu nuen berriro. Ordubete berantago entregatu nuen presondegiko bulegoan eta jakin nuen, ahogozatuz, zer den berriro jaiotzea.

Duque Estradaren Entzutegia: goizero sartzen eta irteten zen jende tropela.

—Zer darabilzue hainbeste gizon-emakumeen prozesioekin?

—Epaiketetan deklaratuko duten lekukoak dira.

Zinpeko aitorpenetan testiguak beren oroitzapenak husten, poliziak norbaiten aita, anaia, semea eraman zitueneko gaua, eta geroztik bizirik ikusi ez zitzaiena; batzuei ezta hilda ere; armadako patruila herrixkan sartu eta dena suntsitu zueneko gaua, keetan bildutako errautsak laga zituzten; beste arratsalde hartan... Kontatzen edo hitzetan gogoratzen ez zekienari, mailegatu egiten zitzaizkion berbak, solteak edo esalditan.

Han agurtu nuen lehenbizikoz Carbó Serviáren ama, a ze andere handiaren estanpa!: adats elurtua, planta elegantea, begi triste, gogoratzera behartua eta ahanzteko eta barkatzeko pronto. Han ezagutu nuen Sierra Maestrako guajiro talde bat, urpetik ateratako arrainak denak ere, nekez zeramatenak ikertzaileei erantzutea, zer gertatzen zen, beraiekin zertan ari ziren konturatzen ez zirenak.

“Ordua iritsi da”, esan zidan arratsalde batez Duque Estradak. “Bihar hasiko gara, dataren oharra hartu, urtarrilak 28, eta ez hutsik egin patioan goizean goizetik, mereziko du. Egia, berria zabaltzean, patioa sutan hasi zen, animoak erretzen hantxe. Arratsalde hartan epaiketara eramango zituzten Jesús Sosa Blanco, Pedro Morejón eta Luis Ricardo Grao, Batistaren armadako goi-graduko ofizialak, Sierra Maestran gertatutako ekintzak zirela tarteko. Epaiketa, Palacio de los Deportesen

izango zen, berriki eraikitakoa eta inauguratu berria; Rancho Boyerosen irteeran zetzan, iturri argitsuaren ostean, Santa Catalinako  hiribidearen abiamenean. Sarrera debaldekoa izango zen, mundu guztia zegoen gonbidaturik, gertakaria telebistaz ematekoak ziren.

Patioa benetako labe bilakaturik aurkitu nuen. Alde batetik eta bestetik oihuak txinpartaka, su-etenik gabe, kolore orotan, susmoak, salaketak, mehatxuak:

—Desagerrarazi nahi gaituzte! Gura ditugun abokatuek ordezkatuak izateko eskubidea dugu! Amarik gabeko hiltzaileak dira! `Garbitu´ behar genituen aukera izan genuean…!

Murruetan errebotatzen zuten oihuek, zeru garbi, urdinean aienatzen ziren. Patioak energia ezkor, bihurrituaren antzekoa emititzen zuen, arnas hartzea zailduz. Hitz gutxi ene pasaeran, altzairuzko distirazko begiradak, ukabil itxiak, etendako mugimenduak, baso batean erortzen diren tximisten antzo.

Sosa Blanco erdigune zen multzoraino eraman ninduten. Une horixe arte ez nintzen hasi euren trazuak marrazten neure memoriaren koadernoan. Bere aurpegia lau trazutan definitzen eta grabatzen direnetakoa zela ohartu nintzen. Argala, indartsua, bizar oso beltza, on puskaren begiak, bai, bai, Fidelek kondenatu zuen jada, auzitegiak berriro kondenatuko du, baina bere begiak onberarenak, itzalean hondoratuak, adakera beltza oparokoa bekainen lekuan.

Ikusi ninduenean, nigana zuzendu gabe baina entzuten nion kontziente zela —ez dakit errepikatzen bazuen ere—,  arrats hartan lehoietara jaurtikia izanen zela esan zuen, Erromako zirkura kristauak lez. “Ikusi egin du, edo Quo vadis? filmaz hitz egin diote”, pentsatu nuen. Gutxi, oso gutxi falta izan zitzaidan, argituko nizkion Erroman mila bederatziehun urte atzerago eta Habanan egun horietan izaniko gertakarien arteko antzekotasunak eta diferentziak.

Ordu oso onean irentsi nituen hitzak eta utzi egin nion, berak bere inpotentzia eta mingostasuna errepika zezala, behin eta berriz. Berarengana gerturatu nintzen: elkarri begiratu genion. Intentsuki. Aurpegi hori egun gutxi barru hurbilekoa, laguna, familiarra egin behar zitzaidan. Memento horretan zakarra, urruna, etsaia ikusi nuen. Bere besaburu gainean ipini nuen ene eskua.

—Ez dakit ezertarako balioko duen, baina gaur arratsaldean han izanen naiz, zin dagizut.

# SEI

Gustatuko litzaidake, aita,
ordenatzea ene iragana
pausua eman aitzin,
garaiz egin.
Ongi da.
Kontu egin orain datorrena
dela interesekoa,
ez jada izan zena.
Zure bi eskuak emazkidazu,
kaiku bat osatzen dugu
alde banatatik itxiz.
Hustu bertan ordenuan nahi zenuen oro.
Zure denbora Jainkoaren denboran erortzean,
gure denboraren ez bezalakoa izaki
ze eternala baita,
eskuak ireki eta garbi daudela ikusiko duzu.
Garbiak geratu ziren topo egitean Argiarekin,
argi ororen sortzaile denarekin,
topo egitean Bizitzarekin,
bizitza ororen sortzailearekin
euren berezko espazio eta denborarekin,
Jainkoarekin aurkitzean
Zeinengan denok garen betidanik,
Zeinengandik gizakiaren bide guztiak
abiatzen eta itzultzen diren beregana.
Egin ditugun bide horiek
euren jatorria eta destinoa
zein zen ohartu gabe.
Eta ez da oroitu beharko
galdu genuen denbora
ez eta ahantzi ere
existitzen garela.
Jainkoagan
dena da Argi
eta dena da bizitza.

Duque Estrada kapitainari eskaria egina nion, goizez bere bulegotik pasatzerakoan: epaiketak iraun bitartean bere alboan esertzea permititu ziezadala. Zeren eta sekula ez nintzen prozesu batean izan eta laguntzarik gabe, galderarik eta erantzunik barik, eta margeneko azalpenik ezean, ziurrenik galduko nuela gertatzen zenaren erdia eta gainerako erdia erdizka ulertuko nuela, eta ezertxorengatik ere ez nuen gura halakorik gertatzerik.

Jesús Sosa Blancok, Pedro Morejónek eta Luis Ricardo Graok bezalaxe, hilabete zeraman heriotzara kondenaturik. Santiago de Cubako plaza nagusian gertatu zen, urtarrilaren bigarreneko goizaldean, erritu sasi-sakramental baten barnean, Iraultzak bost ordu, ala sei?, lehenago ezarritako gau-diskurtso amaiezina, lider gorenaren baieztapen hutsezinez mamitua.

Urteak aurrera mugiezin eutsi zaion erritua, harik eta Fidel zahartu eta hatsa agortzen hasi zitzaion arte. Lehen egun hartan, inolako epaiketarik, epailerik, fiskalik, abokatu defendatzailerik eta lekukorik gabe, Fidel Castro Ruzek heriotzara zigortu eta herriaren eta munduaren aurrean agindu zuen Jesús Sosa Blanco, Pedro Morejón eta Luis Ricardo Grao fusilatuak izanen zirela. Lider maximus dixit.

Kubako historiako (Amerikakoa eta mundukoa ere bai, ene ustez) garaipen desfile luzeena eta iraupen handienekoa antolarazi eta protagonizatu zuen Fidel Castrok. Kubako Santiagotik Habanara hamar egunetan. Egunez, gauez, ordutegi barik, aurrez eraturiko programa barik, presarik eta deskantsu gabe. Kuba errepide zentralera irten zen bera igarotzen ikustera, erreberentziazko arretaz entzutera berari, arimak belauniko, orakulu bati, profeta bati, mesias bati dagokion legez.

Castroren eta bere kohortearen Columbiako kanpamendu militarreko garaipen sarrerarekin, eta urbi et orbi zuzendu zuen mezuarekin, ezarrita geratu zen Kubak munduaren eta historiaren ikusmolde berria egiten zuela bere eta bizitza-estilo berritzailea estreinatzen zuena: Iraultza. Protokolo gabezia, trantsizio eta botere-eskualdatzerik ez, ez eta inolako motatako aurretiazko kontsulta, itzulbide gabeko ekintzen indar soilaz.

Ez Jainkoa lekukotzat ipini zuen, ez eta Biblia edota Konstituzioaren gainean eskua jarri. Ez zuen ezer zin egin, ez zuen leialtasunik prometatu ez ezeri, ez inori. Iraultzatik eratorritako legeei men egitea exijitu zien denei. Eta bermatu zuen arerioak suntsituak izanen zirela. Ziurtatu egin zuen laster Kubak eta munduak frogak izango zituela: nola eurak, justuak izaki, epaitu eta zigortuko zituzten Sosa Blanco, Morejón eta Grao gisako asasino odoltsuak.

Lehen egunetan gehiegikeriak egin ziren, garaipenaren euforia eutsiezinezkoaren gainezkatzeak; tamalgarria. Praktika iraultzaileen testurik odoltsuenean ere ezin zezakeen lekurik izan herriaren tribunal bat eratzea bezalako zerbaitek; zenbait hamarnakako, hirurogeita hamar bat sujetu, heriotza zigorra merezi zutenak bere mende jarri, banaka berezituta ikuskatu, zuzenbide irizpideak aplikatu beraiei, epaitu, zigortu eta exekutatzeak… Den-dena arrats-erditik gauerdira, hogeita lau orduko egun batean.

Gertatua zen eta, mundu guztiak jakin zuen, jakin zen zer fortunatu zen Santiago de Cuban, Orienteko lurraldeko hiriburuan, hain zuzen, Raúl Castro, Fidelen anaia-txitaren ordenetara. Munduko periodiko orok erakutsia zuten, zirkuko estanpa bat izango bailitzan, nola erortzen zen zerraldo gabana zeraman jaun bat, bapatean altxatutako paredoian, bere sonbreiruak airean hegan egiten zuen artean; Caibariénen izan zen, Las Villas, oker ez banago. Irudi distortsionatuak ziren eta faltsuak, garaipenaren deskontroleko akats konprenigarriak, benazko justizia iraultzailearen benetako

imajinek ordezkatuko zituena orain. Hori ikusteko zuzendu nintzen ni Kirol Jauregira 1959ko urtarrilaren 28ko arratsaldean goiz.

Begiak erdizka itxi eta Santa Catalinako kirolen jauregiko ateetako jendearen emana ikusten dudan ustea dut: jesarlekuen edukiera erdi-beterik; aldiz, oihuak zirela-eta, lehertu beharrean. Jende gehiago itxaroten zen, askozaz gehiago. Ikuskizun gehiago ere espero zen hala berean. Apika —eta akaso barik—, arratsaldeko bostetan fusilamenduak iragarri balira, emakumezko eta gizonezko, ume, gazte, heldu eta agure-saldoek, batzuk beste batzuen gainean tarrapataka, lekurako sarbideak kolapsatu egingo zituzten.

“Baina dagoeneko Fidelek juzkatu zituen”, pentsatuko zuen jendeak; “epaiketa honek zer berri, original eta ikusgarririk erantsi dezake?”. Ikus-entzunezko gisa, egia esan, nahikoa pisua, geldoa eta aspergarria gertatu zen. Gaua sartzean, antzerki-funtzioa graziarik gabe luzatzen zela bistan zenez, eta hobetzeko trazarik ez zuenez, begiluzeen etxerako desfilea hasi zen.

Bi orduko atzerapenez eratua geratu zen auzitegia, arratsaldeko bostak aldera. Epaileena, matxinatutako armadako hiru komandantek egiten zuten. Euretako inor ez epaile karreraz, ez dakit abokatu edo legeetan peritu, ez dut uste. Akordatzen naizenez-edo, Raúl Chibás eta Sorí Marín hirukotearen parte izan ziren, ez nago oso ziur. Fiskalarengandik ez dut oroipen handirik, bere suhar eta kolera pizte oso ohikoak. Ez zen edonola ere De la Fuente, asteak geroago ongi merezitako “Txakala”-ren gaitzizena irabaziko zuena, bere ankerkeria zela medio.

Showa lapurtu zuena defentsako abokatua, D´Acosta lizentziatua izan zen, iraultza-aurretiko Gerrako Itsas Armadako ofiziala, bere bulego legalera esleitua. Ofiziozko abokatu izendatu zuten epaiketa honetarako, zeren akusatuek ezin zituzten euren buruak defendatu, eta ez zitzaien aukerarik eman norbaiten zerbitzuak ituntzeko, une horretan Kuban halako hori balego. Nor izan zitekeen palestra publikora jauzi egiteko ausardia izan eta Fidel Castrok behin eta berriz hainbeste amorruz kondenaturiko munstroak defendatuko zituen goapoa?

D´Acosta justizia iraultzailearen gauean distira itsugarria ukan zuen meteorito suertatu zen. Norbait gai izan balitz irudikatzeko eta aurresateko honek jokatu behar zuen papera (suntsitzailea izan zen hain goraipatua, emaztegai zuriz jantzia bezain dotore aurkeztu zen justizia iraultzailearentzako), ez zioten deituko. Ez eta ametsetan ere. Munduaren aurrean erakutsitako mostrarako botoia erditik puskatzearen eta showak danbatekoaz eta korri-korrikan, oso gaizki, tximist-ekaitz eta ur-uholdepean amaitzearen arduradun gertatu zen lizentziatua. D´Acosta Lizentziatuaren aurren eta azken emanaldia izan zen.

Hiru jujeen aurrean eserarazi zituzten hiru akusatuak, lider gorenak jadanik kondenatuak. Batzuk eta besteak inguratuz kokatu ziren `errebeldeen´ piketeak euren janzki eta abalorioekin; aurrenik euren Sierra Maestrako `gerlan´ identifikatzeko eta orain garaipenaren folklorerako baliatzen zituzten arrosario haiekintxe; oso tente berauek, arma luzeekin, baionetak puntan.

Geroago, erlojuaren, barreguraren eta desesperazioaren gauean sarturik jada, segurtatu zidaten lehen kalkuluetan horrela zatitu zutela arratsaldea eta gaua: bi ordu akusatuetako bakoitzari eta bere lekukoei galdekatzeko; bi gehiago fiskalaren eta abokatu defendatzailearen alegatuentzat; ordu bat ateak itxita deliberatzeko, bat gehiago sententziaren irakurketarako [Fidel-Raúl-Camilo-Che laukotea presente eta Fidelen diskurtsotxo jakinekoa], beste bat galdutako denborei emana, eta egunsentian, Cabañan ziur aski, fusilatuak izanen zirela.

Sonatuenarekin hasi ziren, Jesús Sosa Blancorekin. Auzitegiko presidenteak mantso berba egin zuen, solemne, keinuka aritu gabe, hitz bakoitzaren pisua erortzen utziz isiltasunaren hutsunean.

—Zutitu zaitez, akusatu hori. Iraultzaren tribunal honek epaitu egin behar zaitu Sierra Maestra inguruko mendietako herrixketan lekututako baserritar xeheen aurka ordenatu zenituen masakreengatik, 1957ko urrian eman ziren gertakariak, fiskal jaunak du hitza.

Nire jesarlekua anfiteatroko altuera ertainean zen, aurkitu nuen jende gutxien zuen zona; ene begiek Duque Estrada kapitaina bilatzen zuten erotu beharrez. Inondik inora ez nuen ikusten. “Etorri behar izan du, hemen izan beharko du”. Fiskala enbalatzen hasi zen gertakarien deskripzioa eginez. Neronen arreta bridatzen saiatu nintzen.

Fiskalaren arabera, 1957ko urriaren 12an, Batistaren armadako koronela zen Jesús Sosa Blancok soldaduen batailoi bat  agintzen zuen eta Quebrada Altako herrixkaren ingurumarian hegazkin militar batetik begiztatua izan zen gerrillari talde bat lokalizatu eta suntsitzera bidaliak izan ziren. Arrats-erdian miaketak ondorio efektiborik ez zuen eman eta tropak atseden hartzeko kanpatzea eta gaua bertan igarotzea agindu zuen; bitartean, bera baserritarren zurezko eta palma orri-mamizko etxoletara iristen zen, erreboltariak non ezkutatzen ziren, non gordetzen zituzten ikertzera.

—Menditar herrixkakoak informazioa ukatzen zutela janda [eta nola informa zezaketen miliziano matxinoen inolako mugimendurik sumatu ez bazuten?, diot], hemen dugun salatuak mehatxu egin zuen: gordetzaile eta konplize modura, etsaia entregatzen ez zuen guztia garbituko zuen. Gaua sartuta ja, tropak kanpatu ziren leku aldean tiro-segidak entzun ziren, ofizial militarrak populazioaren gainera suzko bonbak jaurtiz erantzuteko muntaia baldarra. Diskriminazio gabeko erailketa gaua izan zen, gizonak, emakumeak, agureak, umeak erori zirenekoa. Biziraun zutenak ditugu hemen, gauean ezkutatzeko korri egin zezaketenak…

<<…Euren ezpainetatik testigantza larriak entzungo ditugu, nola ikusi zituzten erortzen familiartekoak, eta bizilagunak eta auzoak, abereak bailiran, gure begien aurrean dugun azpi-gizon honek gidatzen zituen lekaioen atzaparrek hilak”.

Akusatuarentzako heriotza zigorra eskatu ostean, fiskala jesartzean, irreala zen zerbaitek flotatu zuen ene garunean minutu batzuetan: “X arrazoiak zirela medio gau batean zoratu zen gizon bateaz hitz egiten ari al zen? Horregatik agindu al zuen mugitzen zen guztia, gizakiak zein animaliak, hiltzeko? Ala sortzen joan zen legenda zen arazoa, non gaizkiak suzko ezpataren edo suzko bola baten eitea hartzen duen?: dena delakoa izaki arrazionalaren izenarekin eta gau batean eta beste eta beste batean Sierra Maestrako auzoak korritzen dituena bizitza errugabeak segatuz? Errealitatea ala fikzioa da entzuten ari naizena?”, galdetzen nion ene buruari, berau esku artean eusten nuela.

D´acosta lizentziatua labur mintzatu zen. Adierazi zuen kasua ez zuela ezagun.

—Lekukoen zinpeko aitorpenen kopiak irakurri berri ditut, nire defendatuaren bertsioa ezezaguna dut, ez dut berarekin berba egin, testigu guztiak bereizita itaundu behar ditut eta akusatuari galdekatu koadro osatuago bat berreraikitzeko eta nork daki ez ote den Quebrada Altan 1957ko urriaren 12an gertaturikoa baino errealagoa izango.

Lehen lekukoa deitua eta lekukotza emateko aurkeztua izan zenean, ofiziale talde bat begiztatu nuen, Miguel Angel Duque Estrada buru zuela, harmailak okupatzera mugitzen zirenean, ez

lehen lerrotan, ez epaileen, idazkarien, aholkulari ofizialen eta auzitegiaren gaineratiko osatzaileen mahai eta aulkien esparrutik aski gertu. Bi bider pentsatu gabe, beraiengana joateko altxatu nintzen.

Errutinazko agurra. “Nola dakusak hau?”. Berak: “Nobedaderik gabe, orain hasiko da ederto jartzen eta metraileten eta fusilen zarata entzungo dugu”. “Ni, beldurturik, jada amaitzeko deseatzen, etorri izanaz ala ez, etorri beharra neukan, hemen izanen nintzela agindu nien, baina benetan izutua eta nahikoa nazkatua”.

Epaiketaren zati surrealistena eta krudelena izan zen. Baita luzeena eta aspergarriena ere. Lehenik kuriositatea sentitu nuen. Hori ezuste eta harridura izatera pasa zen. Desatsegin eta nardagarri izanez bukatu zuen. Sentimenduak dituen pertsona bati sortzen dionaren antzekoa: sartzen da gurdi bat, zenbait zirkuk bizitzara oker etortzeko zoritxarra izan dutenen izakiekin egin erakustaldietakoa bezalakoa: desitxuratuek eta sortzetiko akatsak dituztenek, batzuei goragalea eragiten die, bestetzuei errukia eta bestelakoei barre-algara dakarkie.

Sierra Maestratik ekarritako lekukoak, zalantza barik, gizaki normalak ziren, bizitzaren eta bere misterioen jakitun, analfabetoak, baina adimenaren dohaina zutenak, barne kaparetasun, elkar komunikatzeko eta erlazionatzeko tasunak eta abildadeak zituztenak; unibertsitateko irakasle batek edota zirujau ospetsuenak beren mailakoekin bezainbat.

Eskenatokiko  kriseiluen eta telebistaren argi-fokuen parean ezarrita, ikusten ez zuten, baina beraien gainean sentitzen zuten jendearen zurrunbilo, oihu eta txistu artean, zeru trumoitsu eta mehatxuzkoaren pean, fiskalaren eta abokatuaren  estuasun  demanda haserregarriaren aurrean, “erantzun ezazu”, “esplikatu hori”, “auzitegira zuzenduz esan”, “argitu”, “ozenago”, “berriro”, “badirudi ez duzula ulertzen”, “altuago esan dizut”…

Bada, guajiro gajo menditar haiek argiek joak, itsutuak, inguratuak, zapalduak sentitu ziren. Beste giro, beste komunikazio-mota batean maneiatu ahal izan zitezkeen. Baina hainbeste argi gabe, oihurik eta urgentzia barik, euren izaerari zor zitzaion errespetuz. Zaraten, mehatxuen eta presaren azpi-kulturara ekarri berri zituzten, eta hor ezin zezaketen funtzionatu.

Pena ematen zuten. Basa-txakur aldraren koskadak euren hanketan sentitzean ihes egin eta zingiran itorik akabatzen diren abelburu bare saldoa legez. Eurekin arrastatu zuten epaiketa, eta urtegi berean hondoratu zuten. D´Acosta lizentziatuak gehienbat muntatu zuen, eta altxatu zen babel hartan, bera izan zen probetxu atera zion bakarra. Zenbat eta gehiago estutu lekukoak bere galdera premiatsuekin, orduan eta duda gehiago, zentzugabekeria eta kontraesan gehiagotan galtzen ziren. Eta geroz eta urrutiago geratzen ziren egia eta anuntziatutako ebidentziak.

Desfileak jarraitu eta lekuko berri bat aurkeztu zuten.

—Auzitegiari begiratu eta neure galderei erantzun: izena, adina, egoera zibila, bizilekua, lantegi edo ofizioa.

Duque Estrada, aldean nuen: sakon arnastu, bizarra ukitzen zuen. “Ea honek goizeko entsegua gogoratzen duen eta ez den galtzen, ez irrigarrikerian jausten”. Ez zuen esan, baina barrutik ziur eransten zuela “eta ez gaituen erridikuluan jartzen gu”. Jakina saiakera egina zutela. Banan bana. Behin eta berriz. Baino ez zitzaien irakasten ari artoa eta yautíak ereiten, baizik eta moldatzen galderez betetako oihanaren erdian, beraientzat abstraktuak ziren galderak, batzuk entzun eta besteak erantzun egin behar, perifrasi bihurrituetan, apenas endelegatu zezaketen lengoaian.

Azken finean, altuera honetan, deskarrilatutako trena zen jadanik epaiketa. Nork daki, beste baldintza batzuetan, telebistaren kamerak amatatuta eta prentsako jendea (etxekoa eta kanpokoa) erretiratuta, agian epaileek erabaki ahal izanen zuten gertaerak sobera eta gehiegi frogatuak geratzen zirena, ez zegoela testigantza gehiago entzun beharrik. “Errudunak dira, heriotzara kondenatzen ditugu, amaitu da epaiketa, amaitu bilera, argiak itzali itzazue, goazemazue”.

Goizaldeko ordu biak aldera auzitegiak etenaldi bat dekretatu zuen, eta deliberatzera erretiratu zen. Epaileen ostean joan zen fiskala. Defentsako abokatua ez zen mahaitik mugitu. Minutu batzuetara deitu zuten Duque Estrada. Ordu erdi beranduago itzultzean, ez dut esango ez nuenik ezagutu ahal izan, baina egiatan aldatua ikusten zitzaiola, beste bat zen. Serio-serio, oso urduri. Nigana etorri zuzenean eta ordu horretan Cabañara joan ote nintekeen galdetu zidan, mugitzerik ba ote nuen. Sosa Blanco fusilatu behar al zuten galdegin nion eta ez zekiela erantzun zidan, Alfonso Zayasen bulegoan itxaron niezaiola.

Koliseotik ateratzean begiztatu nuen azken aldiz bat-batean eginiko epaitegia. Anfiteatroko argiak iraungiak zituzten. Esparruko argiak pizturik zirauten. Abokatuak bere mahaian segitzen zuen, kokotsa eskumako eskuan eutsiz. Hiru akusatuak ere eseririk jarraitzen zuten, geldirik. Bi pausutara zentinelak, berde oliba, arma-luze. Isiltasuna. Misterioa. Eta orain, zer?

Ez dakit nolako akabera ukan zuen justizia iraultzailearen gau-galak Santa Catalinako etorbideko Kirolen Jauregian. Gerorago entzun nituen aldaeren artean, sinesgarrienak zioen iraultzaren hierarkia gorenari zor zitzaion epaiketaren bertan beheratzea: Ché, Camilo, Raúl eta Fideli, deskalabruaren gorabeherak telebistaz jarraiki zituzten horiei. Era berean entzun nuen erabakia ez zela aho-batez eman, ba omen zen aholkatu zuenik, epaiketa eten arren, gau hartan bertan fusilatu zedila Sosa Blanco.

# ZAZPI

Egun on, Jainko Jauna.

Cabañako

Heriotzaren Galeratik.

Ez haut ezagun, ez gaituk ezagun.

Bataiatu ninditean,

baina sekula ez zidatean

hitaz hitz egin.

Aurkeztuko nauk.

X.X. nauk.

Ene izenak ez ziok axola inori.

Entzun diadan haizen hori bahaiz

Jakin behar duk. Banoak.

Astebete hona ekarri nindutela.

Espazio ilun eta zikin bat, estua,

non ez dakidan nola, baina ikusten diat,

iragan argiak itzaltzen doazkidan

eta zuri bat pizten ari zaidan.

Oso zuria,

arima barnean.

Beti pentsatu izan diat bizitza

bizitzeko zela eta bizitzea

puskarik hoberena ebakitzea zela

`ron, mujer y canto´ hirukoari.

Aitonaren eta aitaren memoria

ondratzeagatik hartu nitian armak,

ez deiadar berezia jarraitzeagatik.

Banekian kuartel barru eta kanpotan

gauzak txarto, txartoago zebiltzala.

Eta zer egin nezakean nik?

Egia duk behin baino gehiagotan

eskua joan zitzaidala,

baina ez diat uste

inor hiltzera heldu naizenik,

ez behintzat intentzioarekin.

Baina ez zihoak hortik, Jainko Jauna,

hiri esan nahi niana.

Gauero zetorkiguk guganaino

abade gazte bat.

Berba egin, erre, erantzun

egiten dizkiogun galderei,

ez erabat, nik ikusten diadanez,

kaltetu gaitzakeena isiltzen ziguk,

ipuinak kontatu eta barre egiteraino.

Istant batean, Hitaz, Jesusi buruz,

Ebanjelioaz hitz egitera saltatzen dik,

eta Aita Gurearen berbak argitzen zizkiguk,

hire maitasuna dela, hire borondatea, hire erreinua.

Gero arrosarioa errezatzen ipintzen gaitik.

Nik ez zekiat otoitz egiten,

ezpainak  mugitzen dizkiat

errezatzeko imintzioak eginez,

eta ene arima kolpa dezaten uzten diat,

behin eta berriz eta berriz ere,

kanpaiaren brontzezko ahotsarekin

ene kideak behin eta berriro

errepikatzen didaanean

“orain eta gure heriotzako orduan”.

Oharkabean entenditzen hasten nauk

bizitza honen ertzera ibiltzearen esanahia

eta konturatzen hasten nauk

zubi bat behar dudala

beste bizitzaren ertzera

eramango nauena.

Jainko Jauna, egia al duk

gure zain egongo haizela han?

Kasu horretan lagunduko hidake

zubia altxatzen, nik nire aldetik

eta Heuk heure aldetik?

Horixe espero diat.

Aita Jaungoikoa:

Cabañako Heriotzaren Galeran

behar, deitzen, maitatzen haugu.

Hire, X.X.

Habana lo zegoen isiltasunean bildua eta argi-itzal zuhur baten pean, neoi arranditsurik ez apenas, argi horizta bat. Hegotik iparrera zeharkatu nuen, nora nindoan jakinik eta bidea luze, luze egin zedin deseatuz, gaueko zeruaren azken itzaleraino, “azken punturaino ez nazala entregatu sekula”. Kezkak inbaditua, galtzeko gogoarekin eta ez iritsi inoiz. Galdera obsesibo bat buruan: “Zer esaten diot Sosa Blancori bakarka aurkitzen garenean? Zer esaten da halakoetan?”. Zer esanen nion Aita Melori, egunero hiltzear denaren eta bere `arreba´ Herio damaren, jasotzera datorkionaren, arteko aurkezpenak egiteko trantzea bizi ohi duenari? Cabañara ailegatu eta galderak ene garuna kolpatzen segitzen zuen. Inondik ez zen ageri arrapostua. “Zer esaten diot, zer?”.

Geroxeago eskuburdinez loturiko presoak iritsi ziren, ofizialak, soldaduak. Atetzar berdea isiltasun osoz zeharkatu zuten. Patioa hutsik zegoen, argi erdi-moteleko fokuak zutoin batean, galerak hertsiak, ilunpean, mamu gris batzuk burdin hesiak oratuz. Alfonso Zayas egin zen segizioaren kargu. Portoiaren aldameneko atetik sartu gintuen kaperatxora, korridore estu batetik hartu, pareta biluziak, pareta biluziak, alde banatan ate itxiak, eta azkenean, ezkerretara joz, trantsitu oso laburra eta lau ziega beltz alboetan, burdin sareak, bonbilla bat sabaian, argi iluna, lokatzezko modukoa, eta ondoan leihatila bat horman; haren atzetik gaua asma zitekeen.

Eskuinerako lehen ziegan gelditu zen. Luis Ricardo Graori besotik heldu, esku-bilurrak kendu, barrura pasatzeko esan, atea arrimatu, morroiloa korritu eta giltzarrapoa kolpe batez trankatu zuen. Pausu eta mugimendu berberak errepikatu zituen ezkerretarako lehen ziegan eta Pedro Morejón zarraturik geratu zen. Eskumako aldeko bigarren ziegara beste bi urrats, Jesús Sosa Blancori esku-burdinak jaregin eta ezer esateke sartu zen hau. Zayas kapitaina niregana zuzendu zen: “Sartu behar…?”. “Bai”. Atea irekita geratu zen gure atzealdean.

Elkarri begiratu eta ezer esan gabe, naturalki, besarkada batean lotu ginen. Indartsua. Luzea. Mutua. Bere taupada oldartsuak sentitzen nituen. Berak nireak sentituko zituen. “Fusilatu egin behar naute”, esan zuen segidan. “Uste diat ezetz, epaiketa ez duk akabatu, ezin haute exekutatu”, erantzun nion. “Baina egin dezagun berba beste zerbaitez, errezatzen badakizu?”. “Bai”. “Ba, goazen elkarrekin otoitz egitera, poliki, ez dugu presarik, aurretik noak ni eta hik segi”.

“Gure Aita zeruetan zarena… santifikatua izan bedi zure izena… etor bedi guganа zure erreinua… egin bedi zure nahia… zeruan bezala lurrean ere… emaguzu gaur egun honetarako ogia… barkatu gure zorrak… guk gure zordunei barkatzen diegunez gero… eta ez gaitzazu tentaldira eraman, baizik eta libra gaitzazu gaitzetik”.

Gure Aitari Agur Mariak, Jesukristo gure Jaunak, Salbeak jarraitu zioten. Amaitu genuenean, “beste behin”, eskatu zidan. Zenbait alditan errepikatu genuen. Esan genitzakeen hitz guztiak, galdera eta komentario guztiak soberan zeuden, loturik jarraitzen genueneko besarkadak eta errezoak askozaz gehiago zioten. Ez dakit zenbat denbora botako genuen horrela. Asko izanen zen.

Bat-batean, argi samur, esnetsua, sumatu nuen, urtarrilaren 29ako goiztiriarena zen. Irristatzen hasi zen itsumustuka, beldur bailitzan, korridoreko leihoetatik. Leun samar kolpatu zidaten bizkarra. Begiratu eta argazkilari bat ikusi nuen mugitzen posizioak bilatuz bere kamerarekin eszena harrapatzekotan. Klik batzuk egin zituen, flasharen distirak istant batzuz lekuaren zekenkeria, beltzunea, hutsunea, pareten biluztasun zikina ikusten laga zuen.

— “Padre, bedeinkapena emanez bezala”, intsinuatu zigun argazkilariak. Sosa Blancori, `zer deritzozu?´ lako keinu batez so egin nion. Eskua altxatu nuen bere aurpegi parean gurutzearen seinalea airean trazatzekotan. Argazkilariak unea harrapatu egin zuen bere zeluloidean. Gerora anitzetan pentsatu ohi dut argazki-sesio hura galarazi egin behar nuena. Errespetatu behar direneko mementoak dira, bizi direnen jabegokoak, ez beste inorenak. Biharamuneko Diario de la Marinaren orrietako agerraldia, non Jesús Sosa Blanco eta aita Javier elkar besarkatzen, errezoan eta bedeinkapenak banatzen, bi kristau on gisara, heriotzaren bila ibilian, Jaungoikoaren borondateari men eginez, gustu negargarrikoa izan zen, zantarra, ez onesta. Mila bider damutu naiz argazki horietaz

eta sekula santan ez nituen gorde gura izan. Ché, ordea, bere ahotik jakin nuen, poztu omen zen erreportaje grafikoa ikustean. Ez zidan esan zergatik.

Zayas kapitainak deitu ninduen. “Esan berri didate momentuz fusilamendurik ez dela izango”. Sosa Blancori esateko itzuli nintzen “. Pixka bat lo egiten saiatu zaitez. Eguerdirako bertan izanen nauzu”. Oso triste erretiratu nintzen. Ez nintzen Habana Zaharreko ene komentura ez eta Casablancako parrokiara joan. Harresiraino ibili nintzen. Itsasoari begira eseri nintzen eguna esnatzen ari zenekoan. Bihotza norbaiti oin edo esku bat txingurritzen zaioenekoan bezalatsu, odol irrigazioa dela-eta. Garuna erabat hutsik.

Ziega, leotza, kalabozoa, zulo estua. Hori guzti hori eta askoz gehiago. Baina ilunabarrerako larruz barru heriotzara zigortutako hiruak, larruz kanpoko sententziaren zain zeudenak sartu zituzten ziega ilun, zikinak, Heriotzaren Galera bataiatu zituzten.

Gogortu edo leundu zitzakeen gehigarri barik. Sinple-sinpleki Heriotzaren Galera zeren eta bertara eramango zituzten Cabañako gotorlekuan ezarritako auzitegiek epaitzen eta heriotzarako erruduntzat jotzen zirenean presoak; bertan biziko ziren azken egunetan, bertan deskubrituko zituzten bizitzaren eta heriotzaren zentzu eta hodeiertz berriak; bertatik aterako ziren paretatzarraren bidera heriotza sententziak berretsiak izan eta fusilamendu pikete batek exekutatu zituzten berrogeita hamabost gizonak, 1959ko otsailetik maiatzerainoko bitartean.

Heriotzaren Galerak, hiru lagun ziega bakoitzeko, eta giza azpiko baldintzetan, hamabi pertsona ere har zitzakeen. Mahairik, jesarlekurik, kamainarik edo koltxonetarik, ur hartunerik gabekoa, komunik ez, lohikeriak hustu ahal izateko balderik gabe. Bataz beste, beraien bizitzako azken zazpi egunetan ukan zuten bizilekutzat. Egunak eta gauak izan ziren lau ziegetan hogei lagun baino gehiago pilatuta biziko zirenak. Alboko komun-ontzi batera gidatzen zituzten eguneko bi alditan. Erizaintza zerbitzurik ez zitzaien eskaini, inor ez zen artatua izan ez barruan ez kanpoan osasun arazoak medio. Behin Heriotzaren Galeran, inbidia ederra izan zezaketen euren zerri-kortetan ziren zerriei.

Beraiengandik despeditzerakoan prometatu nienez, eguerdian itzuli nintzen. Erabaki batzuk hartuak nituen eta lehen unetik ongi ulertua izateko interes handia nuen, agurrak eta: “Zer moduz zaudete? Jatekorik ekarri dizuete? Zerbait lo egin ahal izan duzue? Zuen senitartekoek zuen oraingo egoera ezagun dute ja? Nik erraztu dezakedan zerbait baduzue?”, galderak zailtasunik gabe atera eta soinu familiarteko eta lagunkoiak sortzen joan ziren, hori iruditu zitzaidan. Askozaz gertuago eta bigunago sentitu nituen, patioko irakindegian nahasturik zebiltzanean baino. Benetan, zoritxarrak elkarrengana gerturatzen ditu gizonak, nola eta ez duten harrizko bihotza.

—Zuek gura baduzue eta eskatzen badidazue, egunero igotzen naiz ni eta zenbait alditan egunean, goizez, arratsaldez, gauez, esanda utzidazue. Den-denaz hitz egin genezake, bi gauzaz salbu: politikaz eta zergatik zaudeten hemen. Pribatuan esan gura badidazue, zeuk ikusi, baina niri ez zait interesatzen. Abade naizen horregatik norbaitek pentsatuko balu gustuko nukeela nirekin kofesa zaitezten, zeharo oker dago. Gehiago, nik ez zaituztet gonbidatuko aitortzera. Norbait egitekotan badago, esan diezadala eta nik erraztuko diot nola, bilatuko dut etortzeko prest dagoena eta kofesatuko du. Ez dut uste berripaperak ekartzera baimenduko nautenik, baina igo aurretik irakurriko ditut, baldin eta jakin nahi baduzue kanpoan, kalean, pilota parkeetan, munduan gertatzen denaz. Sendiari edota nornahiri idatzi edo berarekin nik berba egitea gura duenak, jakizue zuen erabateko esanetara nagoela. Oroz gain, ez dugu elkar ezagutzen, baina zuen lagun izan nahi dut, nigan fida zaitezkete.

Kostako litzaidake sinestea, neure buruari entzungo banio. Nondik sortzen zitzaidan hau?, atzo bertan ez zitzaidakeen otuko hala hitz egitea. Zimenduetan zerbait lekualdatua zen, zeren zin dagit zintzoa nintzela, esaten ari nintzena sentitzen nuela.

Beste erabaki bat ere hartua nuen, berorretaz deus esan ez banien ere. Exekutatuak izan behar zirelako nengoen han, ze segurtasun osoz, ziega hartatik bizirik irteteko bidea paredoikoa zen,

beraiek eta neuk ere bagenekien, inork ez esan arren. Baina neuk saihestu egiten nuen heriotzaz hitz egitea beraiei. Heriotza gizonaren bekatuaren ondorio moduan, batik bat kondena eta sufrikario eternaleko ate gisarako erreferentzia egitea, baldin eta bekatu madarikatua ezpada apaiz batek emandako absoluzioarekin aurretik ezabatzen. Datorkeenaz ere ez nuen deus gura esan nahi, nork daki zer datorren heriotzaren ostean?

`Gogo-jardunetan´ bildutako jende multzo bati, esate baterako, gogora liezaioke bizidunoi gerturatzekoa zaigula heriotza eta hau biltzen duen misterioa, eta aurresan behar zaie lege ekidinezin hori onartu eta enkontrurako prestaturik bizi behar dena. Baina ez Heriotzaren Galeran, ez nik. Apenas asma nezakeen hori adierazten ene buruari. Bi sentimenduk egiten zuten talka nire barnean. Onartzen nuen ezer ez dela bizitzan hain seriosa, inportantea, dramatikoa heriotza lakorik eta onartzen nuen halaber heriotzaz predikatzen genuena irudimenaren eta beldurraren produktua zela, hain zuzen ez genuelako ezagutzen zer gertatzen zen heriotzarakoan eta haratago.

Jainkoari buruz ere ez nien hitz eginen, ene ekimenez behintzat. Eurak aurreratu beharko ziren eta beraiek egiteko eskatu arte itxarongo nuen. Baina ez zen berba eginen Sinaíko Jainkoaz, jeloskorra eta zorrotza, juzkatzen duena eta zigortzailea den horri buruz ez nintzen arituko, ez jainko arbitroaz, jainko kontaduriazkoaz, hoteleko atezainaz, baizik eta bilatu, zain izan, barkatzen duen “artzain onaz”; “gurutziltzatu ezazu, gurutziltzatu” entzun behar izan zuen Kristori buruz, heriotzara zigortu eta barkatuz gurutzean hil zenari buruz baino.

Baina bere orduan. Ez nituen itoko. Jainkoa, heriotza bezalaxe, bidera irtengo zen, topakor egingo zitzaigun. Eta ez nuen duda izpirik, Jainkoak, berbarik gabe, Berataz ene hitzekin egingo nien baino hobekiago egingo zuela.

Gau hartan bertan Jesús Sosa Blancok elkarrizketa bati probetxua atera zion, zerbait errezatzeko eskatu zidan, aurreko gaueko otoitzak asko baretu zuten, askoz hobe sentiaraztea lortu zuen. Eskatu zidan gainera otoitzekiko liburu edo foiletoren bat ekartzeko, bere etxean umetan bere amak errezatzen erakutsi zionez; etxetik atera gaztetxotan lan bila eta kuartelean aurkitu zuenean, otoitzez ahaztu zen; egun, bere emazte-alabak katoliko on ziren, eta etxean errezatzen zuten, nahiz eta berak ez esku hartu. Ez zidan belarrira esan, ahots xuxurlaz. Denek entzun zuten, lankideak eta guardian ziren milizianoek.

Luis Ricardo Graok, Cienfuegoseko anaia maristen ikastetxeko ikasle-ohi zenak, arrosarioa errezatzea proposatu zuen. Pedro Morejónek ere baiezkoa. “Zuek gura duzuena, niri berdin zait”. Horrela ezarri zen Heriotzaren Galeran, euren ekimenez, gaueroko arrosarioaren errezoa. Eguna despeditzeko, loaren atariko, haraindikoarekin, Jainkoarekin harreman egitekoa. Gau ugaritan, arrosarioa amaituta, galderak egiten zizkidaten ezbaiak argitze aldera edo informazioa jasotzearren, edo Jainkoaz, erlijioaz berba egitearren, sinple esanda.

Egun batzuetan lasai egon zen galera. Bere argi-itzalera, murruen jario jelatu eta goibelera eta zoru zikinera ohitu ginen, mila mugetara. Sosa Blancoren emazte Ameliaren eta bere bi alaba nerabeen arratsalde erdiko ohiko presentziak argi eta gozotasun punttu bat ipintzen zigun. Marcialek, kartzelako zaintzara egokitutako milizianoak, beraien babesle eginda, itxaron egiten zituen eta molestatuko zituenik ez zen. Zirraragarria zen Sosa Blancoren esku latzak burdin artean pasatzen ikustea “ene ninien” muxajeak ferekatzeko, bere bufalo-aurpegia eta kalparra samurtasun belar-zelai bihurtzen ziren bitartean.

Nahi gabe, Jesús eta bere emaztearen hizketaldi labur bat entzun nuen:

—Amelia, mesede bat egin behar didazu; gogoratzen urte amaierako festarako erosi eta estreinatu ez nituen zapatak? Ekarri iezazkidazu, baina nexkak ohartu gabe.

—Zertarako nahi dituzu, hemen zaudenetik dauzkazunak ere jantzi ez dituzunean? Beti oinutsik zaude-eta.

—Fusilatuko nauten gauean estreinatuko ditut.

Ameliak aparte hizketa egiteko eskatu zidan, bera eta ni bakarrik.

—Badakit esan diezula ez zaizula axola jakitea zergatik dauden hemen. Imajinatzen ditut zure arrazoiak eta errespetatzen ditut. Baina nik bai gura dudala zuk jakitea nire senarra ez dela hortik dioten munstroa.

Kontatu zidanez, bere senarra ez zen astebete ere destinatua egon Sierran. Ailegatu eta hurrengo egunean mendiko puntu batean kokatzera zuzendu behar zen tropa bat agintzen zuen, gerrillariek aurkitu eta segada egin zietenean eta zenbait gizon galdu zituzten. Herrixka batean gorde ziren matxinoak jazartzean eta baserritarren kolaboraziorik ez ukaitean, gehiegikeria batzuk egin ziren, gauza nahikoa normala halako egoeretan, inola ere ez kontatzen den masakrea. Bizpahiru egun geroago destino berria jaso zuen, irlako beste muturrera eroan zuena, Pinar del Rio probintziako San Luisera.

—Esadazu ea astirik izan zuen esleitzen zaizkion basakeriak egiteko? Neure senarraren bihotza ez dator bat bere gizon ankerraren aurpegierarekin. Baina demonioak sortu beharra zeuzkaten eta Merlo Sosa delako baten ospe ezin txarragoa nire senarraren sorbaldara erori zen. Zuk hori sinestea nahi dut, niri sinesteko eskatzen dizut, bera ona da.

Sinetsi nion. Zinez, sinetsi nuen.

Goiz batean Pedro Morejón esku-bilurtu eta ziegatik atera zuten. “Columbiako kanpalekura daramagu, aurreko gauean etendako epaiketa jarraitzera doanera”. Parrokiara abisatu ninduten, ordu hartan eurak ikustera igotzeko prestatzen ari nintzela. Bat-batean irten eta bidean harrapatu nuen jeepen karabana. Eurekin sartu nintzen barruti militarrean. Epaiketa Camilo Cienfuegosek presiditu zuen. Berrogeita hamar lagun apenas kabitzen ginen salatxo batean.

Prentsa ez zen gonbidatua izan. Ordu pare batean ebatzi zen gaia. Ate itxiko deliberazioak ezta hori ere, esaldi bat idazteko, makinatxora pasa eta sinatzeko hartzen den beta. “Tribunalak egozten zaizkion delituetan errudun aurkitu eta heriotzara zigortu du. Bilera amaitu da”. Eguerdirako itzuliak ginen Cabañara.

Egun batzuk geroago Luis Ricardo Graorena izan zen txanda. Jesús Sosa Blanco izapide berberetik iragan aurretik, Cabaña berbereko auzitegiek ekin zioten eta Heriotzaren Galerak ateak ireki zituen maizter berrientzat. Espazioa murriztu zen gizon bakoitzarendako. Estuasuna hazi egin zen haien guztien arimetan.

# ZORTZI

Beti zen gauez,
sekula ez zen goiz argitzen
Cabaña kartzelako zoko horretan.
Argia eta eguna gezurra ziren
leihotik burua aterata.
Gelatina zikin eta eranskorra ziren
arimaren azalera itsatsita.
Gogorra, hotza jartzen zen
portzelana bat legez.
Galerako sabai-leiho ondotik,
hobia eta kanpa.
Haratago, ozeanoa eta zerua.
Gero, ezereza.
Izarrak harea-aleak dira
infinituki urrunak
gau lodiaren geruzan.
Murruak eta zoruak izerditzen
beldurra Heriotzaren Galeran.
Nehork ez daki
itzaleko itzalak ote diren
ala paretak hitz egiten duten.
Ez dira ahotsak, ez hitzak,
mamuen esanak dira.
Otoitzek ur-tanten soinu dagite
isiltasuna barrenatuz
eta behean espero dien
putzuan eroriz.
—Pater, han izan al zara zu?
—Ez, zergatik?
—Izan bazina lez entzuten zaizu.

—Ez oraindik.

—Oso urrunetik iritsi behar zaizkizu
hitzak, hutsak sumatuko zaizkizu.

—Goazen, zain dauzkagu.

Batzuk mugitzen dira, bestetzuk gelditu.
Begi batzuk negar, bestetzuk sutan dira.
Atzean uzten dugu kartzela.
Galerako gauetik
Paredoiko gauera.
Azken eskaria, azken besarkada.
Zein luzeak minutuak, ze beltza ordua,
zein hauskorra argia, ze hezea itzala.
Gau bat eta beste bat.
Eta gauak ariman ostatu
hartzen amaitu zuen.

Ez dut gogoan otsaileko zein egunetan geunden, ez eta astelehen, astearte ala asteazkena zen. Gogoratzen dut, aldiz, eta arimaren paretetan piro-grabatuan inprimaturik daramatzat arratsalde hartan eta gau hartan bizi izan nituen uneak eta kontaezinezko estualdi larrien eszenak.

Goizeroko errutina zaharra. Goiz-albaren lehen argiarekin, Amargura kaletik sigi-saga, San Ignaciokotik, katedraleko plazatik, tenpletetik, badoazen eta badatozen txalupetaraino, badatoz eta badoaz, malkotan batzuetan dantzan bestetzuetan, Habanatik Casablancara, Casablancatik Habanara. Goiztiriaren argi gardena, brisara goiztiarra gozatzea, goiz zaleen ahots lokartuak, hiria ametsetik irteten hasten den eta nagiak ateratzen dituenekoa. Lantxarekin itsas besoaren olatu laburrak nabigatzea portura  arribatuz, irudimenaren eta desioen itsaso zabaletan sartuz. Mantso, mantso igo parrokiaraino. Zazpiak puntuan aldarera atera meza ematera. Moja abituekiko sei beatentzat eta kaleko arropazko beste hainbesterentzat.

Goizerdiko errutina aste batzuk lehenagotik aldatua zen. Lehen parrokian geratzen nintzen, nahiz eta ez izan zeregin handirik, eguerdi arteraino. Orain, notiziaz blaituta han goran espero eta desespero arteko entzerratuei berriak jaurtitzeko asmoz, bederatziak jota igotzen nintzen Cabañara, hamarrak baino lehen.

Ordu horretan Entzutegi militarreko atea parez pare ireki aurretik nindoan oinez, deitzen didatela entzuten dudanean.

—Pater, pasa zaitez mesedez une batez, zer berba egin badugu.

Harritu ninduen. Normalean, gure topaketak kasualak ziren, elkarrizketak legez, informalak. “Solas egin?, bada, zer dauka niri esateko? Esku artean zerbait itsusia dakar”.  Justizia iraultzailearen praktika bide hoberenetatik eramateko animoaz zela, heriotza-zigorreko sententzia oro automatikoki berrikusiko zena, bazela sententziak leunduak izateko aukera beraz, x kartzela-urte paredoiaren ordez, esaterako; bart gauerdian Pedro Morejónen kasua aztertu zenekoa, tribunal horren buru Ché izan zelakoa, “eta zuk badakizu nolakoa den bera…”.

“Bai, bai, baina esan ezak behingoz niri esateko daukaana”.

—Sententzia berretsia izan zen eta gaur gauean eraman behar zaio paredoira.

—Uffffa…! Eta nola hartu du berak?

—Berak ez daki ezer oraindik.

—Nola ez dakiela ezertxo ere? Eta noiz pentsatzen duzue esatea?

—Zure etorreraren zain geunden, berarekin berba egin dezazun.

—Zeer?! Nik komunika diezaiodala? Halako zeraren bat akaso: animo Pedrito, gaur gauean ematen dizugula zerurako pasaportea!  Baina erotuta al zaudete?

—Pater, faborez, ez zaitez hola jarri, hitz egin dezagun lasai.

—Aizak, Miguel Angel, joan behar den lekura joango nauk ni berarekin, baina nik ez diat epaitu ez eta kondenatu, eta ez nagok prest beste batzuk erretzen ipini zituzten gaztainak surtatik ateratzeko, horixe bakarrik falta genian.

—Eta zer egiten dugu?

—Ah, eta niri galdetzen didak? Zuek jakingo duzue zer egiten duzuen.

Eguna izorratu zitzaidan, a ze nazka, “baina hik bahekien edozein unetan ibaiak honokoan itsasoratu behar ziala, ez duk hala? Joño, bai, baina ez hola”. Nola edo hala aurre egin, oihu egiteko gogoa izan eta leun-leun hitz, irribarre egin, eta horretarako begien atzeko partean gorde tximistak; “zer moduz hago” esan, “izorratua eta aski izorratua hago” esan ordez, “gero arte” adierazi, gau hau beti-betirako izanen denean egiazki.

Heriotzaren Galerara iritsi nintzen, eskua luzatu eta banan bana itaundu nituen: “Zer moduz hago?, Bart hobeto lo egin duk?, Ze ona, ondo da, gaur bertan ipiniko dut postan”; berarengana iritsi nintzen arte eta ez nuen begietara garbi begiratu eta bere begirada eusteko balorerik izan. Zerbait hitz egingo genuen taldean, ziur, baina ez dut akorduan zertaz ez eta ze interesekin, ez nengoen horretarako. Bisita laburra, “Gero arte eta banoa”, ez nuen agoantatzen barnean sortu zitzaidan ekaitza.

Arratsaldeko hirurak aldera itzuli nintzen. Entzutegian sartu nintzen lehenik:

—Ba al daki?

—Ez. Noiz pentsatzen duzue esatea?

—Pater, zergatik ez zoaz eta zerorrek esan?

—Niri egitea dagokit? Ez. Nori dagokio?

—Alfonsori edo neuri.

—Ba, zoazte biok eta egizue behin-betikoz egin beharrekoa, ez dago eskubiderik orduak pasa eta gizonak ez jakitea oso gutxi geratzen zaizkiola, hau ez da justua.

—Pater, mesedez.

—Kaka!

Azken ziega-aldaketan, “hi hemen, heu han”, Pedro Morejóni Luis Ricardo Graorekin konpartitzea tokatu zitzaion. Beraien viacrucisa elkarrekin ibiliak ziren, elkarren intimitateak ezagun zituzten, giharrak gogor eta ez hainbeste arimakoak. Hobe oraindik Jesús Sosa Blanco beraiekin ipinia izana. Burdin hesiaren parean plantatu nintzen. Grao kexu zen, ez dakit zein eritasunez, egunetik egunera okerragora, denbora gehiena zoruan etzanda ematen zuen. Burdinsarera hurbiltzeko eskatzen zion Morejóni. Bere eskuetako bakoitzarekin barrote banari heldu zion. Bereen gainean ipini nituen nireak nik.

Ahotsik barik ia, berak soilik entzuten ahal zidala, gertatu zena esan nion, sententzia berretsia izan zenekoa; zergatik komunikatzen nion nik?; bada, pentsatu zelako horrela akaso kolpea ez zela izanen hain bortxagarria, fusilamendua gau horretan izango zen, eta berak nahi eta eskatuko balit, berarengandik ez nintzen aldenduko, harik eta ordua iritsi arte; eskariren bat adierazi edota azken orduko mesederen bat, konfiantza osoz egin zezala eta berehalaxe mugituko nintzela, onartu ziezaioten arte.

Isiltasunean entzun zidan, begi itxiekin, zurrun gorputza, burua erdi-makurtua. “Gau honetan hortaz”. Bi edo hiru hitz, agian beste batzuk izan ziren, esan zuen guztia horixe. Inork ez zuen txintik ere ateratzen, konturatzen ziren dudarik gabe, giroan larria zen zerbaitek flotatzen zuela. Minutuak luze egiten ziren. Sakon hatsa hartu eta bakarka egon nahi zuela agertu zidan, eta inork ez ziezaiola eragotzi. Neure aldetik esan nion Casablancara jaitsiko nintzela eta elizako arratsaldeko funtzioaren ostean itzuliko nintzela, zera arte geratuz…

Pasabidetik ateratzean, istant batez, ate bat ireki eta kabareteko kirats bafada eta zarata hautsaldia irten zen handik, ahots alaiak eta hondoko musika barne. Kolpetik itxi zuten ikusi nindutenean, heriotza haraindiko agerpena, abadez jantzitako mamu bat. Norbait, pentsatu izango zuten, eurak ala ni, leku erratuan, ordu erratuan zegoen. Korridoretik paseatzen ziren milizianoak, Heriotzaren Galeraren zaintzaz arduratzen zirenak kontatu zidaten zein zen kontua.

Milizia erreboltarietako komandante bat, oso ezaguna berau Batistaren aurkako erresistentzia zibileko lerroetan, bizi alaiaren oso aldekoa eta arazoak sortzen ari zena behin eta berriz, kaleko eskandalu batean atxilotuta ekarri berria zuten atxurtua, mozkorra pasatu eta alkohola joan zekion Cabañan. Berarekin batera hiru emakumetxo eta beste hainbat whiski botila ekarri zituen.

“Zeru santua! , badirudi gaurko eguna sortu dela gauza arraroak bertatik paseatzeko, horretara joango bagina asmatzeko zailak, pentsaezinak. Eta bitan pentsatu gabe, hobe esanda segundo-milaren bat ere galdu gabe, atea ireki eta mini-kabaretean sartu nintzen: mahai bat, bi aulki, ohe bat, disko-jogailua berde olibazko gizon bat, musugorria, begietatik irribarre inozoa zuela zintzilik, begialaia, hanpadura oparozko eta arropa eskaseko hiru neska.

—Ei, abadetxo politta, trago bat hartu, gurekin edan ezazu.

—Eta zer ospatzen duzue?  Errebolusioaren garaipena?

—Eta zuk?

—Hemen nago ni, ze hor, pasabidearen bestaldean —asko harritzen nau ez bazaizu horretaz ohartarazi— hiltzera zigortutako gizon batzuk euren bizitzak amatatzen bai dakuskite eta horietako bat gaur gauean bertan fusilatuko dute.

—Ooooo…

—Ez duzue uste gutxienez hemengo labea ez dagoela opiletarako? Zuen jaiak ez dirudi irain?

Ez ziren beren ekintzen, keinuen eta hitzen jabe. Lotsamangarria. Euren barre-iduriak musuetan jelatu zitzaizkien.

—Ba, topa egin dagigun haien osasun eternoagatik!

Ez nion zaplaztako bat eman komandantetxoari ze une horretan, kanpoan bazen ere, hurbil samar halere, oihu ikaragarriak entzuten hasi zirelako: padre, padre, arin, arin!

Instintiboki ezkerretarako lehen ziegara korri egin nuen, Morejónenganara. Batera segitzen zuten garrasika, zaindariak eta presoak; Pedroren gorputza eskegirik zoruagandik oin bat eskasera, burdin hesiaren bestaldean, beroni erantsia. Eskuak sartu tartetik, belaun paretik heldu, gorputza altxatu ahal nuen guztia, Graori oihuka hots egin laguntza eske eta orduan sentitu nuen berak pisuari eusten ziola, “matxetea emadak, matxetea!”  ozen aldarrikatu nion gertueneko guardiari, “aulki hori, ekar ezazue hona aulki hori!”.

Asentura igo eta urkatzeko erabili zituen izara-zerrendak ebaki nituen. Gorputza beruna gisara jausi zen zorura, hildako baten modura. “Giltzak, nork ditu giltzak?, azkar ekarri giltzak, goazen, ate hori ireki! Norbaitek badaki ahoz-ahoko arnasketa egiten?”. Ziega barruan jada, Morejón besoetatik oratu eta astinduak ematen hasi nintzaion, pentsatu gabe hori ote zen ala beste zerbait egin beharrekoa. Luis Ricardo Grao, bere kidearengana makurtuta, haren ahoan bere hats pixka bat puzten saiatu zen.

Bere onera etorri eta arnasa bueltatu zitzaionean, segundo batzuk baino gehixeago behar izan zuen gertatzen ari zenaren kontzientzia osoa berreskuratzeko, amets sakon batetik iratzarriko bailitzan. “Zergatik egin didazue hau?”, kexatu zen, begiak eta ahotsa Heriotzaren Galerara hurbilduz, negar gura zuela zirudien.

Iraindu banindute, aurpegira listuka egin balidate legez. Ene mihian ahal nituen lazkeriak kontzentratu eta bere hitz berak errepikatu nituen: “Zergatik egin diguk hik hau?”.

Baina ez nintzen hor gelditu. Esklusak altxatu eta kanpora bultzatu nuen ur-bilduan metatzen ari zitzaidan lokatz guztia, urtegi bihurtzen ari zena. Despitaz, zaputzez, porrot sentimenez.

—Zer uste huen, horrek ausart, goapo, arra bihurtzen hinduela? Bada, laga iezadak esaten ezetz, horri eskapea esaten zaiola, eta ihes egitea koldarrena dela, bizitza eta heriotzari aurpegi ez ematea, kopeta altu izanik, koldarrena duk. Besteen heriotzarekin jolastea erraza duk, ezta? Orduan ez huen beldurrik, a ze indar-agerraldiak egiteko era ezberdinak, ordukoak eta oraingoak!, eta zer uste huen?: hire kideak, hemengoak eta patiokoak miretsi egingo hindutela paretik kentzen hintzelako lepoan soka bat huela? Ba, ezetz ziurtatuko diat, guztiz kontrakoa, mesprezatuko hinduten, ausartak ez dituk kikiltzen hiltzeko eta botak jantzita hiltzen dituk gudu-zelaian edota fusilamendu horman, ordu batzuk badituk hausnartzeko eta ikusiko diagu nola portatzen haizen gaur gauean fusilatu behar hautenei aurre eginez.

Azken hitzak listuka bota aurretik, dagoeneko damu nintzen. Berandu zen ia. Isilunea. Isilpe konpaktu, lodi, gogorra, ukitzen direnetakoa. Sosa Blancok hautsi zuen hutsunea, bere ziegako burdin hesitik berezko pisu-pisatuaren esaldi baten mazoarekin: “Entzun duzue mutilak, badakizue!”. Pedro Morejónen aldamenean jesarri nintzen, zoruan.

—Barkaidak, Pedro, ez nian horrelakorik esan behar, barka iezadak, bazakiat ez dela erraza, hire lekuan heu sentitzen haizen lez sentituko nindukek, baina, izan ere, halakoa duk bizitza, gaur bati egokitzen zaiok, bihar beste bati, eta denok igaro behar hortik, ezin zioagu iskin egin, ze guztiok jaiotzen, bizitzen eta hiltzen gaituk, eta inor ez duk libro horretarik; horregatik esan nian aurpegi eman behar zaiola, duintasunez hiltzen jakin behar dela eta hori lortzeko, uste diat, era bakarra hiltzea zer den endelegatzea dela; nora garamatzan heriotzak, eta zer pintatzen duen Jainkoak hor guzti horretan; eta okerrena duk ahoa esaldiekin betetzen diagula eta egia dena duk ez dakigula zer den, ez non ez nork dioen egia, eta heriotzaren bideetatik ibili behar dela, aurpegiko begiak itxita, ze begiok ez ditek deus ikusi behar, eta fedearen begiak irekita, zerbait badagoela sinetsi, zer zakiat nik zer?, beste bizitza bat bai, badela, Jainkoa zain daukagula sinetsi; baina edozeren gainetik itxaroten gaituen Maitasuna dela Jaungoikoa, besoak zabalik dituela; eta hori gertatuko bada, zer axola ohean, itsasoan ala ibaian itota, ala eta fusilari-pikete baten aurrean hiltzea? Ardura bakarra duena duk duintasunez eta esperantxaz hiltzea. Ez duk uste?

Berak ez zuen askorik esan, baina ez zuen nik hitz egiteari lagatzerik ere gura.

—Mesede bat eskatu dezaket, padre?

—Hik nahi duana.

—Gau honetan, fusilatzen nautenean, gertu izango zara?

—Seguru.

—Oso gertu?

—Oso hurbil, zin egiten diat.

Parrokiara jaitsi nintzen arratsaldeko irakurketak eta otoitzak burutzera. Barruan, haragi-hezurrak baino barneago sentitzen nuen espazio hotz eta ilun batean, itsuki balantzaka, sumendi batek pirika jaurti berria duen harriaren moduko zer bat, eta zer hori neu nintzela sentitzen nuen eta erretakoa ene hitzen errautsak ziren. Suposatu nuen egunak botaka eginiko eskoria zela, lehen fusilamenduaren gauari nion beldurra, ez nengoela prestatua kinka larri hauetarako eta txarto ari nintzela. Eta nola egiten da? Ee, Jainko!, nola egiten da?

Gau hartako arrosarioaren errezoa Heriotzaren Galeran bareago eta mantsoagoa izan zen, aste santuko prozesio gisakoa, Kristoren pasio eta heriotzaren misterioak xehekiago adieraziak, arrastarago agurmariak eta santamariak. Amaitu genuenean, barroteetatik pasa nuen zigarro paketea, gauero egiten nuen legez, eta banan bana iziotzen joan nintzaien.

Baina inork ez zuen berba egin gura. Denak joan ziren erretiratzen, ontzak gauean, euren zoko ilunera. Bakarrik geratu ziren, burdinei josita, Sosa Blanco eta Morejón. Bataren eta bestearen erdibidean ni, trantsituan. Baina hitzak ahantzi zitzaizkigun. Edo nola erabiltzen diren. Edo zertarako diren. “Pedro, hor hago?”. “Bai, Chucho”. Isiltasuna. “Padre, ze ordu da?”. “Hamabiak eta hamabi”. Isiltasuna. “Jada ez du askorik falta behar; zer moduz hago, Pedro?”.  “Ongi, Chucho, ongi”.

Iritsi ziren azkenean. Alfonso kapitaina zetorren taldeko buru. Atea ireki zuen. Esku-bilurrak ezarri behar zizkion, baina itxaroteko eskatu nion Alfonsori. “Laga iezadak Graori eta Sosa Blancori besarkada bana eman diezadan”. “Agur, Luis”. “Zorte on, Pedro”. “Adio, Chucho”. “Laster arte, Pedro”. Esku-burdinak jarri zizkioten. Mugimenduan ipini ginen. Kartzelako atean piketeko seiak itxaroten gintuzten. Eta hiru jeep militarrak. Lehenbizikora zenbait militar igo ziren, tartean Victor Bordón Machado komandantea. Bigarrenean, aurreko eserlekuetan, Alfonso eta txoferra; ostekotan, Pedro Morejón eta biok, atzealdeko estriboan, piketeko bi. Hirugarrengoan gainerakoak. Martxan jarri zen karabana.

Ezkerretara egin genuen, barruti harresitutik irtenez, fosoaren gaineko zubia zeharkatu eta gelditu ziren jeepak. Zubiko petrilean foku bat jarri zutela ikusi nuen, hobia argiztatuz. “Hemen?”, pentsatu nuen, “Kartzela hortxe bertan geratzen da-eta, nola liteke?”. Eskaileratxo batetik jaitsi ginen hobira. Adierazpenak soberan ziren. Ofizialak eta soldaduak eskailera oinean geratu ziren. Argi zegoen, Pedro eta biok murruaren oinarrira abantzatu behar genuen. Hemen zen. “Itxaro egidazu une bat” esan nion, eta Alfonso aurkitzen zenekora mugitu nintzen, piketearen aitzinera. “Hi haiz agintaria?”. “Bai”. “Zenbat denbora diat?”. “Zertarako?”. “Hil behar duzuenarekin solastatzeko”. “Zuk deritzozuna”. “Ondo da”.

Lasai al zegoen galdetu nion, esanez hori zela garrantzitsuena, zerbait esan nahi balit, edozer gauza, azken ordukoa, ea bakean sentitzen zen Jainkoarekin eta gizonekin, nirekin azken otoitzen bat errezatu nahi ote zuen. Gure Aita errezatu genuen. Hitz bakoitzeko pausarekin. Tiro egitean non kokatuko nintzen galdetu zidan. “Hementxe”, erantzun nion, “pausu batera edo bitara”. “Bada, ja”, esan zidan. Besarkatu egin ginen. Eskuineko eskuan metalezko Kristoa neraman, zortzi hazbetekoa-edo.

—Musu emaiozu, orain daukadan bezala mantenduko dut eutsiz, besoa luzatuta. Adio, Pedro, han goian berrikusiko gara egunen batean, izarretatik goiti.

Bi urrats aldendu. Besoa altxatu nuen. Bera begira gera zitzaidan.

—Tropa…! Adi…! Prest…! Desta…! Su…!

Desarratzean orro egin zuen hobiak. Oihartzunak negar harresietan eta kalezuloetan. Ziplo erori zen Pedro Morejónen gorpua. Bere alboan belaunikatu nintzen. Eskuin eskuaren hatz lodiaren hatz-mamia busti nuen `erien olioan´, nirekin ekarri nuena ontzitxo batean. Gurutzearen seinalea igurtzi nuen bere kopetan. "Gurutze santu honen seinaleagatik, barka zaitzala Jainkoak zure bekatu guztietatik. Aitaren, Semearen eta Izpiritu Santuaren izenean. Amen. Bakean izan ezak atseden".

Zutitu eta Victor Bordón Machado komandantearengana zuzendu nintzen.

—Zirraragarria, padre, zirraragarria!

—Isildu nahi duk? Esadak, Victor, norena izan huen ateraldia? Ze zahagi-bururi otu ahal izan zaiok hau hona fusilatzera ekartzea, hona preseski, kartzelatik bi pausutara, heriotza zigorrera kondenaturik geratu diren besteen galerara ematen duen leiho azpira kasik? Imajinatzen duk nola sentituko diren? Orain noak horiek ikustera, laguntzerik nahi niri? Aa, ez?!, ez nauk harritzen; ba, ongi entzun esaten diadana: hurrengorako, edo beste toki bat bilatu edota nirekin ez daukak gizonik.

Bakarrik, izugarriki bakarrik, Heriotzaren Galerara zuzendu nintzen, gauaren hondarra bertan iragatera, lurrean etzanik, arima erdizka bizirik eta erdizka fusilaturik.

# BEDERATZI

Pelotoia… Sua!
Berunezko sei bala
irteten dira gizon baten bila.
Gaua kolpetik zimeltzen da.
Bere gorputza zeharkatzen dute.
Gaua dolura doa.
Fusilen sei aho beltzak
ke grisen farfailari,
hildakoaz trufatuz:
bat gutxiago!
Halaxe da,
Gehiagotik gutxiagora zenbatzen ditu
heriotzak bere arrosarioaren aleak.
Eta gutxiagora etorri ziren
Ereinotzen Hobian
ene begien ilusioa
hodeiertz berriak ikuskatzen nituenean,
eta ene ezpainek kantatzen zituzten
esperantza himnoak
biharkoari aurpegi emanda.
Pixkanaka erortzen joan zitzaidan
"bat gutxiago!" bakoitzarekin
Ereinotzen Hobian,
gizonarenganako ene fedea.

Inork ez daki inoiz zergatik gertatzen diren gauzak gertatzen diren moduan. Hurrengo goizean, bezperako arratsaldean ordu batzuetan kabareta eta putetxe bilakatu zuten gelaren paretik pasatzean, ene buruari galderak egiteari ekin nion: zer izanen ote zen eta nola garatu ote zitezkeen gertakariak, mozkor hark eta puta haiek ez baninduten atzerarazi minutu batzuk, eta Pedro Morejónek bere buruaz beste egiten saiatu zeneko unean Cabañatik irteten hasia banintz? Edozein ihardespen susmo hutsa da, misterioa tentatuz. Inork ez daki.

Baina gauza bat da benetakoa. Heriotzaren galeran arrats eta gau hartan bizi izandakoak eragina ukan zuela sortzen joan zen atmosferan, mamu zaharrak desterratuak izan eta bestelako alaiagoen edo lagunkoiagoengatik ordezkatuak izan balira bezala. Edo aingeruengatik, nahiz eta nik ez askorik sinetsi haiengan. Edo bake berberagatik, maiuskulazko Bakea, gerra zurrunbilo hondoratutako haien arimek hainbeste behar zutena, eta horretxen eskale gajoa nintzen egun haietan.

Litekeena da Antonio Melo aitaren bisitak ere eragina izatea horretan. Frantziskotar kubatarra zen eta urteetan aurrera zihoana, `frogatutako bertutearen jabe zen gizona´, fraide aurretik abokatu, eguneroko bisita, goiz eta arrats, Calixto Garcia ospitalera, etsitutako gaixoen salara, heriotzarako txartela euren ohe-buruetan zintzilik; esperientzia luzekoa behin betirako azken agurretako orduetako laguntzaile legez, heriotza onaren apostolu.

Nire motiboak adieraziak nizkion, heriotzara zigortutakoren batek aitorpena eskatzen bazidan, ez nintzen horretaratuko. Ene animoari, prestutasunari, zerbitzuei erabateko neutraltasunez eutsi nahi nion, eta beraietaz gehiegitxo jakiteak ez zidan askorako balioko. Eta kazetari batzuk zeharo lotsagabe bihurtu izanak eta morboz jositako jakin-minez galdetzen zutela eta “aitortzako sekretua” salba-gordetzeko hoberena sekretu horiek ez jakitea dela.

Nondik mugitu behar zuen eta kartzelago langilegoa eta heriotzara zigortuak batik bat aurkeztearren, bere lehen bisitan lagundu nion. Egun horretatik, kondenatu berri bat galerara eramana zen bakoitzean abisatzen nion eta bera moldatzen zen, ez dakit nola, baina Cabañara igotzen zen. Kontsolamendua, animoa, kofesioa baino zerbait gehiago zen esku-beteka banatzen zuena. Handikeria barik edo begi-bistako seinalerik gabe, berarekin batera eraman ohi zuen beti komunioa, Eukaristiaren zerbitzua. Eta laster jakitera iritsi nintzenez, inor ez zitzaion erresistitzen, banan bana denak pasatzen ziren berarekin solastatzera edota bera zuzentzen zen banan banan denekin egotera, eta guztiak itzultzen ziren beren txokora kofesaturik eta jaunarturik.

—Aditu, padre Melo, baina jende horren artean bada erlijioaz tutik ez dakienik, ez dakite errezatzen, sekula ez dute `praktikatu´, bataiaturik daude eta kito, beraiek ere onartzen dutenez.

—Motel-motel!, Jainkoak ez ditik gauza horiek galdetzen, Kristo ardi deslai horien, guztiok garenen bila etorri huen, eta ez dakik zer poz puska hartzen duen horietako batekin topatzean, ez hadi ibili halako zuhurkeriekin eta galde egiek gaur gauean, arrosario ostean, ea zenbatek gura duten bihar goizean komunioa ematea heuk.

Galdetu nien eta erantzuna masiboa izan zen: denak.

Bibrazio positibo eta negatiboen detektagailu batekin, agian ikusi ahal izan genezakeen Antonio Melo padrea erretiratu orduko Heriotzaren Galeratik, bizitzaz betetzen zela hau, gorputzaren jaio-bizi-hil hau ez den jatorri desberdin bateko bizitza. Ni nerau behartua nago onartzera nire burutik itzal anitz uxatu zituela eta lasaitasun eta zeru izartuen gurdikadak oparitu zizkidala.

Entzutegiak ez zien hutsik egin goi-buruei. Auzitegi pare bat antolatu zituen kartzela inguruko galera banatan eta lanean jarri zituen topera. Gauero behatzen zen beroietan kasuren bat. Euretako batzuk gau bat baino gehiago hartzen zituzten. “Urliak esan dit”, jakinarazten zidaten, “gau honetan epaiketara daramatela eta bertan egon zaitezela eskatzen dizu”.

—Baina ez dut ulertzen zein helbururekin, nik ez dut ezer pintatzen epaiketetan, ez naiz ez juje, ez fiskala, ez abokatu ez lekuko, jesartzen naiz eta nehork ez dit iritzia eskatzen ez azalpenen bat ematen. Baina ni han egotea gura du. Ongi da, esaiok han izanen naizela.

Libretoa aldatzeko modua egin nuen beraz, arrosario ostean tribunaletik pasada bat erantsi nion, sarritan goizaldeko ordu batak eta ordu biak arte luzatzen zena, nabaritzen banuen bederen giroko airea, agenteen keinuak eta jarrerak heriotza-zigorraren seinaleak ebazten zituztela.

Legeetan eta epailetza praktiketan peritu izan beharrik ez da herren gutxi-asko edota larriak nabaritzeko judizio prozesuetan. Armada iraultzaile garailearen auzitegiek —ez herriaren tribunalek, behin baino gehiagotan esan zen legez— akatsez gainezkako epaiketa ugari eszenifikatu zituzten han, Cabañan. Hasteko epailetzarena eta buruzagitzat egiten zuten hiruetako bat ere ez zen ez epaile ezta sikiera sasi auzi-abokatu. Ehun legoatara ohartzen zinen ezetz. Fiskalak, aldiz, gehienbat De la Fuente fiskala, fiskal latzak ziren euren lana salatzea zenekoan, akusazioa frogekin errematxatzean, nahiz eta frogak batzuetan oihuak baino askoz gehiago ez ziren, eta mahai gaineko ukabilkazo sendoak eta zegozkien zigorrak eskatzea, zenbat eta gogorragoak hobe.

Lana ondo egitearen arreta? Odol beroko ezinikusia akusatuenganako? Anbizioa, besteren bizkar igotzekoa? Sekula ez nuen nabaritu beraietako inorengan ez trankiltasunik ez orekarik ez ekidistantziarik burubide edo iritziren bat emititzerakoan, ez eta ulermen edota amore emate gizatiar izpirik. Behin baino gehiagotan Duque Estradarengana hurreratu nintzen.

—Aizak, Miguel Angel, justizia beragatik ezpada, sikiera iraultzaren izen onaren aldeko zerbait egin beharko zenukete herren horiek disimulatzeko, oso begi-bistara geratzen dituk, gizona, arriskatzen ari zarete: kanpoko prentsa putre moduan botako zaizue, zuen justizia dotore horren ospea galtzeko; iraultzagatik, motell!

Ez dakit berdin zitzaien zer zioten beraietaz ala itxurak estaltzeko komediak egiatan komediak ziren, eta ez besterik.

Ah, abokatu defendatzaileak. Bai, aparteko esaldia merezi dute. Guztiei ere ezin zaie soineko luze bera jantzi. Duinak eta serioak baziren, gutxienekoak. Baina baziren beste zenbait… Ekiten ikusi eta sufritu egiten nuen. Hegazti harrapariak, bazirudien halakoez egina zutela arima. Lotsagarri sentitzeko modukoa, auzo-lotsa, amorrua eta kuraia.

Akusatu baten senideak beti daude prest defentsa ordaintzeko, ona eta eraginkorra izanen delakoan. Hori ordaintzeko jateari uztea, beren etxea saltzea, zorretan sartzea, edozer gauza egiteko gai dira. Abokatuek sobra eta gehiegi ezagun zituzten mugak, oinez ibili behar zuten laba gorizko galtzadaren antzekoak; bazekiten kasurik gehienetan, denetan ez bazen, sententziak finkatu eta erabakita zeudela epaiketa hasi aurretik, galtzera zihoazela, arraso ziur zirela hori zela euren aukera bakarra. Epaiketa galtzera eta ordainsari oparoak kobratzera. Familiartekoei azti ibiltzeko abisatu ohi nien, baina alferrik zen. Behin eta berriz labaintzen ziren eta etendako esperantzen sare hautsietan jausten.

`Antzerkiak´ aukera zabala eskaintzen die egileei bertan mugi daitezen: tragedia, drama, komedia, sainetea, opera, zartzuela. Iraultzaren auzitegien abanikoa murritzagoa zen: tragedia eta drama. Alabaina, Otto Merueloren kontra muntatutako epaiketa, oholtzara igo aurretik, taulan eta oihala erortzen uztean, sainete bat izan zen, komediara ere ez zen iritsi sikiera. Epaiketaren imitazio barregarria, gizon bati beharrik gabe sufriarazteko eta gainerakoei barre eginarazteko helburuz ospatua.

—Baina zer premia ditek horretarako, Miguel Angel? Asunto serioak seriotasunez ebatzi behar dituk. Ala arrazoi bereziak ba al dituk, eskertuko nikek, baleude, argituko bahizkidake, epaiketa Cabañako zinema-antzokian, ikus-entzule bereziki gonbidatuekin (eta ez nindukek harrituko fiskalaren efektu berezi beldurgarriekin) ospatzeko?

—Pater: ahaztu al zaizkizu gizon honen obra eta graziazko programak medio jasan ditugun digestio-etenak eta heste-minak, bazkal orduan? Ordain dezala!

Otto Meruelo honek, Batistaren egiaren defendatzaile kementsu eta saiatuak, gezur baldarraren eta kolpe baxuen paladinak, txanpon berarekin ordaindu zuen, gau batean eta bestean busti zituen prakak, premiarik gabe eta bera sufritzen ikuste hutsagatik luzatzen zitzaion bitartean epaiketa. Ez nuen hutsik egin ekitaldi bakar batean ere, tragikomediaren objektuak, akusatuak eskatuta. Hau izan zen, hain zuzen, erruztatuen bankilloan jesarri ziren guztietarik gainbeheratuena; fiskalak heriotza zigorra eskatu zuen beretzat, jakinda aurrez erabakitako sententzia kartzelako opor-egonaldia izanen zela.

Epaiketek Heriotzaren Galeraren mailak elikatzen zituzten eta paredoiak jaitsi egiten zituen. Ez zen errepikatu exekuzioaren jakinarazpen absurdua ematea berorrengandik urrunen zegoenari, “abadeari”. Entzutegiko edo presondegi bereko ofizial bat arduratzen zen horretaz eta partida bikoitzean egiten zuen, interesatuari eta niri. Ez beti, zoritxarrez, nahikoa denborarekin despedida antolatzeko, aurrez aurre edo idatziz, edota senitartekoei helarazi gura zieten arropa-fardela eta lau huskeriak jasotzeko.

Beti Chék presiditzen zituen “kausa berraztertzeak”, aurrez diktatutako sententziaren berrestearekin baino okerrago amaitzen zuten batzuetan; “Exekuzioa gau honetan bertan izango da” determinazioa zekarten. Min gehitua, premia bakoa. Zergatik, bestela, ez zen kasu guztietan aplikatzen? “Zergatik, komandante?”, galdetu nion judizio-ikuskatze horietako bat amaitzean, baina erantzunik ez nuen lortu.

Bigarrena eta beste fusilamendu guztiak 1959ko otsailetik ekainera bitartean lekutu ziren Ereinotzen Hobian. Zenbait lagunek ziurtatu didatenez, horien artean Miguel Angel Loredo aita eta Salvador Subirá apaizgaia, Cabañako kartzelan bizi izan zutenak euren zigorraren zati bat, bere garaian exekuzioak kartzelaren zimenduetako hobian burutzen ziren. Posible da. Entenditua dudanez, presoekiko tratamendua ez zen jaitsi, alderantziz, hazi eta hazi egin zen tratu txar eta krudelkerian. Berez “gaztelu” esaten zitzaionetik landara irteten ginen, Kristoaren monumenturaino hartu eta Casablancara jaitsiz, kontrolen ondoan, berriro barruti harresitura sartzen ginen plazatxo batera, harresi barruko espazio zabalenera.

Hamar metroz gaindiko garaierako harresi sendoaren oinetan, berarengandik hiru metro bereizita, poste bat ongi ereina, irmoki sartua zoruan aspaldidanik, antzinako ankerkerien oinordeko, Pedro Morejón ekarria izan zitekeen lekua. Hortik gertu, metro batzuetara, berrogeita hamabost gizon gehiago asistitu nituen euren bizitzetako azken minutuetan. Berau gabe egin zitekeen. “Postera lotuko

haute, ala nahiago duk lotu gabe hiltzea?”. “Ez, ez, ez nazatela lotu”. Berdin: “begiak bendatu behar ditiztek, ala begiak irekita hiltzea gurago duk?”. “Ez, ez dut loturarik nahi begietan”. Errutina bihurtu ziren bi galderak. Eta erantzuna beti izan zen berbera. Zutik, firme, kopeta gora, ezin gehiago irekita begiak.

Goiz batez Duque Estrada zain neukan.

—Pater, zerbait esan behar dizut.

—Esadak.

—Jakin berri dut geure komandante Guevarak bart gauean exekuzioekin erlazionaturiko orden bat eman zuela.

—Buka ezak, esadak zeri dagokion.

—Agindu zuen inor, inortxo ere ez dadila fusilatua izan zu ez bazaude presente.

—Beti egon naiz bertan.

—Agi denez, ziurtatu nahi du horrela izaten jarraituko duela etorkizunean. Eta badakizu horren zergatia? Bada, hortik diotelako zeuk liluratu egiten dituzula paredoira irten aurretik eta hori dela gauzak zetaren gainean bezala joatearen arrazoia.

—Popatik hartzera joan hadi, Chék ez dik sinesten pendejada horietan.

—Eta zergatik ez du sinetsi behar? Badakigu erlijioaren misterioetan, `opioan´, marxistek beraiek diotenenaren arabera, ez duela sinesten; baina hipnosia zientzia baten alderdi bat da, ez da hala? Zergatik ez du sinetsi behar horretan?

— Zeren ez baita egia, joño, ez da egia!

Eta noski ez zela egia. Eta hain argi jakina Chék ez ninduela hipnotizatzaile kontsideratzen. Galdetuko zidan bestela. Fortunatzen zena zen dena ongi zihoala, nola errailen gainean, eskandalurik gabe, eta hori ondo zetorkien, aurkakoa bahetu zitekeen prentsara eta arazoak sortu. Akaso Ché Guevarari, bere gerrillari arrakastatsuaren ego hanpatuari, gehiago gustatuko zitzaion `bere´ fusilatuek oihuka eta hankak aztalka, eta bere izena, Fidelena eta Sierrako bizardun guztiena madarikatuz hiltzen zirela jakitea. Baina, komeni ote zitzaion asentatzen ari zen iraultzari, sustraiak botatzen ari zenari? Hobe txintik atera gabe hiltzen baziren, bildots otzanen antzera.

Egia da inork ez zuela ondoriorik ateratzen paredoian gertatzen zenaz. Eta inork baino gutxiago agian, nik. Kartzelak asko erakusten du. Naturalki, libertate falta eta askoz gehiago epe finkoan galera hori berreskuratzeko itxaropenik ez izatea; bizitza begiratzeko eta bizitzatik behatzeko esparruaren angelua aldatzen da. Litekeena da kartzelatuaren lehen erreakzioa ustekabekoa eta amorruzkoa izatea. Baina erneguak inora ez daramala ohartzen den neurrian, barruan daramagun bizi-energiak instintuz bilatzen ditu existitzeko eta garatzeko beste forma batzuk. Dituen hondar gutxirekin argi gehien sortzen duenak, martxan ipiniko ditu interesak eta proiektuak bizirauteko eta kartzelako atmosfera hil eta murriztuan norbait positibo izateko.

Etsipena gailentzen zaionari, goroldio ilun eta antzu bat hazten hasten zaio arimako zoko guztietatik, oso partida txarrak jokatu lekizkiokeena. Orok dute zerbait komunean, bizi nahi dutela eta bizitzeko heriotzari buruz pentsatzeari uko egiten diotela. Harengan zenbat eta gutxiago pentsatu, orduan eta urrunago kokatuko bailitzan.

Egun batzuetan hiltzera zigortutako kondenatuari, dela eritasun terminala, dela auzitegiaren sententziagatik, jokalekuko argiak amatatzen zaizkio edota bizi izan zituen jokalekuak, iragana goitik behera datorkio. Eta zer gertatzen da orduan, ez baldin badaki zer dagoen heriotzaren langa ostean, inor ez baldin badauka esango dionik zerbait badagoela eta zertan datzan berori? Benazkoa da "esperantza dela galtzen den azkena", fedea eta maitasuna galduta ere, esperantza hor dela. Baina itxaropena, beste guztiak legez, bertute aktiboa da, zer itxaroten den jakin behar da landu ahal izateko.

Hor sartzen nintzen jokoan ni. Eta nik ez nenkien zer esan, ze ez nuen ez zeruan ez infernuan, irakatsi zitzaidan horretan sinesten. Eta esan nien beste bizitza misterio bat dela, Jainkoa misterioa dela halaber, argia den misterioa, egia, energia, maitasuna eta bizitza, batik bat edota ororen batuketa, Bizitza dela; Bizi-misterioa hemen eta Bizi-misterioa han. Hori zen esaten nien guztia. Eta horrezaz gain, Kristotaz, dohatasunez hitz egiten nien, parabola batzuk kontatu: "Zeruen erreinua zeraren antzekoa da…", eta zenbait `mirari´ kontatzen nizkien, non era berean gorderik ibiltzen zen misterioa, `nolakotasunaren" arraposturik gabeko itaunak, eta euren bizitzaren ereduaz eta beraien heriotzaren etsenpluaz ere usu egiten nien berba.

Horretaz hitz egin eta konpainia egin, beraiekin sufritu eta beroiek negar egiten zutenean, behin edo behin gertatu zena ez dakit zergatik, nerauk ere begietan malkoak, eta zerbait oroituz barre egiten zutenean edota txisteren bat kontatzean, neuk ere barre. Baina nik ez nituen txunditzen, nik ez dakit hipnotizatzen. Hori esan izanak molestatu ninduen, ze uste bainuen, ene sinesgogortasunaz gain, norbait edo zerbait, neu ez nintzena, aktore ari zela. Eta, pentsatu nuen, hori esatea argiztapenen ura erreten faltsu batetik eramaten saiatzea zela.

Ez dut gogoan bere izena. Polizia-sarjentu tantai bat zen, hitz gutxikoa, Humbolt kaleko 7-ko gertakizunengatik bere beste lau akusatu-kideekin paredoira gidatua izan zena; kasu horretan, ziotenez, Carbó Serviá izugarriki `garbitua´ izan zen. Bostetatik indartsuena eta animoz bareena ikusten nuenez, bere kideak bere aurretik fusilatuko zituztela esan nion. Horrela erabaki nuen ordenua, exekuzio bat baino gehiago zegoen bakoitzean beti egin nuen bezala, segun-eta hobekiago ala txarkiago ikusten nituen animoaz horniturik; banaka deitzen eta laguntzen nituen beraien puntu eta ordu "zero-infinitura".

Itxoiten zuten tokitik, besteek ezinezkoa zuten deus ikusi, baina bai entzuten zutela aginte-hotsak sua egiteko ordenatuz eta deskarga aditu. Izu-laborrizkoa. Baina saihestezina. Alfonso kapitainak zuzentzen zuen tropela gau horretan. Aurrea hartu zioten orori legez, beharrezko jo nituen minutuak eskaini nizkion; posible da, zigarrotxoren bat erreko genuen, ez dut gogoan, solastatu, errezatu genuen urrats geldoak emanez ohizko "Gure Aita", azken besarkada, Kristo gurutzean deneko irudiari musu eman, eta "egun batean han goran aurkitzen garen arte".

Bereizi egin nintzen. Alfonsok ordenak eman zituen. Gorputza zerraldo erori zen. Bereganatu ginen. Ez zegoen hilda. Auhenka ari zen, padre!, padre! Begi-bistan noragabe, Alfonsok ez zuen asmatzen errukizko tiroa ematen. Asaldatu nintzen eta presazko seinak egin nizkion Alfonsori buruan graziako tiroa eman zekiola behartzeko. Hilzorian zenarengana makurtu gabe, nork daki begi hertsiekin edo lausotuekin bere eritasuna zela-eta, desarratu zuen eta Jainkoak daki nora joan zen bala! Hiltzear zenak aieneka segitzen zuen, padre!, padre!

Piketea pilatu egin zen inguru osoan, beraiekin Duque Estrada eta zenbait ofiziale gehiago. Duque Estradarengana zuzendu nintzen eta: "Fusilatu dute honez gero, sententzia betea izan da,

ospitale batera eraman ezazue". Padre!, padre!-ka jarraitzen zuten kexuak. "Ez, hiltzera zigortua izan da bera eta hemen hil behar du". Alfonsok bigarren grazia-tiroa desarratu zuen. Alferrikaldutako beste berun puska bat. Padre, padre. Alfonsori eskumuturretik heldu, eta indarrez gerturatu nuen bere eskua exekutatuaren burura. "Jo, jo egiok ja!". Katu-kolpekaria sakatu zuen. Gorpua astindu egin zen zoruan. Arnasa erdi etenda, dardarka, eman nion azken oliadura igurtzia. "Hartzak bakean atseden". Inor agurtu eta begiratu barik erretiratu nintzen.

Ene komentu-bidean, asturiar zentrotik gertu, Teniente Rey kalea hartuz, beste auto batekin gurutzatzean, talka bat probokatzeko zorian izan nintzen.

Estanislao Sudupe aita lotan geratzen zen batzuetan, liburu edo aldizkari bat eskuetan zuela eta argia piztuta. Bere gelan argia ikusi eta deitu gabe sartu nintzen, ustez esnaturik egongo zelakoan. "Aitormena gura dut, gau honetan gizon bat akabatu dut". "Errepika ezak, zer esan duk?". "Gizon bat hil dudala". "Argitu hori". Asko kosta zitzaion ni lasaitzea. Oso erdizka lortu zuen. Ez nintzen oheratu. Komentuko teilatu-zabaltzara igo nintzen izarrak kontenplatzera eta beraiekin batera negar egitera.

# HAMAR

Isildu zaitezte! Errezatzen ari gara!
Tximist-karraka antzera,
trumoi ahots tzarra bailitzan.
Galera dardaratu da.
Oihuak errebote harrietan
eta gauean desagertzen da.
Isiltasuna.
Otoizten segitzen dugu.
Pausuak uretan oin-hutsekin,
trapuetan bildutako ahotsak,
zuzi iraungiak,
arrosarioa aurrera doa,
jira eta bueltak plaza berari.
"Jainkoak salba zaitza Maria, santa Maria,
Jainkoak salba zaitza Maria, santa Maria…".
Bada ezpainak mugitu soilik egiten duenik,
ez ditu ezagun hitzak,
eta errezoan ari da halere.
Hitzak dira gutxienekoa,
esaten diet,
ezpainak geldi egon litezke
eta itxirik begiak.
Bihotzarekin errezatzen da
eta oin eta eskuekin.
Bene-benetan otoitz egitean,
arima eta gorputza eta bizitza osoak dira
otoizlariak,
norbera izandakoa
eta gaur dena.
Otoitzak arima garbitzen du
nola urak gorputza.

—Zertarako errezatzen dugu?, dio norbaitek.

—Norberak daki zertarako.

—Nik errezo egiten dut mirari bat eskatzeko.

—Beruna bihurtu dadin kotoi?,

—Ez haiz alferrik arituko?

—Bada, zer eskatuko dut?

—Ordu horretan Bera hire alboan izateko.

Otoitzak, esaten diet,
bideko sasiak kentzen eta
ateak irekitzen laguntzen du.
Otoitzean jarraitzen dugu.
Arrosarioa amaitzean
arnas-hartze sakon bat entzuten da,
helmuga batetara nekez iritsi bagina
eta deskantsura eseriko baikina legez.
Lasaiturik.
Erretzen dutenei pizten diet
euren zigarreta.

Eta orain? “Kontuz!” dioten seinaleak barrundatzen ditut goizaldeko ordu bietan edo hiruetan galdetzen hasten bazara: “eta zer egingo dut orain?”. Zorakerietara zabaltzen den atzealdeko atean jotzen dute. Zeren eta goizaldeko ordu bietan, lanegun berri bat hasteko irteten ezpada pertsona hori, suposatzen da oherako bidea hartzekoa dela, begiak aurreraka erorita eta neke-aleen luku erraldoia bizkarrean duela. Alabaina, neuk bilatzen nituen alternatibak beste batzuk ziren: izu-ikararik gabe lo egitekoak.

Anestesikoak asmatu nituen, lagunduko zidatenak sakonunetan erortzen ene eskeletoa horizontalera entregatu bezain pronto. Beldur nion ohera joateari, ametsari, ene ametsa populatzen hasi ziren nire “ametsei”. Gau batean neure gurasoak lagundu nituen paredoira, aita-amak, heriotzara zigortuak auskalo zergatik. Paretatzarrera eramana, beste gau batean, Pio XII. aitasantua izan zen. Ez zitzaidan ez gutxi ez asko interesatzen Sigmund Freudek esan zezakeena amets hauetaz. Beldurgarria zen ulu batekin esnatzea eta gorputza korrontetzar elektriko moduko batek inarrosia izatea.

Ene anestesikoetako bat azeleragailua sakoneraino sakatzea, autoak bere gehiengo abiadura eman arte, ausarkeria, kontrolaezinezko irristadaren mugaraino, istripu hilgarria Cojimar eta Tarará eta Santa María del Mar-eko autobide berrian, ea tentsio batek aurrekoa zapaltzen zuen. Beste bat whiski botila muturrean sartzea zen. Untxi gisatuak saltsan kartzelako bere lagunari eramaten zizkion gizon hark, niri ere ekarri zidan White Horse eskoziarraren kaxa bat, dozena botila banan bana, bere lagunari eman niezaion.

—Baina nola bururatu zaizu? Cabañako kartzelan barra bat muntatu dezaket, benga, beno, eraman ezazu hori ekarri duzun bidetik!

—Gera zaitez horrekin eta egizu ongien deritzozuna.

Nik ez nekien pena madarikatuak igerilari adituak zirenik whiski igerilekuetan. Whiskian blaitu nituen behin eta bitan baino gehiagotan, karretari irlandarra banintz ere…!, gauerdiaren ondoren lo egin nitzakeen ordu gutxiak, eta ondorioa izan zen lehenago desatsegina zitzaidana, botika gustua hartzen niolako, bada, gustatzen hasi zitzaidala, puntu bateraino agian alkoholiko izateko zantzuen sustraia izateraino ia. Baina penak hiltzeaz, apenas, ezta deus ere.

Okasioetan, kartzelako zaintzaren ardura zuen troparen logelan litera okupatu gabekoren bat aurkitu eta ordu pare bateko lo kuluxkak egiten nituen. Nola eta mutilen batzuk ez bazidaten berba egiteko atxikitzen. Oro har, erreserbatuak ziren, hitz gutxikoak euren jatorriko multzoan ez bazen. Denak entzun izan zidaten behin eta berriz zigortuei zuzentzen nintzaienean otoitz artean edo euren itaunak ihardesten, edota informatzen sinpleki edo-eta kaleko hotsak komentatzen eta, orakulu bat banintz legez, errespetatzen eta aditzen ninduten. Batzuk, izaeraz irekiagoak eta fidakorragoak, mendilerroko gerrillaren pasadizoak kontatzen zizkidaten eta gozamen bereziarekin euren abenturak Habanan, garaipenaren harroaldiak arrastatu zituenekoak.

Bat bazen, eta Adan zuen berezko izena!, isiltzen ez zena bere amodio balentriak kontatzeari lagatzen ez ziona; hobe esanda, bere haren merkeko zirriak. Gau batez aitortu zidan:

—Padre, uste dut gaixo nagoela.

—Ni ez nauk mediku, baina esan gura badidak, bota ezak.

—Gau honetan inpotente bihurtu naiz.

—Eta nola izan duk hori?

—Ba, emakume batekin joan eta ezin izan dudala ezer egin.

—Aurrenekoarekin ala azkenekoarekin?

—Azkenekoarekin.

—Eta zenbat etzan dituk aurretik?

—Zazpi.

—Ez besteko lotsagabea egina hago hi!

Denei gustatzen zitzaien putetan, baina Adani bezala, inori ere ez. Inoiz ez zitzaidan otu aurresatea hori bekatua zenik. Adan bekatu egiteko gai al zen bada? Denak ez ziren `adanak´, ezta hurrik eman ere.

Edo harresira abiatu edo hiriko argiak eta ozeanoaren belztasuna behatzera esertzen nintzen. Gaua desegiten joan zedin itxaron eta argiak itzalak ordeztu zitzala pixkanaka.

Arratsalde batzuetan, eta Mons. Evelio Díazek, Habanako Artzapezpiku-bitartekoa berau, ez gutxiago zenak erdiesanda, zinema-sala batera sartzen nintzen bere kartelerako lehen tanda ikustera. Ia inoiz ez nuen filma oso bat ikusi, beren musika eta koloreen hamakan lokartzen bainintzen. Baina esnatzean eta danbatekoaz ateratzean Cabañara korrika egiteko, ohartzen nintzen ohean siesta bota banu baino deskantsatuagoa nindoala.

"Batzuk badatoz eta besteak badoaz". "Bizitzaren joanean", José Selgas poetarentzat. Heriotzaren desfilean niretzat. Galerako lau ziegak ireki eta ixten ziren, batzuk atera eta ez ziren itzultzen; beste batzuk, joan zirenek utzitako hutsunea betetzera zetozen, etsipenez itxoitera, iragana behatu eta agur esatera, etorkizuna usnatu eta bere misterioak zoko-miatzera. Giroak horixe izaten jarraitzen zuen: `ez ezak denbora galdu faltan botatzen eta errebelatzen bueltarik ez duen horretan, beste irteera bat bila ezak, bai bazagok´. Animalia bentzutuaren etsipena? Izaki arrazional eta adimentsuaren onarpena?

Batzuk besteak kutsatzen zituzten. Melo padrearekin berba egin eta, salbuespen bakar batez, hurrengo goizeko jaunartze zaleen taldean parte-hartzea eskatzen zuten. Arrosarioak, berriz, arratsaldero aukerak ematen zizkidan ebanjelioaren iruzkinak egin eta kaleko bizitzan bizi izan zena eta egun barrote artean bizi zena aplikatzeko: Jesus, laguna eta anaia bizitzen eta hiltzen biziz eta hilez irakatsi zuena. Bizitza errealerako aplikazioak bizia amaitzen denean: txirriska eta hutsunean erortzea ala tranpolina eta jauzi akrobatikoa Bizitzarako. Nik ez neukan fedea ereiten nuen. Eta irribarre egiten nuen, konturatu ez zitezen negarrez ari nintzela.

Paredoiak ere izan zuen aldaketa bat, arintzea ekarri ziena exekuzioak gidatzearen kargua zuten ofizialei, ez hiltzera eramandako errudunei ez eta gertaera makabroetako gainerako esku-hartzaileei. Alfonso Zayas kapitaina behar bada heroia izanen zen mendian edo Santa Clarako hirian baina, odol hotzean hiltzera behartutako pelotoi baten manduan, berea jelatu egiten zen zainetan. Bere eginbeharra zelako egiten zuen, baina larruan antzematen zitzaion nazka ezkutua, asko saiatu arren disimulatzen. Zenbait gauetan ordezkatu zuenak ere ez zuen ongi ematen maila, beharrezkoa zen matoiaren taila.

Ché Guevara, aldiz, zeinaz bere etsaiak hainbeste dioten Cabañan fusilatutakoen odolarekin zikinduak zituela eskuak, bada, sekula ez zen agertu ere egin ez "sua!" oihukatzera, ez graziako tiroa disparatzera. Baina egun batean, gau batean, gizon maltzurra agertu zen, eraile izateko jaioa [plazera

sentitzen dutenetakoa suposatzen dut, orgasmoaren antzeko zerbait], heriotzaren albistari iaioa, tropelaren buru zela. Morroi nardagarri bat, bere Estatu Batuetako sorterriko justiziaren iheslari, iraultza kubatarrean erroldatua, ze bere buruan sinonimoak ziren iraultzaile eta gizakien hiltzaile izatea.

Herman Marks izena zuen. Norberak ez ditu aukeratzen bere ibilbideko kideak bere bizitzako halako uneetan. Marks bezalako morroiek lohiaz zipriztintzen eta zikintzen dituzte inguratzen zaienei. Lotsa sentitzen duzu gizaki izateaz haiengandik gertu ibili behar izanez gero. Ez ditut ahaztuko bere aurpegi eta keinuak inguratu zitzaidan arratsaldean, eta gainera bota zitzaidan ni besarkatzeko, zeren gau hartan, zazpi, zazpi fusilamenduko banketea izango genuen!

Sikiera gau hartan gertu izan nuen lagun baten konpainia, Tomás Olazabal aitarena. Akolito gisa zerbitzatzeko eskaini zitzaidan, berak esana, gainezkatzen nintzenerako. Gau horretan deitu nion. Berak zuzendu zuen arrosarioaren errezoa eta nirekin iraun zuen iluntasun luze, amaiezinean, bazirudienean erlojuak uko egiten ziola aurrera egin eta orduak markatzeari. Ez zuen balio izan, ezin zuen kontsolamendu izan, baina sentitu eta eskertu nuen lagunaren presentzia.

Beste gau batean bezalaxe, Mariano Errasti lagun eta aita halaber. Eta beste bat, Monsinore Eduardo Boza Masvidal, Caridadeko parrokoa eta Habanako Apezpiku Laguntzaile-gaia, Fidelek Kubatik kanporatua, erbesteratua erbesteratu ospetsuen artean. Eskatua zidan posible egin nezala bera bertaratzea bere familia lagun baten kidearen fusilamenduan.

Zazpien zerrendan zegoen Luis Ricardo Grao. Urtarrilaren 28ko Kirolen Jauregiko hiruetatik, Pedro Morejón aurretik joana zen, bera zen bigarren, Jesús Sosa Blancok egun bakar batzuk soilik itxaron beharko zituen. Grao bizirik iritsi bazen gau horretaraino, ez daki batek ez zergatik ez nola. Egunak zeramatzan ahitzen pixkanaka, dardara eginez, agonian, baina amatatzen ez den kandela bezala. Oso gutxi jan eta berba egiten zuen; bere begien pertsianetatik anitzez haratagoko irribarrea zuen.

Goizero jaunartzen zuen eta arratsalde hartan, galerara iristen ikusi ninduenean, deitu egin zidan eskari bat egiteko: mesedez ekar niezaiola komunioa gauean, eguneko bigarren aldia bazen ere, indarra hartzeko eta hormara bidean abiatzeko orduan. Erabat txoraturik aurkeztuko nintzatekeen kopoia ostiaz beteta, den-denak berarentzako.

Azken orduan nolabaiteko era krudelean portatu nintzen berarekin. Akabatua ikusten zitzaion, oso eri, zirtzil fisikoa, eta zazpien artean osoena zegoena aldi berean, izpirituz erraldoia. Alde batetik sufrimendua aurreztu gura nion, agonia murriztu, zazpietatik lehenbiziko eramanez paredoira. Eta, halere, azken lekuraino erreserbatu nuen. Berorixe esanez egin nuen, eskatuz adorea opa ziezaiela bere kideei, banan banan jaso nik eta ardiak hiltzera bezala eramaten diren arteko tartean. Onartu egin zuen. Eta seguru nago perfekzio osoz egin zuela, akaso hitzekin, apika isilik, berdin dio.

Bera bakarrik geratzean, ez genuen ez denborarik ez gain-laguntzarik beharrezko izan bere animoak eta bernak firme mantentzeko. Niretzako, despedidarik eta besarkadarik zirraragarrienetako ba izan zen. Begirada tinkoa aita Tomásek bere eskumako eskuan goian sostengatzen zuen gurutzean. Erabateko ordenak erortzen joan ziren. Heriotza, bidea zabaltzen zoan. “Su!”. Sei bala irten ziren Luis Ricardo Graoren bila. Zutik itxoin zien. Eta zutik jarraitzen zuen dunbotsari isiltasunak jarraitu zionean.

Zutik balak zeharkatua zutela? Zitekeena zen? Berarengana hurreratu ginen. Bizirik zegoen? Hila zen? Zutik zirauen. Hain irmo plantatua seien inpaktuak ere ezin izan zutela etzanarazi? Edota berunak ukigabea piketeko mutilak, jakinik nor fusilatzen zuten, nahiago izan zutelako ez apuntatu

hiltzearen ordez? “Aurrez aurre eta arropan ez dira ikusten inpaktuen zulaketak. Bizkarrean bai ikusten direla irteera-zuloak eta odola txorrotaka jariatzen”. Baina ez nuen begiratu eta ez dakit. Ofizialak pistola lokira hurbildu eta graziako tiroa aplikatu zion. Zerraldo erori zen. Azken olioaren sakramentua emateko belaunikatu nintzen. “Deskantsa ezak bakean, laguna”. Eta ahapetik, “Ze inbidia diadan, motell!”.

Gau gutxi barru abisatu zitzaion Jesús Sosa Blancori bere txanda iritsia zena. Horren zain zegoen, harritzen gintuen ja, bioi, hainbestek aurre hartu ziotela. Amelia eta bere alabengandik despeditua zen. Ez nuen azken musuaren eszena bistaratu gura izan. Ez zuen lotu gabeko hari-muturrik lagatzen. Itxuroso jartzen utzi ziezaiotela eskatu zuen, bainatua, bizarra egina, barne-arropa garbia, heriotza andereari harrera egiteko.

Konfiantza gehien garatu zuen Marcial `errebelatuarekin´ aparteko bat izan zuen, tiratzaile apartaren ospea zuenarekin. Aldenduta, baina denok entzuteko moduko ahotsaz. Eskatu zion saiatu zedila gau horretako piketeko izaten, bere bala izan zedila azken agurra emango ziona; kasik zin egin zezala exijitu zion: zuzen, baino oso xuxen, desarratu zezala bihotzera.

—Hona, ondo begira ezak, ikusten?, hemen daramat bihotza.

Gero niri deitu zidan. Nik ere mesede bat egin niezaiola.

—Ikusten dituk oinetako hauek? (Ordu honetarako hika egiten zidan ja.) Begiratu itzak, berriak dituk, estreinatu gabe zeudek, urteko despedidarako erosi, baina ez nizkian jantzi, ez zakiat zergatik, hobe, horrela bizitza agurtzeko estreinatuko dizkiat, baina ez diat hauekin lurperatua izan gura, nahiago oinutsik botatzen banaute lurrera; hik kendu iezazkidak hilda nagoenean eta bihar, Casablancan edota Habanan, eskale bati oparitu; ikuskatu oin handia duen, bestela ez ziotek balioko, baina ez esan norenak ziren, ze bestela ez ditik jantzi nahi izanen.

—Orain ni nauk galdetzailea: zergatik egiten duk hau?

—Fideli eta bere iraultzari txantxatxo bat egitea otu zaidak, fusilatuko naitek, baina ez naitek derrotatu.

Arrosarioaren errezoa amaitzean, atsekabean kide zituenei hitz batzuk zuzendu nahi izan zizkien. Ezer ez, “gero arte” bat. Ez zen aldarria izan. Ez zien iragan garairik gogorarazi. Etorkizunari begira hitz egin zuen. “Interesa duen bakarra da”, errepikatu zien zenbaitetan. “Aurretik noa ni. Han itxarongo zaituztet”.

Ordua iritsita, Gure Aita otoizturik —“Azkena. Gogoratzen hirekin errezatzeko eskatu hidan lehenengo hura gau hartan? Ez dakik, nola eskertzen diadan”—, besarkatu eta agur esatera nindoanean, eskutik oratu ninduen:

—Beste mesede bat, beste fabore bat egidak, hitzematen diat azkena izango dela, hitz bi esan gura zieat fusilatu behar nauten soldadutxoei.

Duda egin nuen: “Zer ote dakar gizon honek bere buruan? Ez da ene eskuduntza, baina ez dago pelotoiaren aurrean dagoen salbaiaren eskuduntza izateko eskubiderik ere”.

—Baldintza batekin —esan nion—, fin hitz egin eta laburra izan hadila, hemen egongo nauk eta konplitzen ez baduk, moztuko diat.

Ez zen asko izan esan zuena eta tonu oso hunkigarrian bota zuen. Berak eta besteek maite zuten Kuba berbera zela esan zien; berak ez zuela jakin izan aberria zoriontsu egiten eta, mesedez,

beraiek ongi tratatu eta zoriontsu egin zezatela. “Biba Kuba!” oihu egin eta isildu zen. Listo zegoen “arreba heriotza” onartzeko.

Lehenik sakramentuzko azken olioak kopetan ipini, gero zapatak kendu nizkion. Zapata erraldoiak, larru karraskarizkoak, distiratsuak. “Eta hori?”, galde egin zidan norbaitek. “Berak oparitu zizkidan”, erantzun nion. Inork ez zuen fitsik ere esan. Eta zapatatzarrak eskuan egin nuen ospa.

Ez nuen asko ibili behar izan biharamunean hanka handiekiko eskalearekin topo egiteko: oso eskerturik hartu zituen Jesús Sosa Blancoren zapatak, erabat konbentziturik neuk erosi nituela berari oparitzeko. Bizitzako paradoxak. Sosa Blancoren “izpiritu burlatiak”, bere heriotzarekiko topaketan elegante aurkezteko estreinatu zituen oinetakoetan gordeta, Habana Zaharreko kale zaharretatik barre-murrika ibilian jarraitu zuen misteriotsuki. Zer dakit nik zenbat denboran. Cabañan ezagutu nuen Sosa Blanco, xakelaria, hitzontzia, kokozko bihotzekoa, zuri eta  dultzea barrutik.

# HAMAIKA

Baso bat ur eskatu zuen
bila etorri zitzaizkionean
paredoira eramateko.
Zurrupaz zurrupa, isilik, edan zuen.
Gau horietan Cabañako iturrietan
isurtzen zen ura
mingotsa zen.
Ez mingarra ez gatzatua,
mingotsa.
Ez garratza ez gozakaitza,
mingotsa.
Mingostasunaren mingotsa.
Arratsean arimaren pitzaduretan
azaleratzen den mingotsa.
Ahots hautsien sorta,
argia zertarako den ez zekiten argiena,
buru frigidoetan labekatutako intentzioena,
lokaztian galdutako pausu galduena,
harramazkatzen eta mintzen duten oroimen eta ahanzturena,
tristura gris, lodiarena,
gonbitoaren aurretiko nazkagarrikeriena,
erritmoa galduta duten nekeena,
batek nahi lukeena, inoiz ireki behar
ez zituen leihoena,
saihetsaren alde horretako min zorrotz batena,
txoko batean hiltzera etzateko desioena,
porrot sentsazio nardagarriarena,
gogait izatearena.
Jainkoari oihu egiteko gogoarena:
Honetarako egin gintuan?,
Cabañako mingotsak,
paredoiaren bidean.

Urte hartako Aste Santua martxoaren 30etik apirilaren 5era ospatu zen. Aste hartako astelehen egunez ezagutu nuen aurrez aurre Fidel Castro. Ez zen Ché Guevara izan enkontrua apailatu zuena, baina berarekin zerikusiren bat izan zuen. Egun haietan suertatu zen, ustekabeko topaketa batean, komandanteak esan zidan nirekin elkarrizketatu nahi zuela. “Noiz? Non?”. “Bihar goizean goizeko orduetan pasa zintezke komandantziatik?” “Ongi da, bihar arte”.

Harri eta zur uzten zaituzten ezusteak, eta gehiago anuntziatuak ez badira eta berez antzematen zailak direlako. Chék nahi zuena zen berari aipatu zizkioten hiru abade ezagutu gura zituela eta haiekin elkartzeko zubi egitea neuk. Hiru pertsonaia intelektual, interesgarriak oso. Hilario Chaurrondo, paulen edota vicentinoen Kongregazioko partaidea, predikatzaile ospetsua eta misiolari kanpainen antolatzaile Kuba osoko luze-zabaleran, Nafarroan, Espainian jaioa. Angel Gaztelu aita, abade sekularra, lan poetiko batzuk argitaratua, Espiritu Santoko parrokoa, kubatarra. Ignacio Biain aita, Universidad del Aire delakoan irakasle, La Quincena aldizkariko zuzendaria, Gipuzkoan jaioa, Euskal Herrian, Espainian.

Hirurak bizi ziren Habana Zaharrean, hiruak luzitzen zituzten euskal abizenak, eta hirurak egiten zuten herren ezker hankatik, esan gura du euren pentsamendua ezker joerakoa zela. Beraiekiko topaketa prestatzeko motibatzeko, argitu zidan neuk ere bileran parte hartu behako nukeela. Beraiekin hizketa egiteko deseatzen zegoen: iraultzari buruzkoak, beronen izpiritua, iragarriak ziren legeak eta erreformak, aplikatzen ari zen justizia, eta abarren gaineko euren burubideak eta iritziak entzun nahi zituen.

Aita Biainekin soilik berba egin nuen, egunero ikusten bainuen bazkariko orduan, komunitate bereko kideak ginenez. Ez eta sikiera berari ere esan nion zerbait formala eta seriosa zenik, halako zerbait gehiago: egunen batean elkar aurkitzen baziren, txoraturik geratuko litzatekeela ezagutzeaz, oso ongi hitz egin baitzioten berari buruz. Beste biei, ezta hori ere ez nien esan. Izan ere, uste nuen, Ché ezagututa, felpaz estalitako hitzen ostean, intentzio uherrak gordetzen zituela hark. Ez zitzaion axola laguntza moral bat, ez iritzirik, kidekoak izan ala ez izan.

Helburu zuena zen beraiekin kiste bat, bi edo hiru edo tumore sortzea Elizaren ehunen barruan, bere larruazal azpian. Jada ordurako ni ez nenbilen oso amodio kartsuetan instituzio hierarkikoarekin, itxia eta ainguratua aurre-juzguetan eta doktrina mugiezinetan, zeinetan eliza egitea batzuk agindu eta gainontzekoek obeditu eta isiltzera mugatzen zen; eta duda egiten nuen Kristori gustatuko ote zitzaion eliza hau. Baina ene desamodioak ere ez zuen atea erdi-irekiko bertatik otsoa sar zedin, eta hau haitzulo traizionatzaileak antolatzen joan zedin.

Komandantearekin bere komandantzian bildu nintzen hitzordurako, kartzelatiko paredoirako gau-paseoak oinetan maskurrak eginak zizkidan; ez ariman, honek odola jariatzen segitzen zuen. Eten bat behar nuen eta bururatu zitzaidan Aste Santuak aukera hobezina eskaintzen zuela fusilak isilarazteko, atseden hartu eta gogoeta egiteko egun batzuetan. Chéri esatea pentsatzen nuen. Baina norbaitek argitxo bat piztu zuen ene buruan solasean ginela: “Chék ukatu egingo dizu, berak ez du sinesten gauza horietan, ezta fitsik ere berari; zergatik ez zoaz zuzenean Fidelengana?”.

`Erramu´ igandean oraindik ez nuen lortu kontaktu bizia eta elkarrizketarik hitzartzea. Beraz, esan nuena: “Bihar jakin non den eta, Habanan bada, errege egunean Chéren egoitzan aurkeztu nintzen moduan egingo dut, ea zorte bera dudan!”.

Cabañan nire teklak ukitu eta jakin ere jakin nuen non pasa zuen gaua eta non aurki zitekeen goizeko orduetan: Vedadoko halako kalean, halako etxean. Han topatuko nuen, Celia Sánchezekin

batera, haren interesik banu ere. Ez, Celia ez nuen intereseko, solastatu nahi nuena Fidel zen. “Hartuko zaituen ala ez, ez dakit, zoaz eta zortea lagun izan dezazula”. Autoa auzoko kale batean aparkatu eta etxera bideratu naiz. Ze arraroa. Ez polizia-autorik inguruneetan, ez zentinela armaturik atean, inolako babesik ez begi-bistan. Atea jo dut. Miliziano batek irekitzen dit. Bi ziren eta biak fusil-metrailadoreen karga zutela.

—Egun on, ez naute zitatu, ez dut galdetu hartu ahalko nauen, espero dut baietz eta horregatik nago hemen. Mesede egingo didazu esanez Fidel Castro komandanteari Casablancako abade parrokoak berarekin berba egin gura duela?

Eta baiezkoa fortunatu zen, ikusiko ninduela. “Zatoz”, eta bulego bilakatutako gelara sartu ninduten, mahai handi bat eta zenbait jesarleku; han lan egiten eta jendea hartzen zuen Fidel Castrok, eta bertatik despatxatu ninduen ordu erdi geroxeago eta ez oso modu onean, esan dezagun. Baina zintzoa izan eta onartu beharra daukat: aurpegia begiztatu eta eskua estutu aurretik, miresten ari nintzaion sekula inoiz egin ez bezala, ez kronikak irakurritakoan, ez Sierrako kontakizunak entzundakoan, ezta telebista kameren aurrean bere aurkezpenak aho-zabalik ikusitakoan eta jakineko jardun kilometrikoak, loakartu arte aditutakoan legez.

Orain miresten nuen ze ez dago lurrean estatu-buru bat gaztelu, jauregi edo bulegoz beteriko hamaika pisuren jabe, handikeriaz, luxuz eta babesez inguraturik ez denik; aldiz, berak jan, lan eta lo etxe apal batean egiten zuen, klase ertain bateko sendiaren berezkoan, konpainia eta segurtasun lagun talde batentzako espazio gabe. “Gauzak, diren bezala”, pentsatu nuen: “Hau baldin bada goitik datorkigunaren mostrako botoia, poztu gaitezke, ondo baino hobeto zoaz, Fidel; oso ongi zoaz, Kuba”.

Zoritxarrez, hura ez zen neurrirako trajea, indioilar larru bat zapaldu berri nuen eta enegarren muturrekoa hartu. Sinple eta lau esanda, bere gordelekua zen, despistatzeko eta tentuz ibiltzeko, zeren etsaiak ez du lo egiten. Ametsak eta promesak laster hasi ziren zimeltzen batzuentzat, apenas 1959ko udaberrian, eta norbait ibili zitekeen zelatan.

Jarritakoan, harengana eraman ninduten arrazoiak eta helburua adierazi aurretik, bere ikuspegi berezienetako batekin harritu ninduen. Aidanez, Fidelen buruan ez zen sartzen hurrengo ideia, hots: “norbait badatorkit, zerbait esan nahiko dit”, ze kontrako ideiaz beterik baitago: “ni ikustera datorrena, entzutera datorkit”. Ez dakit zer ibiliko zuen eskuartean egun horietan, ziur aski nekazaritza-erreformarekin loturiko zerbait.

Kubako laborantzaren bideetatik amildu zen, ez kantatzeko —inoiz kantatu ote du? — guajirarik edo son montunorik, ez eta bere edertasunaren bertsoak errezitatzeko melatu gozoz dariola; baizik eta zenbaki-gazteluak egiteko, lurren banaketa hain txarra ilustratuko zuena eta bertan amerikanoek landutako aberastasuna; herriaren onurarako produzitu behar zuten hurrengo aberastasunaren zenbakiak, “gure inspirazio eta zuzendaritzapean, iraultzarenean”.

Ekialdetik mendebaldera uhartea korritu zuen, hesiak eta talanquerak saltatuz, lautadak eta mendiak, kainaberadiak, behitegiak eta kafe-sailak, zenbakiak, numeroak eta lumero gehiago.

—Beno, eta zerk dakarkizu hona?

Esaldi batzuk prest neramatzan, bere zenbakiak enterratu zituztenak. Zabuka, hainbeste zenbakik txundituta, esan niona:

—Zuk badakizu, komandante, Cabañan… auzitegi iraultzaileak… paredoia… nik uste, komandante, Aste Santuko egunotan paredoia hertsi beharko litzatekeela, aski genuke hildako handia,

denongatik gurutzean hil zena; horretara nator ni, zuri eskatzera agindu dezazula egun hauetan bertan behera gera daitezela fusilamenduak, Kristoren amodioagatik, komandante.

Jainko Santua! Nola jarri zen! Txinparta gurutzatu zitzaidan burutik: “Hau gai da ni fusila nazatela agintzeko gaur gauean bertan!”. Baina ze oihuak bereak!:

—Zein uste duzu zarela, nork baimendu zaitu deitu ez zaituzten lekuan sartzen? Nork eman dizu kandela kofradia honetan?

Altxatu egin nintzen, “Adio, adio”, atera zuzendu eta korrika lurrundu nintzen autoraino.

Fidelen orroak Cabañako galtzada-harrietan errebotatzen zuten hurrengo goizean, kartzelara zuzentzen nintzenean; eta Duque Estradak hots egiten zidala entzun nuen:

—Zer gertatu zen atzo, pater?

—Ezer ez, zergatik galdetzen duk?

—Ze Fidel Castrok diosalak bidali eta esanda laga dizu aste honetan ez dela fusilamendurik izango.

—Nola?

—Datorren astera arte atseden hartzen dugula, zero tribunalak, zero paredoia.

Gertatutakoa kontatu nion.

—Eta harritzen zaitu hola jarri izana bera?

# HAMABI

Aingeru-eskuadroi bat amestu nuen
fusilak eskuetan,
umeak fusilatuz.
Amestu nituen ene aita-ama fusilatuak.
Pio XII. aitasantua fusilatua.
Neska-mutil lagunak fusilatuak.
Amets egin nuen digante fusilatuaren
gorpu berdearekin
Karibeko itsas urdinean etzana zena.
Ene buru fusilatua amestu nuen.
Amestu nuen fusilarien pikete bat
Jerusalengo kale bateko harri-galtzadan,
gertuko mendi bateko bidean.
Arratsaldeko hiruretan amets egina:
fusileria-deskarga bat,
mendira korri egin,
hiru gurutze huts amestu nituen.
Sekula ez nuen amets egin
zubi batekin eta
beste aldeko pasealeku berdearekin.
Ez nituen amestu izar irribarretsuak.
Ez eta aurora borealak.
Ametsik ez argiztaturiko arbolekin
arratsa erortzean.
Ez nuen ametsik egin eskutik heldurik
ibiltari zoazten bi gazterekin,
kantari,
ameslari…

Hurrengo astean Kristo berpiztua bere gurutzea kargatzen ari zen berriro Cabañako Kalbarioan. Egun haietantxe aztertu zen Ariel Limaren kausa, hunkitu ninduen kasua, beste guztiak legez, sakonki, baina hau zio eta ñabardura oso bereziengatik. Ez dut kontutan hartzen, baieztatzen dudanean, Arielek gezurra esan zidanik, eta bere defentsan fede onez aritu nintzenik, baina erratuki. Testu honen lehen zirriborroa erredaktatzean enteratu nintzen horretaz. Ez nau izorratzen iruzurra jasan izanak. Beti izan naiz harrapakin erraza hurkoaren doluaren aurrean, urrikalmenaren erraia erraz biguntzen zait. Nahiago dut ergel gisa geratu, zital bainoago.

Mutilaren adina ere ez zen bere berezitasun txundigarrienetakoa. Hormatzarrean lagundu nituen berrogeita hamabostetatik gazteena izan zen. Dezenterengatik. Cabañan fusilaturiko bataz besteko adina hilabete haietan berrogei urtetakoa zen, gutxi gora-behera. Bizpahiru hogeita hamar inguruan zebiltzan. Arielek akaso doi-doi beteko zituen hogeita bat paretatzarrera eraman zutenean. Oraingo distantziatik ez dut bereizten beraren bisajea haurrarena zen ala beldurra zen bere begirada eta hizkera umetzen ziotenak. Hemezortzi urtetik beherakoa zela sinestarazi zidan eta horrek eragin zidan berarengatik eman nituen pausuak ematera.

Ariel Limaren izenak beste oroitzapen batzuk dakarzkit, dena arretzen dutela, zingirako hondoan pausatutako lohiak irabiatuak izatean bezala. Oroipen erlazionatuak, esaterako, torturarekin: erreminta eta praktika informazioa biltzeko, borondateak makurtzeko eta ordenua eta segurtasunari eusteko. Edota zigortu eta errepresaliatzeko soilik, ze lotsagarria!

Beti izan da, historia torturatzaile eta torturatuez gainezka dago, inongo botere eta gobernu ihardunak ezin ditu bere esku guztiz garbien mostrak erakutsi ziur aski; gezurra diote aurkakoa diotenak, bai eta elizaren esku eta ukondoak eta besoak ere zorrotean jariatzen dute odol inuzentea isuria hilduratzeko makinaren gainean muntatuta, euren “inkisizio santuagatik!”.

Forja eta sutegien tailer iraultzaileak badakite gaztetxo bizargabe, polit, ameslari, gurin-bolatxoen berri: beren ateetara heroien harropuzkeriaz iritsi arren, klaudikatu behar izatera eta traizionatzera ere iritsiko dira endemas beraien lehen gaueko torturapean. Onartu egiten dituzte alabaina, euren arrandikeria-amets ergelak elikatu eta menturara bidaltzen dituzte, eta beren zortera abandonatzen piztiaren atzaparretan erortzen baldin badira.

Mukizu nerabeak, Robin Hood edo El Zorroren imitatzaileak, haien balentriak errepikatzeko edota gainditzeko prest direnak. Ariel Lima gaztetxo ameslari horietako bat zen, beste bat, beste munduko deus ez. Apika, beste burkide batzuk baino ausartagoa izan zen, gehiago erresistitu zuen eta agian heroikotasunaren marra ere igurtzi zuen. Baina suak erre zuen azkenean. Inork ez zion heroi izatera sartzeko eskatu. Berak bilatu zuen. Zigortua eta paredoira eramana izan zen bere bihotzeko arrosondoa loratu baino lehenago. Torturari amore eman eta ahultasunean traizionatzeagatik.

Oso berezkoa nerabezarokoa: erresistentzia zibila, iraultzailea, ekintza subersiboa, gerrilla urbanoa abenturarekin nahastea. Sutondoan mugitu eta ez erretzea, legeen amaraunaz eta kaleko bizitza arautzen duten ordenantzaz trufatzea; zarata atera, korri egin eta polizia korrikan jartzea. Jostatu, beste hitzetan esanda, imajinatuz aldi berean ekarpenen bat egiten diotelakoan kausa nobleren bati.

Eskolan edota auzoan erraz errekrutatzen uzten dira, sartzen diren klandestinitate eta misteriozko giroak erakarrita. Gaur panfletoak zabaldu, bihar horma batzuk zikindu pintada libertarioekin, beste egun batzuetan erakusleihoen kontra harriak jaurtiki eta tiro-hotsetara ohituz

zailtzen dira. Ad hoc prestatutako literatura ematen diete leitzera. “Irakurri ezak, aberria salbatzen lagun dezakek, prestatu hadi, gazteok eraikiko diagu mundu berri bat, Kuba libre bategatik”, eta abar.

Horrelaxe hasi zen Ariel Lima. Ez zidan aitortu ze sasitza- eta ardura-mailari ekin zion, ez eta ze mandatu eta ekintza zehatzetan parte hartu zuen. Ikustarazten zuen `norbait´ izatera iritsi zela, konfiantzazko gizona. Behingo batean poliziak hatzaparra bota zion arte, burutik oinetara zafratu eta barroteen atzean giltzapetu zuten,  ziega kuarteleroan. “Dakian guztia kontatuko diguk aldika, aditu duk, mukizu?”, esan zioten biharamunean. Gazte gaixoaren kalbarioa hasia zen, galdeketa badoa, jipoia badator, egun batean bai, bai eta bestean ere. “Beratuko haiz, mamoitxoa, ikusiko duk ze bolero lindoak kantatuko dizkiguan!”.

Arielek heroi zela amets egin zuen, baina ez zioten esan helmugara iristeko bidea luzea, malkartsua zenik, eta denak ez zutela lortzen; indarrez begiak itxi, ukabilak estutu, ezpainak koskatu, fitsik esan barik.

— Gogortxua haizela uste duk, eh! kabroitxo? Mahats-pasa bezalatsu jarriko haiz, bai; ikusiko duk baietz, denborak larru ongien zurratuena laxatzen dik eta astia duk soberan diaguna; heuk ikusi, hortaz.

Ez zirudien errenditzeko prest. Taktikaz aldatu zuten beraz. “Bihar hire ama etorriko duk, ongi portatzeko esango dik eta hik erantzun behar diok baietz, eta ona izanen haiz, berak nahi bezal-bezalaxe, baietz?, hobe duk, kaka-mokordo”. Esana eta egina. Hurrengo egunean salatxo batetara mudatu zuten, non benetan bere ama ikusi zuen. Ez zioten permititu besarkadarik ez eta ezein afektu adierazpenik, ez zen hori bisitaren helburua.

Amaren ostean, polizia erraldoi bat, hankak zabalik, eskuak atzean harturik, aurpegi galanta barre-iduri lerdetsuetan urturik. “Hitz egizu, andrea. Esaiozu zure niniari —Ariel zuen seme bakarra— zer egin behar duen ez badu enteratu nahi bere begiekin zertarako balio duten zu bezalako putek”.

Izan zen behin emakume bat zazpi semez erditu zena eta ebanoa bezain gogor hezi zituena, konpaktuak eta oso-beteak, tenk suaren eta haizearen eta burdinaren aitzinean; lehenago hautsiko zen aizkora euren izpiritua trontzatzen saiatuko balitz, baina banan bana hiltzen ikusi zituen, ezen gogokoago zituen hilda tiranoaren gutiziara errendituak baino. Zazpi anaia Makabeoak eta bere ama imitatzen gaitzak diren eredu dira. Inor ez da eskandalizatu behar beste ama eta beste seme zenbait jausten badira, menperaturik horren trantze berdinera edo antzekora.

Arielek begiak hertsi zituen polizia orangutanaren hatzapartzarrak bere amaren besaburuetan ikusita.

—Ireki itzak, marikoia, begiratu, ongi erreparatu, sadikoa duk, lehenik kolpatua izatea dik gustuko, kitzikatu egiten duk putatzar hori, eta txoratzen duk arropatxoak kentzen dizkiotenean… Ooo! Ze azal suabea, ze tititxo politak, oh!, eta axariak bere altxorrak gordetzen dituen basoa, ireki itzak gehiago begiak, marikoia, gehiago, hola… Eta Arielek amore eman zuen. Nork ez?

Bizi izan duenaren ezpainetatik entzunda, kontakizuna askozaz txundigarri eta zirraragarriagoa da. Alabaina, orain jakin dudalarik jarraipena ezinezkoa dela Ariel Limak kontatu zidan moduan, zalantza jabetzen da nitaz, eta ene buruari galdetzen diot mutiko heldugabe baten nortasuna zenbateraino pitzatu litekeen, bere erresistentziaren gainetiko presioetara azpiratua izandakoan eta segidan portaera hunkitu, haluzinatzen hasi eta errealitatea izandakoaren ezberdina dakusanean.

Zera diot, Arielek eman zidan aldaeran, errenditu ostean egin zuen aitormenean Carbó Serviá, Fructuoso Rodríguez, José Machado eta Joe Westbrook 1957ko apirilaren 20an ezkutatzen zireneko helbidearekin erlazionatzen zela; urte hartako martxoaren 13an Palacio Presidencialaren asaltotik bizirik ateratakoak hauek; José Antonio Echeverría , "Manzanita", Habanan Batistaren erregimenaren aurka legalki borrokatzen zutenen erresistentzia hiritarreko burua hilik erori zeneko ekintza (Echeverría eta Serviá asaltorako goiza bitartean San Franciscoko komentuan gordetzen ziren; Aguiar eta Teniente Rey, berriz, ni bizi nintzenekoan).

Ziurtatu zaidanez, Arielen aitortza ez da zuzena, berak ezin baitzuen helbide hori ezagutu. Zergatik esan zidan gezurra? Bere subkontzienteak beharko zuen akaso ahuldadeak sortu zion hutsunea nolabait ordeztea? Gehienbat lehen graduko gertakaria zelako, oso garrantzitsua, iraultzaren egutegian?

Nolanahi dela ere, amore eman zuen, burkide iraultzaileak saldu eta automatikoki beraien desagertzearen eta Habanako polizia-buru akordu madarikatukoa Ventura koronelaren lekaioen eskuetan hiltzearen arduradun bilakatu zen. Pausua emanda, bere kontzientziak, kamarada zaharrak bainoago, traidorearen aipu beltza ezarri zion; haren egunen hondarreraino lagako ez zion sanbenitoak, ezkutatu eta esklabo gisa kaserna bateko sukaldean lan egitea tokatu zitzaion hogei hilabeteetan, harik eta iraultzaren garaipena arte; eta gero Cabañako presondegian.

Mingarriegia egiten zait argitzea kausa eta efektuen taula hori muntaia horretan guztian; bereziki, gailena ez baina eragingarria baden torturaren egitate horretan eta eragin dezakeen buru-galtzearengatik.

Epaiketara eraman zuten. De la Fuente fiskalak bizirik jan nahi zuen, hiztegia hustu zuen altzairuzko puntazorrotz, aho zurrun, ebakitzaile eta zaurtzaile ziren hitz oroz, heriotza zigor bat eskatu zuen, bat bakarra, bada ez hogei ez berrogeita hamar berea bezalakorik, ze eskatu ahal izan balitu, eskatuko zituzkeen. Defentsako abokatua, fiskalak altxatu zuen grinen haizeteak arrastatu zuen, txikitu egin zen, "ume bat da, heldugabe bat, arduragabe bat", errepikatu eta jirak eta bueltak ematen zizkon berdinari, nola haize-errota kirrinkari baten hegalak, gantza gabe direnean bere ardatzak. Ariel Lima hormatzarrean hiltzera zigortua izan zen.

Astebete bezalatsu eduki zuten Heriotzaren Galeran. Apenas hitzik egiten zuen. Zoraturik bizi zen, bere buruaz hustua, galdua begirada, gertatzen ari zitzaionaz jabetzen ez zela. Beste presoek hain haurride, hain abandonatu, hain laztan beharrean, bere izate laburra hain bihurritua sumatu eta erruki zioten. Ché ikustera joango nintzela eta beragatik bitartekaritza eginen nuela agindu nion.

Aurkeztu zitzaidan lehen aukeran egin nuen. Erantzun zidan ez zela bera, baizik eta apelazio auzitegia hori erabakitzen zuena, eta galdetu zidan zergatik deuseztatu behar zen sententzia. Arrazoi birengatik, esan nion: bata, sentipen gizatiar hutsagatik, zeren agian, Ernesto Guevarak, Javier Arzuagak bezalaxe, froga beraren, presio emozional beraren menpe, hamasei urteekin, Ariel Limak amore eman gisa egingo genukeela; bestea, politikan azkarrak izateagatik, ze mutikoa fusilatu ondoko egunean Estatu Batuetako, Amerika latindar eta Europako prentsa kakara eginez esnatuko zen: iraultza kubatarrak sentimendu eskasia zuela, bere justiziak ez zuela bereizten heldu eta adingabeen artean, berdin-berdin fusilatzen zituztela batzuk zein besteak, eta horrek onura oso gutxi ekarriko ziola iraultzaren kausari.

Alferrikakoa. Uste dut Chék bere arimako sentimenen ildoa kauterizatu zuela, zenbat eta gupida gehiago eskatuz gero, orduan eta krudelkeria gehiagorekin erantzuten zuela. Berrikuspenaren bistan ebatziko zen.

Komandanteak salan ikusi ninduen, beste gau batzuetan lez, eta ez dakit ez ote zuen interpretatu ene presentzia harri berean egonkortzeko moduan eta horrek ez ote zuen gogortzen. Posiblea. Ikuskatzeak apenas iraun zuen ordu erdi. Sententzia berretsia eta gau hartan bertan fusilatua izateko xedea. Atean ikusi ninduen berriz ere, tribunaleko jende eta guardiekin abandonatzen nuenean sala eta kaleko galtzada harrira irten nintzenean. Eskua altxatu zuen, agurtzeko antzean. Zangada handiz zihoan oinez komandantziarantz.

Emakume batek korrika egin zuen beraien aurretik eta belauniko erori zen komandantearen aurrean. “Arielen ama da”, esan zuen norbaitek. Hurbildu nintzen. Chék ertzetik jo eta beste aldean dagoeneko, burua itzuli eta esan zion: “Andere: Javier aitarekin hitz egin dezazula gomendatzen dizut, diotenez maisua da kontsolatzen eta animoak ematen”. Eta niregana zuzenduz, agintzaile eta adar-jole artean: “Zurea da, andrea”. Altxatzen lagundu eta aholkatu nuen: “Erretira zaitez ja zure etxera, zeure tragedia gainditzen saiatu eta semerik gabe bizitzen, Jainkoari gomenda egiozu zeure burua, neuk ere enkomendatuko zaitut ”.

Inoiz ez nuen berriz ikusi ama. Gau horretan Ché gorrotatu nuen.

Ariel paredoitik igaro zen. Ez zekien bere ama han gertu zenik. Berarekin zer egiten zuten kontzientzia argirik ez zuela izan esatera ausartuko nintzateke, ez zela enteratu fusilatzen ari zitzaizkiola. Berberaren buruaren itzal hustu bat zen.

# HAMAHIRU

Sinesten dut santuen komunioan ,
sinesten dut bekatuen barkamenean,
sinesten dut haragiaren berpiztean
eta sinesten dut bizitza iraunkorrean.
Sinesten dut…?
Sinesten dut…?
Sinesten dut…?
Badakit sinestea ez dela ezagutzea ezta jakitea.
Edo arimaren jakituria dena.
Sinestea  hegan, dilindan egitea da,
misterioaren zeruetan.
Misterioa onartzea, bertan murgiltzea,
besarkatzea, guztiz ematea.
Heriotzaren misterioaz ari gara.
Ez da halakorik.
Heriotza bizi egiten da, ikusi egiten da.
Nahiz eta esperientzia izan
nondik ez den itzultzen,
kontatzen ez dena,
beti hirugarren pertsonan baitu bidaiatzen.
Sinesten da ala ez jarraitzen dion horretan,
gero datorrenean.
Heriotzaren ostean?
Misterioa,
Jainkoa,
misterio ororen laburpen.
Itsu-itsuan nabil  iluntasunean.
Ez dakusat.
Eguna esnatzen denean
eta argia pausatu ene begietan,
zeharka nazala diot eskatzen
arimaraino
eta fedearen
ereintzaraino.

Hortik, arestian esan nuen aitortu eta komunioa hartu zutela orok, batek izan ezik. Bat hori, ordea, pentsatzera gehien emana zen presoa, dotoreena eta traturik kortesena zuena zen Cabañan ezagutu nituen guztietatik. Bertako populazio penalak kontsideratzen zuen orotarik irakurriena eta kultuena zela, poliglota zekizkien bost hizkuntzetan, nazioarteko komunismoaren sare trinkoko artxibo biziduna, beste inork ez bezala Kuba eta Amerika Latindarreko ideologia eta korronte politikoetan jakituna.

Iraultzailerik muturrekoenak, alderdi komunistako faroloi zaharrenek eraginda, zenbait burkide maiteen desagertzea egozten zioten. Ez beren heriotzan esku hartu zuenik, baizen eta pikotan ipini zituela beraien izenak, bere irizpide antimarxisten arabera, herrialdearen zeregin demokratikoan enbarazu zirenen, eta isilduak izan behar zutenen zerrendan. José Castaño teniente koronelari buruz ari naiz, Batista diktadorearen egunetako Inteligentzia politiko-militarreko Buróko burua.

Asko preziatu nituen latinamerikar komunismoaren errutetatik eman zizkidan ibilbideak, bere zabalkunde erritmoa, bere ahalmenak eta mugak. Bazekien, arraioa bazekiela tipoak!

Berrogeita hamar urte geroago, zapata hautsiez nazkaturik ibiltari, lautadetatik eta mendietatik, menditatik ordeketatik bainoago, Andeen bazterretatik edo bizkarrezurraren gainetik, esan dezaket bere hitzetatik asko eta asko profeziak zirela: zentro eta hegoaldeko nazio familiarretako bortxaren profeziak, boterearengatik borrokatuko zirenak eta bizitza sozial eta politikoaren formuletako batengatik; diktadura hain ohikoak eta hain itsuak, edota horrenbesteko demokrazia ederrak proiektatzean eta horren erdizka lortuak; edo-eta sozialismo erradikalak eta komunista aldekoak, gaurkoak bezalakoak, agindu eta prometatzen dutenak eta zer emanen duten ez dakigunak, behar bada Kuban bezala,  etxafuego saiakerak.

Berak esanda jakin nuen Mariátegui, abizen hain euskalduna zuen delako bat bazela, komunismo perutarraren lehen urratsetan. Eta beste berri batzuk, probetxuzkoak izan nituenak misiolaritzako hurrengo hamar urteetan. Ez da ezer bitxia batzuk laguntzat bazuten eta bestetzuk gorrotatzen eta etsaitzat izendatzen bazuten `berarekin akabatzeko´ zerrendan.

Egun batean ene lagun min abade baten bisita proposatu nion, filosofia irakaslea berau. Solastatu ziren, ezagumenak eta iritziak elkartrukatu zituzten, aurrez ezagutu ez izanaz penatu ziren eta bakoitzak bere espaloiari jarraitu zion, bere eguneroko narratik. Ez zen hura unerik hoberena filosofiak egitera dedikatzeko.

Bere epaiketa era estrainioan moldatu zen. Bertatik desfilatu zuten, aurkako lekuko gisara, alderdi komunistako plana nagusia: Carlos Rafael Rodríguez, Anibal Escalante, Antonio Núñez Jiménez, Peñalver, Miguel Sampedro, Alicia Agramonte, denak ere akusatua odol ekintzekin uztartu nahian. Ez nago ziur, baina memorian dantza egiten dit Raúl Castroren izenak, bere aletxoa ere ipini gura izan balu bezala, testigu legez, Castaño paredoira eraman zezaten.

Pelayo fiskalak ez zuen aurkitzen bere heriotza zigorraren eskaria argudiatzeko modurik. Alde batetik pertsona baten aktibitateen eta bere ideia politikoei buruzko txostenen eta haren desagertzea eta heriotza bestetik, konexio horiek ezartzen saiatzea ez da erraza, nola eta txostenaren intentzioa ezpada pertsona hori zirkulaziotik erretiratua izateko eragitea. Baina Castaño heriotzara zigortua izan zen. Auzitegiak, hain zuzen, Victor Bordón Machado komandantea zuen buru eta sei batzordekide-laguntzaile izan zituen, armada matxinoko ofizialak denak.

Abokatu defendatzailearen esanetan, epaiketa ez zen erabatekoa izan eta oina ematen zuen bista itxaropentsua planteatzeko. Bere defentsa-planaren aurreko ene erreakzioa ezagutu nahi zuen.

Berak liluragarritzat zuen, nik liluratutzat ikusi nuen. Kanje-eskaintza batean oinarritzen zen eta ikusten zenez gerturatzeak izan ziren Estatu Batuetako enbaxadorea Kuban zenarekiko, eta tanteatua zen terrenoa. Zer moduz Kubak José Castañori hegoaldera joaten lagatzen bazion eta amerikarrek Kubari entregatzen bazioten diktadurako bi piura gorrotatuenak, Ventura eta Carratalá?

—Nire iritzia? Ez nauk peritu, ez nazioarteko politikan ez diplomatikoen arteko akordioetan ez eta legeetan, baina ezetz usaintzen diat, Ché ez doala hortik, kaltegarria ere gerta dakiokeela planteamendua, hain ongi eramaten denez USAtarrekin, egin ezak iruditzen zaiana, baina ene iritzia duk ezetz.

Martxan zen helikoptero batetik arrautza kaxa bat erortzen uztea bezala, eta paratxutik gabe ikusten nuen, "ikusiko duk nola-nola denak hausten diren eta ederki hautsi ere!".

Ventura eta Carratalá Kubara berritzuliek festa itzelerako aukera emango zuten habanar kaletarrentzat, Fidelen urtarrileko ongietorriaren gisakoa. Tximu-larruaz jantzirik paseatuko zituzketen, zuhaitz baten adarretatik zintzilik edota kamioien bateko barroteekiko plataforman. Edota beraiekin Francisco Goyakoaren maiatzeko fusilamenduen koadro ospetsua erreproduzituko zuketen plaza publikoren batean, mundu guztia pasa zedin ikustera. Baina aspaldi zuen jaiak amaitu zirela Chérentzat. Horrenbestez, presiditu zuen bistan sententzia berretsia izan zen: "Fusilatua izan dadila, gau honetan bertan".

Presondegira nindoan José Castañori esanda uzteko erabakia eta berarekin ikustera zertan enplegatu genezakeen bere bizitzaren hondarreko bi orduak. Orduantxe harrapatu ninduen Duque Estradak. Zuzenean harira. "Lagundu behar nauzu, oraintxe bertan, minutu bat galdu gabe, Fidel Castro ikusi behar dugu, eskatu behar diogu exekuzio-epea atzerarazi dezala eta ikus dadila kasua berriro". Ezin nuen sinetsi entzuten nuena. "Duque Estrada al zen hitz egiten zidana? Zer ari zen gertatzen? Ze biraketa arraroa, arraso arraroa, laurogeita hamar gradukoa, zen hau?". Sinestezina. "Itxaron pixka bat", eskatu nion, "Castañori esatera noak gertatzen ari dena, oraintxe itzultzen nauk".

Biok bakarrik. Bere jeepean. Apenas hitz egin gabe. Gauak inbaditutako Habanako kaleetatik. Esperantzen metxa batekin ariman dardarka. Heriotzaren kontrako karreran. Kubako bizitzen, ondasunen, onuren, azienden eta zorteen jabe berriarekin topatzera. "Lizentzia ematen al dit, ene jabe Fidel, bizitzen jarraitzeko?".

Fidel ordu horretan azukrearen sindikatuko egoitzan zegoen, jendez eta txaloz gainezka zen bere anfiteatrotzarrean, bere berezko diskurtso amaiezin bat gehiago jaurtikiz. Bere argi propioan bildua. Bera bakarrik eszenategian. Bere ahots berak ferekatua. Fidelez beterik, bere buruaz, bere dibinitateaz, jainkotiarra erromatar enperadoreak legez, Olinpoko jainkoen moduan, mesias eta salbatzaile, fantasia iraultzailea hitz eta haragi egina.

Beragandik hurbilen kokatu ginen, aldameneko bastidore baten atzean, airea hartzeko edota txaloak aditzeko pausetako batean ikus gintzan eran. Ikusi gintuen noski eta Duque Estradak besoak altxatu zituen. Gerturatzeko egin zigun seinale batera, bagoazkio korrika. Duque Estradak argitu zion zerk eraman gintuen hara. "Beno, beno, ondo da". Erretiratu gintezkeela adierazi zigun. Erretiratu ginen. "Eta? "Ba, ez dakit. Egia esan ez dakit zer den Fidelen ahoan `ondo da´-ren esanahia, bere jardun amaiezinetako baten erdian. Akaso, Camiloren faltan, `ondo noa?´ hari galdetu ordez, bere buruari ziurtatuko zion `ondo, ongi noa´. `Ondo da´ `konforme´ gisa uler liteke, ez duzu uste, pater?". Goazen gurutzearen seinalea egin, eta goaz lotara.

Autoa Cabañan lagata nuen; hortaz, bere bila bagoaz, eta Castañori gertatutakoa esatera banoa, eta ondo lo egiteko. “Fidelek esan dik: Ondo da, hau duk, bizirauten baimentzen diala, ikusiko diagu zenbat gehiago”. Zoriontsu sentitzen nintzen, ze eguzkia piztera itzuli eta argituko gintuen beste behin berriro. Goizaldeko ordu txikiena oso pasatuta erretiratu nintzen San Franciscoko ene komentura eta lotarako etzan nintzen.

Bozina-joka eta oihuka esnatu ninduten hirurak aldera. Aguiarko jende guztia, Teniente Rey eta Amargura artekoa, leiho eta balkoietara irtena zen zalapartaren zioa zein ote zen non ze barri. Komentuko atean itxaroten zidan motorra piztuta zuen jeepak bolido bat legez arrankatu zuen zangoak bertan sartu bezain pronto.

—Baina zer gertatu da?, Fidelek esan zigun…

—Fidelek galdetu zuen zer bilatzen genuen, bere diskurtsoa amaitzean, telefonoz hots egin zidaten, egoera argitu nion, Chék zer erabaki zuen galdetu zuen, esan nion eta ez zuen deus gehiago jakin gura izan: “Fusilatu dezatela oraintxe, zeren zain zaudete?”.

—Baina lehenago esan du…

—Ahaztu ezazu, padre, lehen ez zen enteratu ere egin, egin nizkion berbaz.

—Motel!, bat erotzeko modukoa duk hau…

—Esan liteke…

Ordubete hortxe zeramaten gure zain paredoian. Kinka horretan ere ez ziren ausartzen ene gabezia izanda ekiten. Sei fusilariak eta ofiziale taldetxo bat hizketan ari ziren plazatxoaren erdigunean. Murruaren oinetan, bakarka, esku-bilurrez libre eskuak, gora eta behera, gora eta behera bueltaka, heriotzara kondenatua. “Zer ari ote da pentsatzen? Nola argitzen diot gertatutakoa? Zer esaten diot?”. Gelditu egin zen ni ikustean. Hurbildu nintzaion. Inolako disgustu edo gogait seinalerik ez bere aurpegian, erabateko sosegua. Aitzakia bat abiatu nuen. “Asko sentitzen diat, barka ezak….”. “Utzi ezazu hori”, moztu zidan, “ez deust ardura”, ahots osoarekin, tonua aldaezina, “ez du ezer arrarotik, itxaroten nuen, ezagutzen baititut, padre, nik ezagutzen ditut”.

Paredoirako ezein laguntza ez zitzaidan hain erraza egin, bakarra be ez, zentzu batean, hain dramatiko eta mingarria. “Non da fusilatzen denekoa? Han, posteko hartan? Bada, goazen oinez, honokoa laburra izan dadila, oso gutxi geratzen zaigu esateko modukorik”. Ibili ginen, zutoinaren aurretik bi metrora geratu ginen. Pelotoia posizioan jarri zen. “Padre, mesede handi bat eskatu behar dizut, badakit ez dudala horretarako eskubiderik, zeuk ikusiko duzu eskain eskaini diezadakezun…, hiltzera noa…, badakizu nola pentsatzen dudan, padre, mesedez, zure fedea mailegatuko didazu, berarekin aurkezteko han, noranahi noala ere?”.

Harri eta zuri geratu naiz. Gutxien suposa eta itxaron nezakeena. Ez dakit zer pentsa, ez dut ezer pentsatzen. Berarekin besarkatu naiz, begiak itxi ditut, ez dut nahi negarrez ikustea ni, hitzik ez dut aurkitzen, ezin dut ahoskatu. “Ene fedea…? Ze fede?”, esaten diet neure barruei. Ezin sinetsi bizitzen ari naizena.

“Bai, José. Har ezak, hirea duk, eraman ezak….”. “Eskerrak padre, lasai hilko naiz”. Ez gara mugitzen, besarkaturik iluntasunean, zer esanik ez zen jada. “Erreza beza zerbait, padre, neuk zurekin erreza dezadan”. Gure Aita errezatu genuen. Oso mantso, lerro bakoitzean geldituz, besarkadatik askatu barik: “… eta libra gaitzazu gaitzetik. Amen”. Gurutzea ezpainetara hurbildu nion. Musukatu

zuen. Hil zen begiak irekita, oso irekiekin, jauzi, korrika egin nahi balute legez, eternitatearen abenturan murgiltzeko presa balute bazalaxe.

Otsaila, martxoa eta apirileko hilak izan ziren gogorrenak. Maiatzean —arrazoiak ez dakizkit—, zenbatzeko modukoak izan ziren fusilatzeak. Ché Guevararen osasunaren txartzeak, bere asma kronikoaren zikloak eta atsedena hartzeko lekualdaketak eta Tararáko hondartzako suspertzeak, zerikusia izanen zuen, agian. Abisu-antzeko hots anonimo bat barreiatu zen: "Atseden bat da, ez egin ilusiorik, justizia iraultzailea ez dago lo, kargu hartu beharrekoak itzela izaten jarraitzen du".

Auzitegiak batetara murriztu ziren, erritmo geldoan lan egin zuela. Hilaren erdia aldera paretak ez zuen gauerditik aurrerako ororik egiten jada. Heriotzaren Galeratik joan eta itzultzen ez zirenen tan-tana agortu zen eta egitate horrek, besterik gabe, erakutsi zien gutxi gora-behera hamabost kondenatuei maiatzak udaberria esan gura duela, eta honek irribarre egiten zietela galerako leihatiletatik kirik. Gauero jarraitu genuen arrosarioa errezatzen. Goizero jaunartzen segitu zuten.

"Tartea probestu ezak eta hoa sendagilearengana", erdi-abisu, erdi-erregu, Casablancako ahots maiteenak neure burua zaintzeko eskatzen zidan. Eta kasu egin nion. Ramón Casas doktorea elkar ikustera joan nintzen. Azalaren eta larruazalaren azpitik eskukada galderekin aztarrika eginez, medikuaren begiek bere ezpainek baino lehenago esan zidaten gustuko ez zuen zerbait ikusten ari zela.

—Ikus ditzagun egin behar dizkizuten laborategiko frogek zer dioten, baina oraindixe ohartarazten zaitut zaindu behar zarela eta opor ederra hartzea komeni zaizula.

—Baina zer ikusten duzu txarto?

—Deus ez txarki, gaitza esan litekeena, eta ezer ez ongi, guztiz ondo esan litekeena. Atsedena premiazko duzu, has gaitezen hortik.

Nire nagusiarekin berba egin eta Cabañatik denbora puska baterako alde egin nezala esan zion. Lagun batek, denboraldi hartan Mexikoko lurretatik predikari zebilenak eta egun haietan Habanan zenak, berarekin eramango ninduela proposatu zuen.

—Baldintza batekin, hirekin lan egitea ez dadila izan, oso astoa haiz-eta. Noski, atseden hartzera.

Ekainaren erdialdera Mexikorantz aterako nintzela erabaki zen. Aurretik bisita egin nahi izan nion Guevara komandanteari bere Tararáko erretiroan. Adostu behar izango nukeen bisita. Mariano Errasti aitarekin batera aurkeztu nintzenean, "Deskantsatzen ari da", esan zidaten: "eta gero bilera oso garrantzitsu batera aterako da; beste egun batean etorri beharko duzu".

Egun haietako batean La Quincena aldizkariko argazkilariari jira bat antolatu nion Cabañatik. Erreportajea aita Marianok idatziko zuen. Argazkilariak presarik eta murrizketarik gabe lan egin ahal izan zuen, hala aldizkarirako nola bere bilduma partikularrerako, nahi zituen argazkiak ateraz.

Ekainaren hamabian, goiz-erdian, Guadalupeko amabirjinaren, Zumarraga artzapezpikuaren eta Pancho Villaren lurraldera eramango ninduen hegazkinera igo nintzen. Casas doktorearen gutuna neraman, bere laguna zen neurologo bati zuzendua. Rancho Boyerosko aireportuan jabetu nintzen, ordu batzuk geroago Chék beste abioi bat hartuko zuela, Ekialde Hurbilerako helmuga zuena. Lokartu nintzen eta amets egin nuen: euskalduna, mexikarra, kubatarra eta argentinarra zain neuzkan Moctezuma ezagutzera eramateko ni.

Mexiko eta lagun berriak, euskaldunak, mexikarrak, asturiar eta baturro banak primeran tratatu ninduten. Leku batetik bestera eraman ninduten, Pueblara, Fortín de las Floresera, Teotiuacánera, Cuernavacara, Qurétarora, Guadalajarara, puro pique mexikarra jatera, zinemara, antzokira, euskal eta espainiar sukaldaritza jatera, kirol gertaera emanaldietara, bai eta sekula joaterik pentsatuko ez nukeen zezen-korrida bat ikustera ere, eta otordura berriro. Baina, jainko santua!, lehertuko naizela! "Amore emazu, no más, eta berriturik utziko zaitugu Kubara itzul zaitezen".

Euskal sendi batekin bizi nintzen, Sopuertatik eta Galdamestik etorritakoak; senarra Francozalea, andreari `igualtsu zait´, iloba heldua abertzale separatista, letagin zorrotzekoa. "Eta zeu?". Eta nik: "Zergatik ez dugu beste edozertaz berba egiten, bai, politika ez den beste edozertaz?". Eta hola hobekiago joan zitzaidan. Hiru hilabeteetan bi alditan predikatu behar izan nuen, Coyoacángo Parque Centenarioko frantziskotarretan eta Amecamecako erdi-kobazulo zen elizatxo batean, liluragarria, gora igoz mendi elurtuak, gora igoz hor aurrera. Sermoia debaldekoa izan zen, baina sagar-zakua oparitu zidaten, etxekoandreak irasagar finenetakoa, oso goxoa, bihurtu zuena.

Neurologoari hiru aldiz soilik egin nion bisita, iristean, hilabetera eta bi hilabeteetara. Oso tratu atsegineko pertsona, Casas doktorearen gutuna irakurri, galderaz josi ninduen eta, koadroa egina izan zuenean, medikamendu berri batez, oraindik esperimentatzen ari zirenaz hitz egin zidan; espero zen neurosi depresiboak prebenituko zituela, bere kausen blokeo bat sortuz; erroen erauzketa modukoa, eta neure buruarekin erabiltzeko baimena eskatu zidan.

Zer dakit nik gauza horietaz?, onak eta intentzio onekoak begitantzen zaizkidan pertsonez fidatzen naiz, sendagilearen trebezian eta zintzotasunean sinetsi nuen; ez zitzaidan otu ere esatea zergatik ez genuen bigarren iritzi bat bilatzen, eta besterik ezean bere eskuetan ipini nintzen. Horrela izan zen Cabañako kaperau izatetik indietako akuri izatera pasa nintzenekoa.

Tratamendua oso eraman erraza zen: pilula batzuk irentsi, ongi jan, gorputzak eskatu ahala lo egin, distrakzioa, paseatzea. Sekula ez dut jarraitu tratamendu hobeago bat. Bi alditan joan nintzaion aztertu nintzan, eta bigarrengoan eman zidan alta. "Eta zer zor dizut, doktore?". "Deus ez, benetan, ez didazu ezer zor, hobe esan ni nintzateke zorretan…". Eta akuriak jauzi egin zuen berriro, fidakor eta zoriontsu, bere belar-zelaian.

Kubara itzulita, berri sentitu nintzen, hain berria non sabaipe guztian bizi izan ginen denak berrezagutzen nituela, lankide guztiak, gutxi gora-behera ezaguturiko oro, bakoitza nolakoa zen, zertan zebilen, irakurtzea edo txisteak entzutea gurago zuen, Rafael ala Beni Moréren kantak gustukoago zituen; inprimategian, sukaldean edota sakristian lan egiten ote zuen akordatu bai, baina euren izenak ezin gogoratu, munduko edozerengatik ere ez nituela oroituko!

Lehen egunean ikaratu egin nintzen. Tratamenduarena esan nien eta gutxira, barre artean, dena normaltasunera itzuli zen. Bitxia. Cabañako oroipenak beste era batera erantzun zioten tratamenduari. Izen asko betirako ezabatu ziren memoriaren arbeltzarretik, baina gogorren kolpatu ninduten viacrucisen izenak eta pausuak gogoan neuzkan. Ez nuen gura ene bizitzako barru-barrengo zati zen Cabañak nire izateari aldegiterik, apaiz ordenatzeak lez edo Amerikarako ene destinoak, gorputzarentzat begiak, bernak edo giltzurrunak bezalaxe.

Egun gutxi batzuetara eskatu nion aita Luis Lizarralderi, Casablancako parrokian ordeztu ninduenari faltatu nintzenean, lagundu ziezadala Cabañara. Bidean kontatu zidan, joan ni eta egunetara esan zioten deituko ziotela fusilamenduetako gauetan igo zedin eta gehiago igotzeko lanik

ez zezala hartu geroago; hilabete horietako tartean hamabosten bat gizonei lagundu ziela paredoian, tratua egokia zela, baina lehorra. Halaxe egia.

Ché Guevararen urruntzeak pertsonalaren aldaketa zorrotzak ekarri zituen. Inork ez ninduen ezagutzen, jada ez zen lehenago bezala, langarik gabeko larrean legez mugitzen nintzenekoa. Hiru pausutara identifika nendila eskatzen zidaten, Heriotzaren Galerara iristen ez zidaten permititu; halere, han laga nituen batzuk han jarraitzen zutela jakin ahal izan nuen, gutxienez bosteko taldea: beroietako baten izeba moja Erroman bizi zen eta kapa eta kota oso luzeko eta eragin handiko kardinal bat beraz arduratu zen eta bostekoaren kasuak bazterrean geratuta segitzen zuen, `ikusteko dagoelakoan´.

Aldiz, Ereinotzen Hobira iritsi ahal izan ginen inork molestatuak izan gabe eta luzaro egon ginen bertan. Oroimenetan atzera egin nahi nuen, memoriako ehuneko puskatuetan pasaratzeak, halako eta beste halako gauetako koadroak berregin, eta itzultzerik ezin deneko ahanzturaren leizeetan hondoratzeko arriskuan diren izenak eta xehetasunak azalera ekarri. Han jarraitzen zuen inoiz erabili ez genuen zutoinak, hantxe balaz jositako murrua, han hartan, isiltasunean flotatuz, azken errezoa, azken besarkada.

Adio esan nion Cabañari. Ez nintzen itzuliko berarengana. Bera etorriko zen nirekin, noranahi nindoala ere. Egiazki, berriturik itzuli nintzen Mexikotik. Gogoratu nahi izan nuena errespetatu egin zidan, gainontzekoa ezabatu eta dena estualdirik eta beldurrik gabe joan zen, bake santuan eta lasaitasunean.

Bi hilabete geroago, Congreso Católico Nacional delakoaren baitan, Acción Católicako Asanblada orokorra ospatu zen. Casablancako parrokia eta San Franciskoko komentua utzi, eta etxe unibertsitario katolikoan bizitzera iragan nintzen. Vedadon, handikeriazko zelofanez inguratua eta, prestaturik ez nengoela sentitu arren, onartzeaz lotsaturik aldi berean. Cabañako mamu zaharrak, han egiten zuen balantza ene fedeak heriotzaren aurrean eta hemen bizitzari aurpegi emanez. Ze ilusiozko fedearen bandera jaso nezakeen gazteek bere egin zezaten, koloretxozko paperez eta hitz politez eginikoa ez bazen? Zer nuen eredugarri eta jarraitzeko modukoa eskaintzeko? Eta, hala ere, onartu nuen. Barka naza Jainkoak.

Hilabeteak pasa eta 1960. urteko ekainean Espainiara bidaiatu nuen, zeren eta nire aita hiltzen ari baitzen eta ene nagusiak erabaki zuen bertan egon behar nuela ordua iritsitakoan. Itzultzerik izanen nuela agindu zidan. Neure itzulera galarazi zuena Madrilgo Kubatar Kontsulatua izan zen. Bidai horrek eman zidan aukera Ernesto Ché Guevara de la Serna komandantearekin elkar ikusi eta solastatzeko azkeneko aldiz.

Bidaiari batek, pasaportea eskuan, gehienez hirurehun dolar dibisetan eska zezakeen banku batean kanpora irteteko. Nire pasaporteak erakusten zuen atereak nituela herrialdetik hamaika hilabete aurretik, Mexikora bidaiatu nuenean. Bada, lagunak nahi zutena, hobe esanda eman ahal izango zidaten dolar eskukadatxoa eramango nuen, eta zoaz Jainkoa lagun.

Akordura etorri zitzaidan Ché zela Kubako bankero handia, Banco Nacionalaren presidente, ez gutxiago, bere `Ché´ ospetsua estanpatu zuena sinadura gisa peso kubatar baten billete berrien jaulkipen batean. Bere bulegoa San Franciscoko komentutik bi metrotara zegoen, Amargura kalea zeharkatzea aski zen.

Oso adeitsu eta hiztun hartu ninduen. Cabañako errege-egun hartan bezalaxe. Ene bisitaren zioa azaldu nion. Iraultzaile zorrotzak, legea zurrun arraio, justizia orbangabea eta zigor eredugarriaren aldekoak galdetu zidana:

—Eta zenbat lapurtuko zenioke gobernuari, herriari ebastea bezalatsu baita?

—Bada egia esan, ostea, salba naza zeruak, komandantea, ez nago prest osteko, ezta zentabo bat bera ere; zuri eskatzeko, legeak deritzon hirurehunak, eta `tiratzeko´, gobernua uzten bada `teinkatzen´, beste hainbeste.

—Eskuan al dakarzkizu bostehun peso? Horraino baimentzen dizut eta ez gehiago.

—Gainean dakartzat.

—Emazkidazu eta nik emango dizkizut bostehun dolar.

—Eta ez nauzu kartzelaratuko zu usteltzen saiatzeagatik.

—Bai, egin beharko nuke, ezta? Zerorrek onartzen duzu, baina ikus ezazu zer nolako bihotzarekin lan egiten duen iraultzak…

Mahaiko tiraderetako bat ireki du, hogeinakako billete-sorta atera, hogeita bost arte kontatu ditu eta eman dizkit. Bere osasunaz mintzatu ginen pixka batean, Kubara itzultzeko nuen desioaz, iraultzaren martxaz.

—Ba, gauza batzuk gustuko ditut, bestetzuk ez, zuk bezalaxe segur aski.

Onartu zuen, batzuk gustatzen zitzaizkion eta beste batzuk ez. Eskua eman eta despeditzeko altxatu nintzenean, galdera bat zuzendu zidan, gaur egun oraindik [berrogeita hamaika urte galdetu zidanetik, eta bere Bolibiako zoritxarreko abenturan hil zenetik berrogeita lau urte] erre eta mintzen nauena:

—Nola katalogatuko zenuke, zein izen emango zenioke biok elkar ezagutu genuenetik mantendu dugun harremanari?

Begira geratu nintzaion, ez espantaturik ere galderaren nolakotasunagatik, baina ezbairik gabe oso harriturik, sekula ez nuen halakorik esperoko berarengandik etorrita. Bere begiekin, orratzak bezain zorrotzak, nire begietan tinko zituela, itxaron zuen erantzuna. Hitzak pisatu eta neurtu ditut:

—Esango nuke erlazio lagunkoia-edo izan dela, elkarrekin hara aldera ibili baikina lez, baina ez nintzateke ausartuko baieztatzen benetako adiskide izanez mamitu denik.

—Egia da —erantzun zidan—, ez gara lagunak izan, zuk zure espaloira eraman nahi ninduzun, eta porrot egin zenuen; zeu neurera erakartzen saiatu nintzen, eta pott egin nuen. Jantzita daramatzagun mozorrorik gabe berraurkitzen garenean, etsaiak izango gara aurrez aurre.

Burutik oinetarainoko dar-dar izoztu batek zeharkatu ninduen. Erantzun beharra neukan, ez nekien zer esan berari.

—Mozorroak esan duzu? Komandante, nik sekula ez dut mozorrorik jantzi, ez dakit zer den hori.

Elkarri begira gelditu gintzaizkion pixka batean. Zin egingo nuke: ez berak eta ez nik arerio begiradarekin. Bostekoa eman genion elkarri. “Bidaia on”, esan zuen berak. “Zorte on”, erantzun nik. Eta hala irten nintzen bulegotik.

# HAMALAU

Igande arratsalde-erdia.
Isiltasuna bizi da eta isiltasunaren
jabe bakarra da bera Ereinotzen Hobian,
heriotzaren plaza.
Hitzak gora egin dute
harresiaren paretetatik igoz,
pitzaduretan gorde dira,
belar sastraken alboan.
Harresiak isiltasun-lurrinak
destilatzen ditu.
Haize bafada bat sartzen da eta
izkinetatik zokomiran dabil,
zakur deslai hezur eta azal buztan-luzeren
pare, bere nagusiaren usnan erdi-trostan.
Tantai baten oinetan gelditzen da.
Heriotzaren masta da.
—Noren bila habil?
—Nire nagusiaren.
—Hire nagusia joan huen,
hor erori huen
eta eroan ziaten
pinu kaxa merke baten.
—Eta nola dakik hik? Nork esan dik?
—Neu nauk testigu,
lekuko mutu, isiltasunaren lagun.
Kaobazko arbola batena ninduan.
Etzanarazi zitean ordu txarrean.
Artista batek eraman zian puska bat
eta berarekin egin zian san frantzisko bat
usoa besaburuan zuena.

Beste askoz tristeago bat izan huen ene zortea.
Ekarri ninditean hona izateko postea
uztaia duena bizkarrean
gau eta egun zaintzen duena
kondenatua
zutik hiltzeko bere haragia nirera
kateatu beharra daukatena.
Neuk jasotzen diat bere azken oihua,
neuk baretzen beraren bihotzaren
azken taupada-jauzia.
—Hala hil huen ene jabea.
—Ez. Aurten oraindaino ez ditek lotu inor,
denak eskatu diate
hiltzea begiak itxi bage,
zutik euren oin-gainetan.
—Eta inork ez dik etsi?
—Ezta inork ere.
—Zergatik?
—Ez zakit.
Batzuk hipnosia ziotek,
bestetzuk fedea zerabiltek,
ez zakiat.
Galde egiok isiltasunari plaza honetan
heriotzaren oihartzun-zerbitzari denari.

Gau erdiaz ulertzen dena gaueko hamabietatik goizeko hiruretara doan denbora tartea da. Oso aldi bakanetan gertatu zen hamabiak baino lehen edo hirurak ondoren. Cabañan 1959ko lehen bost hilabeteetan gertatutakoaz ari naiz. Gau erdian deskargatzen zituzten euren gorrotoak eta botaka egiten sententziak epaitegi iraultzaileek: `Hogei urte, hogeita hamar urte, biziarteko zigorra, heriotzara kondenatua´. Gau erdian, paredoiko bidean zihoazenen adio bakoitzaren urraduratik odol-jario zen Heriotzaren Galera.

Gau erdian penatxo nuen nik nonahikotasunaren dohaina ez izatea, ezin izan aldi berean tribunaletan, Heriotzaren Galeran, eta nahi nondik deitzen zidatenetan ere, itzalen aurka borrokatzeko, Jainkoarren!, ni, gau-erdian, argia eta itxaropenak ereinez, hain erdizka nituenak horiek niretzako…! Gau erdian heriotzaren karabana presa barik zihoan galtzada-harrizko kalexkatik, fosoaren gaineko zubia zeharkatu, zelaigunera atera, eskuinera jo, zementuzko santokristo erraldoi hotzari diosala egin eta Ereinotzen Hobian sartzen zen.

Gau erdian sei soldaduz osatutako pelotoia prestatzen zen, fusila sorbaldan, gizon baten, biren, hiruren, aurretik jartzen zitzaizkienen bizitza segaz ebakitzera. Gau erdian gizon bat edo bi edo hiru, seinalatuak izan ziren haiek, zutik eta kopeta goran, hiltzeko prestatzen ziren. Gau erdian mintzo nintzaion ni gizon horri; argia den, maitasuna den Jainko horretaz, heriotzaren bestaldean itxaroten duen horretaz; berarekin errezatzen nuen Gure Aita, eskuan neraman gurutzefika luzatzen nion muin egin ziezaion, besarkatzen nuen, adio.

Gau erdian misterioak setiatzen gintuen denok ere, erantzunik gabeko misterioa. “Non hago Jesús, Pedro, Luis, José? Non zaudete?”. Sinestun zirenentzat egunsentia zen misterio bat. Gau erdian…

Cabañan gertaturikoetan protagonistak garai hartan hiru ginen: hiltzera zihoana, hiltzen zuena eta ni, Jainkoaren pailazoa, ez neukana eman gura nuena. Orduan hogeita hamar urte nituen; gehitu horri iragan diren beste berrogeita hamahiru urte, eta gaur, 2012ko urtarrilaren 6a, laurogeita hiru konta ditzaket. Han eta orduan geure bizitzak gurutzatu genituenok, eskuak eman eta galde geniezaioke elkarri, bidaia luze batetik bueltan bi lagunen antzera: “Eta nola joan zitzaizun?”.

Pedro Morejóni eta segidan joan zirenei —berrogeita hamabosten berri dut soilik, lehen bost hilabete haietako bakarrak, nik sorostutakoak— galdetzea alferrikakoa da. Fedearen antenak ezin dute beraien erantzuna aditu. Sinets dezakegu, baina ez dakigu. Sinesten badugu bizitza presentea beste bizitza batekin bat egiten dela heriotzako orduan, nola ibaian doan ur-tanta ozeanoan urtzen den bezala ibaiak entregatzen duenean, horrela sinesten badugu, berrogeita hamabostak bizi dira. “Eta zoriontsuak ote dira?”.

Jakina, hemen bizi dugun zoriontasunarekin, ez. Eta inork ez daki zertan datzan beste bizitzako zoriona. Bizi direla eta zoriontsu direla sinesten dugu. Eta beraiekin topatuko ote gara egunen batean? Gustatuko litzaidake, baina ez dakit, agian. Hil direnekiko harremana oroimenaren eta fedearen bidez soilik letorke.

Euren senitartekoekin, komunikazioari bizirik eustea gustatu izango zitzaidakeen; adibidez, Jesús Sosa Blancoren sendiarekin. Ideia lauso bat badut, norbaitek esan zuela Kanadara lekualdatu zirela eta alabetako bat erlijio kongregazio batean sartu zela. Hamar urteetan egin nuen bizitza, etengabeko mugimenduan eta posta helbide finkorik gabe, ez da hoberena lagun harremanak lantzeko. Bizi bitez denak, biziak eta hilak, Maitasunaren babespean.

Esan dut bigarren protagonista fusilaren katu kolpekaria sakatu eta bizitzak ebakitzen zituena zela. Ordenak obeditzen zituena, alegia. Bai eta hiltzea agintzen ziona. Eta honen nagusia. Agintzen zuten "buruak" arteraino, goitik diktatzen zutenak zer den iraultza eta nola egiten den iraultza. "Nola joan zitzaizun?" horiek, Cabañako gertaeren arduradun nagusiei zuzenduz gero, Fidel Castro eta Ernesto Ché Guevararen aurrean kokatuko gintuzke. Azken hau hil zen. Eta hildakoei, bakea. Bakea eta kito. Hala behar luke, baina…

Ché Guevara mito bat da. Gustuko dugun ala ez, onerako edota txarrerako. Ideal batez maitemindua eta ideal horren postulatuak leial bizi eta aplikatu egin zituen. Prozesuan, gogorra izatera iritsi zen, oso gogorra, krudela, oso krudela. Horrek bilakatu zuen harro ala handikeriak eraman zuen horretara? Ez dakit. Harroputza, bazen. Eta segurua, bere buruaz ziur zen. Batik bat, konbentzitua eta iltze guztiak ondo errematxatuta, ideal marxista-maoistarekin erabat identifikatua, erortzen zena erortzen zela, heriotzaraino.

Nire ustez, bere lehen akatsa historia —eta antropologia eta ekonomia eta soziologia— besteen begiekin, Karl Marxen eta enparauenekin irakurtzea, eta irakurritakoa dogma bihurtzea. Horrela pentsatzen dutenak errespetatuko ditut, beste batzuk pentsatzen duguna errespetatzen bagaituzte, baina errakuntza dela deritzot. Bere bigarren oker handia izan zen uste izatea Sierra Maestran altxatu zirenak gerra bat irabazi zutela eta, gertakari berdinak errepikatuz beste edozein eskenatokietan, beste gerra bat eta beste bat eta beste bat irabaziko zituztela, gerla guztiak, denbora-kontua zela.

Hain adimentsuz zeuzkaten gizonok euren buruak, eta nola sinets zezaketen halako disparatea? Giza-adimenaren mugidak errealki aurreikusi ezinak dira. Sinesmen ergel horren biktima erori zen.

Berarengan gehien miretsi nuena bere egiazaletasuna izan zen, eta bere aurretik inor ez zuela jarri bera seguru ibiltzeko; beste batzuk ordea egin zutena Sierran eta Sierratik kanpo. Esan nahi nuke halaber, bera deabrutu nahian gezur asko esan direla.

Ez dakit zeintzuk diren baieztapen hauen egileak, baina interneten argitaratutako orri batzuetan irakurri dut urtarrilaren 2an agindu zuela fusilatzeko, aurretiko epaiketa barik, eta parte hartu zuela berrogeita piku pertsonen fusilatzetan; Cabañako komandante izan zen denboran agindu zuela fusilatzea, hauek epaiketaz, zerrenda baten arabera, hirurehun eta berrogeita hamar pertsona; beste batzuek diote bost ehundik gora eta, horien denen arabera, berak esku hartuz exekuzioetan; 1959ko azaroaren 26an fusilatzeko agindua eman zuela, ez dio epaiketarik ala gabe, berrogeita hamar eta piku gizaki, Cabañan betiere. Hor ez da batere egiarik.

Sierra Maestran hil egin zuen, Kongon erail zuen, hil zuen Bolibian? Baietz diote eta asko gainera. Nik ez dakit. Baina Cabañan, 1959 urtean, heriotza zigorrerako irizpena emango zien berrogeita hamabost gizonei, baina ez zuen inor hil ez eta bertan egon inoren exekuzioan. Espero dut pixkanaka hozten eta itzaltzen joango dela mitologiaren aldareetara jaso zutenen debozioa, ez dut ulertzen zergatik eta gutxiago endelegatzen dut bera ezagututa. Edozein eratan, esan dut lehenago, "Hildakoei, bakea". Fidelekin zituen desadostasunak medio atera zen Kubatik.

"Ez ziren baso berbererako zuhaitzak", esan nuen behin eta errepikatu egiten dut. Mundua askatzera atera zen, konbentzituta tiroka boterea hartuz egin behar zela hori, gerrilla-gerlen bidez, eta prozesuan, ez dakit berez ez ote zen izango, "gizon berri" bat jaioko zela; lehenik Afrikara joan zen, Kongora, non ezer eta inor ez zuen libratu; Bolibiara pasa zen eta ez zitzaion hobekiago joan.

Diotenez, bera hiltzea zoazenei esan omen zien, bizirik gehiago balioko ziela hilik baino. Uste dut baietz, baina beste batzuk ez zioten sinetsi eta erail zuten.

Cabañan ezagutu nuen egunetik zazpi urteetara jakin zuen munduak Ché Guevara Bolibian hil zena; Liman nengoen ni. Arratsalde hartan hasten zen Señor de los Milagrosen bederatziurrena eta bertako sermoia ematea ene esku utzi zidaten. Nire lehen hitzak hauek izan ziren, gutxi-asko: “Gizon bat hil da!”. Eta gurutzean iltzez josita aldaretik gailentzen zen Kristoari zuzenduz, “Zuk badakizu nortaz ari naizen, espero dut bera urrikal izango zenuela eta bere bidera aterako zinela Aitaren etxera eramateko”. Behin baino gehiagotan pentsatu izan dut Chérengandik hurbil egotea gustatuko litzaidakeela haren partitzeko tenorean. Nork daki berak ere ez ote zuen gurako?

Noski galdetuko niokeela Fideli: “Eta nola joan zaizu?”. Nahiz eta ezaguna dugun bere arrapostua. “Ongi, oso ongi, ezin hobe. Iraultza, tatxagabea bere sorreratik eta garaile amaieraraino. Etsaiak, zuek, ez entzun ez ulertu gura ez zenutenok, eta oroz gain Estatu Batuak, deabruaren satrapia hori, zuek duzue gauzak hobekiago joan ez izanaren errua”. Fidel, jakina da: “antz-azturak hilobiraino”. Fideli ez dio inork entenditzen, bere buruak ere ez dio ulertzen. Zer gehitu diezaioket nik alde ala kontra kubatar iraultzaz esan denari?

Ene iritzian, Fidel Castroren nortasun kontrolaezinak eragin zuen oso goiz iraultzako urak uholdean atera zitezen, eta gainezka ero batean korrituz harrapatzen zuten lursail oro urpean uztea eta aurkitzen zuen guztia kaltetzea. Pultsu eta erritmo neurtuagoekin gidatu balu, bere egundoko NIaren sareak harrapatua izan barik, bere karlin-txakur jarraitzaile sutsuak ez zirenaz beste guztiak etsaitzat hartu ez balitu, baita bere hurbileko kolaboratzaileak ere, entzuten jakin izan balu…

Iparraldeko “goliat”-a garaitu zezakeen “david” bat bezala azaltzeagatik munduaren aurrean, ez balitz errenditu ekialdeko beste goliataren interes eta aginduetara, sekula akatsen bat aitortu balu umiltasunez, bat bederik ere, ez balu hainbeste eta hainbeste eta hainbeste gezur esan, eta ez balu hainbeste eta hainbeste eta hainbeste gorrotatu, eta bere buruari ez balio hainbeste eta hainbeste eta hainbeste entzun, eta bere herriari eskaini izan balio eskaintzen omen zion maitasunaren milako bat… Iraultzak on handia egin izan zezakeen.

Bere etsaiak izanagatik, hasieratik izan zituen eta edukitzen dituela jarraitzen du, indartsuak dira gainera. Baina, izan ere, etsairik okerrena barruan zuen iraultzak, barru-barruan, oso-oso barruan. Fidel Castro beraren nortasun neurotikoa zen, kontroletik at zihoana. Nola galdu liteke jokoa triunfo guztiak eta lau batekoak edukita? Esan diezadala dakienak.

Fidel Castrok ni baino urte bi gehiago ditu: laurogeita bost. Zenbat geratuko zaizkio bizi-arteko? Eta gero? Norbaitek uste du iraultza kubatarrak etorkizunik baduela Fidelik gabe? Ez nik. Kubak min dagit, bere etorkizun pluskuanintziertoak, barruko eta kanpoko kubatarrak egingo dutena, hain jantziak batzuk eta bestetzuk elkar mesprezatzen eta gorrotatzen.

Orain ni falta naiz nola joan zitzaidan esateko. Nondik joan zitzaidan esango dut lehenbizi. 1960ko ekainean nire herri Euskal Herrira joan nintzen eta gure aitaren heriotzaz arduratu nintzen, eta hiru egun geroago anaia nagusiarenaz, zoritxarreko istripu batetik denok ere zauriturik atera baikinen, eta bera hilik. Ezin izan nuen Kubara itzuli ez baininduten ametitu eta 1961ean Amerikarako Misiolari Taldera destinatu ninduten.

Medellinen, Kolonbian, integratu nintzen bertan, eta berarekin herrialdeko gainerakoa korritu genuen, Ekuadorrera pasa ginen, Miamira bidali ninduten urte betez eginkizun berezi batean, taldea berrartu El Salvadorren, Perura salto egin genuen; hemen Taldeko buru izendatu ninduten, ezetz esan

nuen, nire gainekoak berearenarekin irten ziren, esan nien: “Zabiltzate kontuz, ea buru ez baino lurperatzaile izaten naizen”, eta horrela izan zen eta 1968an Amerikarako talde misiolariaren gorpulorra ikusi nuen.

Denbora guzti honetan sermoi asko eta ahal nuen ongien eman nituen. Gotzain askorekin eta kardinal pare batekin eduki nuen tratua. Tratu honen ondorio atera nuen, elizan, hierarkia eta klero mailan, gutxienak zirela `Jainkoaren erreinua´ Jesusen Ebanjelioa arabera iragartzen eta bizitzen zutenak, eta gehienek eliza hezur dislokatu bihurtzen zutela gizartearen aurrerapen bidean; eliza bat, ankilosaturik bizi zena, atzera begira eta tripa haztakatuz; alabaina, eliza maitatzen segitzen nuen, neurea baitzen.

Ahul eta nagia izan nintzen aunitzetan eta denbora asko galdu nuen auzoko ortuko sagarrei begira. Ene nagusiaren gustuko ez zen zerbait idatzi nuen. `Errieta bat merezi eta laguntza behar al nuen?´. Ez bata eta ez bestea, baizik eta alderantzizkoa. Ez dut ulertzen nola elizgizon batzuk iritsi diren apezpikutzara eta erlijio ordenuetako nagusi burutzara. Kanporatu egin ninduen. “Hoa nahi duan lekura, baina urruti, ez haut ikusi gura”. Burua altxa ezinik eta hegalak bailiran ilusioak mugitu ezinik betirako.

1974an Puerto Ricoko hondartza batean itsasoak botatako oholtzar bat nintzen ni, hondoratze baten hondar hilkorra, desilusioen eta desengainuen hondakina. Hiru psikologoekin, haietako bi abade, berba egin nuen. Denak zioten elizan ongia baino kalte gehiago egiten nuela eta apaizgintza uzteko aholkatu zidaten. Erromara sekularizazioa eskatu eta sute baten oihuari suhiltzaileak baino azkarrago erantzun zidaten. Lagun batek esan zidana: “Ongi joana izan zaitezenaren usaina dauka, eta ez bururatu ere itzultzea”. Ezkondu nintekeen.

Hondartzatik oso hurbil bizi zen neska bat ezagun nuen. Ezkontzeko eskatu zidan.

—Baina hi baino askoz zaharragoa naun.

—Ez dio axola.

—Axola lezake.

—Ez duela axola esan dut.

Eta ezkondu egin ginen. Berak arraun egin zuen, berak hartu zuen lema, berak xukatu zituen urak, eta nahiz eta ene erruz itsaski gogorrak eta turbulentziak zeharkatzea tokatu, berak gidatu portu segurura eta salbatu ninduen. Hiru kimu hezi genituen. Hogeita hamazazpi urte geroago, ez gara aberatsak, baina bai zoriontsuak.

Ez ditut ene fede arazoak konpondu. Edo soluzioa eman diet, bai, baina atzera itzuli gabe. Ez noa kontua zabaltzen, baina teologoen tailerretan fabrikatuak direla kontsideratzen ditudan dogma orori uko egin diet, Jainkoarengan sinesten dut, bizitza sortzen duen Bizitza den heinean, sorkuntza, maitasuna, energia eta argiaren iturri, guztian dagoena eta den ororen funts den, denok anai-arreba egiten gaituen neurrian. Eta Jesusengan eta bere ebanjelioan sinesten dut, bere berri onean, bere `erresuman´, bere salbamena maitasunean, egian eta justizian, “Eta zertarako gehiago?” galdetzen diot ene buruari. Eta bakearen brisak bizirik sentitzen ditut nigan.

Duela gutxi bidali zidaten bideo bat, lagun batek Habanako kaleetan eta Cabañan filmatu zuena. Horren berri banuen: nik ezagutu eta bizitutako Cabaña ezberdina zen. Presioaz garbitu dituzte harriak, kanpora daramatenak ez pintatzeko gustu ona izan dute, burdin hesiak erretiratu dituzte,

burdin tonak dudarik gabe, eta ate berrietan ikusgai laga duten bakarra iltze-buruak imitatzen dituena izanen da.

Kartzelako patioa espazio ireki, garbia da, oholtza bat du eta bertan taularatu beharko dute artistek, pertsonaien ordez, han bizitutako historia. Galeren ahoak, irekiak, suposatzen dut historiaren kapitulu desberdinei eskainiak direla, Cabaña berria Museo izatera etorri denaren zati gisa. Kaperatxoaren eta Heriotzaren Galerara zeraman korridorearen sarbideko atea itxirik, eta ene laguna ahalegindu arren norbaitek ireki ahalko edo ireki gurako zion, ez zuen aurkitu, eta ezinezkoa izan zitzaion ikustea nola zaintzen duten ene burua kanpotik urdintzen hasi zen eta barrutik ia kiskaltzekotan izan zen puntua.

Epaitegien zerbitzua egin zuten galerak abegitsuak ikusten dira, krema argiaz margotuak eta beren bitrinak eta beirazko arasak, antzinako historiaren erakusleiho apika; baina ez han apenas orain dela berrogeita hamar urte bizi izan ziren gorrotoen eta minen historiarena. Ene laguna, Ereinotzen Hobi aldera mugitu zen. Kondenatuak txanda zain egoten zirenekora fusilatuak izan behar zutenean; marmolezko idulki gisako bat ipini dute bertan, inskripzio batekin eta katezko burdin hesi batez inguratua, puntu horretan exekutatua izango zen aberri zale ospetsuren baten memorian altxatua suposatzen dut.

Eta zein da nire sorpresa ikusten dudanean ukitu gabe jarraitzen duela paredoiak, xehetasun batekin, postea erauzia eta erretiratua izan dela…! Euriteek eta pilatutako hautsak belztu egin dituzte orain berrogeita hamar urte zuri ikusten ziren balak inpaktu eginda eragindako zuloak.

Ez dut uste errealitatean irudikatuko denik, baina Kubara itzuli nahi nuke. Eta behin Kuban, ezeren aurretik eta oroz gain, Cabañara igo gura nuke eta argi eta biziz beteriko memorien erritura deituko nieke, danborrik eta kandela pizturik gabe, aingeruei, inguma eta mamuei, hegan ibiliko direnei bere harri ilun, zahar, higatuen gainetik.

Berrogeita hamaika urte geroago,
taupadaka darrai bizi den oro,
denboraren joanak moteldutako bizia
islatua oroimenaren pantailan.
Itzalak, hotsak, hitzak,
galera, hobia, harresia,
Plazatxoa, heriotza ahotsak,
erailtzen zuten gizonak
hiltzen ziren gizonak.
Eta Kristo bat,
isilkari, zurrun, hotza,
ene eskuetako batean
goratua.
Kristo berbera,
burdinazkoa hau, bestea porlanezkoa,
errieta egiten niona gaitzespen lez,
kondenatuekin iragaitean
paredoiko bidean
gau erdian.
Nor haiz? Zer egiten duk hor?
Zergatik ez haiz jaisten nirekin etortzeko?
Gizon hauek behar haute.
Neuk ere behar haut.
Eta Kristoak ez berbarik,
ez jaisten zen,
ez zen mugitzen.

Espazio ilun eta zikin bat, estua,
non ez dakidala nola, baina badakusat
iragan argiak amatatzen ari zaizkidan
eta zuri bat pizten doakidanean.